

JOKIN URAIN LARRAÑAGA. «Kixkur». 1959.eko Uztailaren 21an jaiotzen da Mendaroko Alkorta baserrian. Bere lehen ikasketak Lastur bailako eskola Nazinalean egiten ditu. Geroago Zabalegi Nekazaitza Eskolak segitzen dituelarik. Behin hauek bukatuta, baserrira itzultzen da honen kargu egiteko. Inguruan jasaten ari den egoera politikoak bultzatuta bere burua Iparraldean babestera behartuta alde egiten du, 1983.eko Maiatza. Iparraldean hiru urte eta erdiz bizi izango da. 1986.eko Urtarrilaren 10ean poliziak atxilotu egiten du Basaurin, Guzmanen bahiketan

parte hartzen duenean. Hiru hilabete beranduago, Espainiako gartzeletan denean, semea jaiotzen da Hodeiertz. Carabanchel, Alcala, Herrera de la Mancha, Sevilla eta Terueleko kartzelak ezagutzen ditu, azken honetan delarik gaurko egunean. Kartzelan sartu bezain laster hasten da idazten, 1986.eko Abenduan Debako Tene Mujika 3. saria lortzen du. Geroago hainbat eta hainbat ipuin labur eta bertso idatzi burutzen ditu. 1989.eko hasieran Susa aldizkarian kaleratzen dira batzuk eta urte bereko Abenduan Algortako Bertsolari Eskolaren «Urretxindorra» sari berezia eta bi aipamen jasotzen ditu bere bertso paperengatik.

# AURKEZPENA

Eskutan duzun liburu hau ez litzateke liburu hutsa baino izanen, beste edozein bezala, honen egilea euskal preso politiko bat ez balitz.

Gaiaz guk baino gehiago ulertzen duten beste batzuk, liburu honen kalitate literario eta estetikoaz egin dezaketen balioespenaz at, eta beste zenbait balioespenetan sartu gabe, liburu honi, 500 euskaldun, euren giza eta afektu ingurutik fisikoki urruntzen dituzten distantzia eta murruez handik sortu izanak ematen dion balioa, eskuetan dauzkazun orrialde inprimatu eta azaleztatuena baino askoz ere handiagoa da.

Baina heldu zaizu, hauxe da garrantzitsuena, eta beronekin batera, bizi asko dagoela, jende asko, arnasa egitea eta bizirik irautea benetan zail bihurtzen duten baldintzetan, bizi dela bizi. Izan eta komunikatzeko beharrerekin arras konprometaturik bizi dira. Gainezarri zaien egoera horren gainetik, alegia presoa izatearen eta ezkutatzeko eta isilarazteko asmaturiko «terrorista» izenaren gainetik, direna, pentsatzen ari direna eta sentitzen dutena ekarri eta elkartrukatzeko beharrerekin. Horrexegatik, askoren ustez liburu hau idatzi

duena «terrorista» izanen da, eta, honetara, eraturik izanen dute, liburu honen orrialdeei hurbildu/ekiteko euren koartada mentala.

Izan ere, gero eta handiagoak, zorrotzagoak, sofistikatuagoak eta zakarragoak dira errealitatea ostentzeko ahaleginak, ezen jendarteko eritziak hau erabat bereganatzeak, arrisku larrian ipiniko luke, gainezarri nahi zaigun diskurtsu normalizatzailea. Ahalegin hauek barrurantz ez ezik, beraiek ezagutzeak kontzientziak ez-eroso jarriko lizkieketen errealitateekiko kontaktu ororekiko itzurikor direnenganantz ere zuzentzen dira. Zeren ez bait da normala ezen, «demokrazia»n heldu izana Euskal Herriaren azken garaietako historian, frankismoa barne, preso politikorik eta gehien edukitzera. Zeren ez bait da koherentea, bakea eta askatasuna, uniformeekin eta kartzelekin batera joatea.

Eta horrexegatik deitzen diete «terrorista». Arazoa filme amerikarretako on eta gaizkileen ohizko planteiamendu merkera mugatu nahi dute. Mugarik gabeko ontasuna duten onak, degradazio sineskaitza lortzen duten gaizkileak. Eta horixe da egin nahi dutena. Eta behin eskema-tipoa sartuz gero paperak adjudikatzen dituzte. Eta gaizkileak presoak dira, terrorista kalifikatzailea ezartzen zaielarik.

Beste modu batera izan liteke. Beste batzu izan litezke eta bide horretatik goaz. Nahikoa da eskema zabaltzearekin, nahikoa da eskema-robot hori, gaizkile-terroristaren izaera prefabrikatu hori, asimilatu eta ekologistari, insumisoari, homosexualari... aplikatzearekin. Faszistizatze prozesuan, euren arauetatik, geroz eta mugatu eta mugatzaile diren «joko-arau»etatik at dagoen guztiaren kontrako errepresio instituzionalaren legeztatze prozesuan alegia, aurrerapausu bat emanen dute.

Horrexagatik, Amnistiaren Aldeko Batzordea garene aldetik, euskal preso politikoen eritziak, lanak, izaera eta sentimenduak igortzeko konpromezua geureganatu dugu. Boterearen eskema apurtu egiten bait da bere bokazio bate-

ratzailea, errealitate faltsuztatuen artean aukera faltsuak sortzeko egiten duen ahalegina apurtzen badugu, baldin eta lortzen badugu apurtzea gidoi hori, zeinetan, antzezleak gorrotatzen dituzten pertsonaien antzera aurketu nahi bait dituzte, errealitatea fikzioarekin, errealitatea toxikazioarekin erraz nahasten dituen ikuslego baten aurrean.

Eta bizimodu horretara eraman nahi dute presoa, hori da eman nahi zaion papera. Horrexegatik jakinerazi nahi dizuegu preso horren atzean, terrorista deitzen duten horren atzean, pertsona bat dagoela. Bere izatea bera ukatu nahi dioten pertsona. Zer esanik asko daukan eta esan nahi duen pertsona. Biziraupena baino harago bizi, existitu eta izatea ukatu ezin zaion pertsona.

Lehenengo liburu honen argitalpenarekin hasten den ekimen honen xedea horixe da beraz, eta honen atzetik, errealitate batera, bizipen batzutara, pentsamentu batera, gauzak egiteko eta ulertzeko modu batera hurbiltzeko balio izanen duten beste liburu asko etorriko direlakoan gaude. Hortxe, murruen atzean, kilometro askotara dagoen errealitatea da, eta hau, bertatik, gauza guztien gainetik hala izaten segitzen duten geure Herriko hiritar asko eta asko pasaratzen ari diren odolezko zati mingots bat da.

Hemendik, doakiela barruan daudenei geure eskerronik beroena, barrua zein kanpoa ez daitezen inoiz elementu elkarraurkatutzat har.

# AINTZIN-SOLASA

*Eskutartean daukazun liburuxka hau euskal preso politiko baten burutazio eta gogoetak dituzu soilik, hots, euskal presoon burutazioak, hain zuzen ere. Langileak, laborariak, udaltzainak, arrantzaleak, idazleak, harginak, trikitilariak, langabetuak, ikasle alfer xamarrak edota Errotaxaharreko bordako seme kuttunena hain estuki berdintzen gaituen gartzela honetan sortutako burutazio bat besterik ez dugu idazki hau; hori eta beste zerbait gehiago: salaketa eta itxaropen oihu bat. Tronpatuta zabiltza, beraz, literatur ekoizpen «puro» baten lurrin goxo zein mikatz baten bila bazoaz; gartzelako literatur ekoizpena luebakitako alde batean dago kokatua, eguneroko errealitateak baldintzatzen eta mugatzen gaituen aldean, hain zuzen. Ez dituzu aurkituko ere Papillonen abenturak, hemengo abentura bakarra etsai eta zakurren aurrean irmoki eta bizirik irautean bait datza. Nekez aurki ditzakezu ere Julius Fučik testigantza liburu ikaragarrian agerturiko gartzelero laguntzaileak, gaur egun Sistemak trokelatutako gartzeleroak «akatsik» gabekoak bait ditugu arras.*

*Orri hauetan barna lerratuz doazen imajina eta esperientziek, preso batek sentitutako terrore eta izuei buruzko kontakizun xume bat baino aunitz gehiago isladatzea nahi lukete. Izan ere, denok inguratzen eta irensten saiatzen den Izaina, gure gizartea gidatzen duen Sistema bera dugu. Izainak, gizarratoiek, gizazuhainek, erresistentziak, liburuaren azalean agertzen diren tunel ilun eta begirada pozoinduek... Idazki hau, azken finean, gaur egun bizitzen ari garenaren parabola bat besterik ez litzateke izanen, errealitatezko parabola bat, zeinen bidez Sistemaren barne barneko erraia argi bait dakusagu. Eduardo Galeano idazle uruguayarrak, Sistema eta egoera honen argi bezain sakonezko radiografia bat egiten digu:«...porque forma parte de todo un complejo mecanismo de extorsión, que intoxica a la democracia con el gas paralizante del miedo, para evitar que ella se desarrolle y respire a pleno pulmón. Miedo al cambio, miedo al cambio de verdad: ciertos miembros de la lastimosa especie de la izquierda arrepentida, ansiosos por borrar sus propias huellas, colaboran en la difusión masiva del miedo, codo a codo junto con los representantes de la cavernosa tribu de la derecha tradicional y los burócratas que se ganan el sueldo como pueden. La búsqueda de justicia se convierte, así, en coartada para locos, y la lucha contra la injusticia se reduce a un aventurerismo y se disfraza de prudencia. Puede reconocerlo, sin embargo, cualquiera que tenga ojos en la cara...» "«Nosotros decimos NO»349 orr.".*

*Ia konturatu gabe inguratzen gaitu Sistemak bere dirdira erakargarriaren eta mehatxu izkutuen bidez, disidentzia guzia baztertzen eta kolpatzen saiatzen delarik. Era berean, gartzeleroak —Sistema/Izainak sortutako behar eta mirabeak—, ziegazainak, izanen ditugu Sistema honen ordezkariak, hots, gizarratioak, izainaren interesak gogoz eta adorez defendatuko dutenak disidenteak ezpertsonalizatzen saiatuaz. Baina, gure gizartean gertatzen den bezalaxe, ez gaude baztertuak, Izainak oraindik ez gaitu bere bentosekin inguratu eta menperatu, eta bera ere pairatzen ari da gure erasoak. Beraz, posible da*

*Izaina kolpatzea eta hortan dihardugu gure superbizipena jokoan dugularik. Hemen agertuko zaigun zenbait pasarte eta egoera erabat kafkiarrak izanik ere, sekulan ez zaigu suertatuko «Non future» gisako mezu etsipengarririk; haatik, borroka eta itxaropena izanen ditugu egoera honen aurkako arma zorrotzak.*

*Denbora eta lekua ere (gai filosofiko eternalak) behin eta berriz aztertuak izanen dira lagun gartzelatuaren hausnarketetan. «Gure pausoek neurtzen digute denbora» dio pasarte batek, gartzela barneko eta kanpoko dimentsio ezberdinak behin betirakoz finkatuz. Denbora eta lekua dimentsioak, hala nola gauzei, sentimenduei eta pertsonei emandako baloreak arrunt desberdinak dira barne honetatik edo kanpotik ikusita. Desberdintasun hauek harriduraz bizitzen ditu lehenik espetxeratu berriak, gero poliki-poliki mundu eta egoera honetara moldatuz doalarik. Gure gartzelan erabat debaluaturik geratzen da gizonaren prestijio pertsonala-zutabe faltsotan oinariturik badago, batez ere— bakoitzaren norberekeriak ezertako balio ez duelarik. Halaber, edertasunaren eta sentiberatasunaren kontzeptualizazio hutsal eta pedanteek zentzu osoa galtzen dute barne honetan. Aldiz, elkartasuna izanen da gehien kontsideratuko den balorea eta zimenta tartean sortutako lore edo belartxoek erakarriko dute presoaren sentiberatasuna, hala nola txolarre edo xoxokume galdu eta izoztuek. Denbora dimentsiora itzuliz, eguneroko pauso eta eginkizunek urratzen dute hemen denbora baina, finean, itxaropena izanen da gartzelako denbora benetan markatuko duena.*

*Liburu azalean agertzen diren korridore eta zulo beltzen imajinak, bestalde, gartzelako eguneroko errealitatea dugu: korridore, ate, zerrail, ziega eta zulo beltzek osatzen dute gartzeletako egitura itsusiak. nahiko lukete ziegazainek presook noraezean kulunkatzea, burmuineko eta zimentazko laberintoan barna, horretarako diseinatua bait da. Halaber, preso biluzketaren zeremonia degradantea —gartzeleroa degradatzen*

*duena batez ere— ukitzen duen pasartea eguneroko ogia dugula esan beharrik ez dago; edota amaraunean dauden gorpuen eta lagunen malkoen imajinak guziz errelak direla, gartzelan itzalitako lagunekiko ezintasun malkoak maizegi xukatu behar izan bait ditugu. Ildo beretik jarraikiz, idazki honetan agertzen diren egoera eta sentimentuek errealitatearekin duten antza bene benetazkoa dela esan beharra dago, zenbait literatur lizentzia, imajina eta sinbolo gartzeletako eguneroko errealitatean gauzatzen bait dira.*

*Konzesiorik gabeko testigantza dugu idazki hau. Hain intolerante eta odolgaiztoa den Sistema honek «tolerantzia» eta «bakea» behin eta berriz aldarrikatzen ari den une honetan, gorrotoa erreibindikatuko da pareta hauek mugatzen duten barne honetan; gartzeleroekiko eta sistemarekiko gorrotoa hain zuzen, mundu krudel honetatiko aterabide bakar bezala. Maitasuna, elkartasuna eta xamurtasuna lagunengara eta jipoituengana zuzenduko dugu, Sistema eta gartzelak hain basaki zigortzen dituen lagunengara. barne honetan, tolerantzia hitzak enganio, faltsukeri eta etsaienganako posizionamendua besterik ez du adierazten. Sistemak bere «bakezale» deihadarkariak eta bere «giza eskubideko» erakunde ofizialak sustatzen dituen une honetan, herri xumeak ere bere erakunde eta salaketa tresnak sortu ditu. Sistemak/Izainak bere mezu faltsu eta konformista bazter guzitan hedatuz doa: oinazerik gabeko amodioa eta gerlarik gabeko bakea prometatzen duen mezua. Hori izanen da preziski herri antolakuntzaren jomuga: Sistemaren mezuaren azpian dagoen mezu izkutua kanporatzea eta bere benetazko interesak larru gorritan agertaraztea.*

*Esan behar, amaitzeko, imajina, ideia eta egoeren errepikapen aunitz agertuko dela beharbada idazki honetan; baina hori ez da kasualitadez gertatzen, hemengo egoera eta bizitza errepikakorra bait da arras. Eginkizunak eta hitzak berak ere mugatuak ditugu hain estuki mugatzen gaituen barne honetan, noizbaiteko ortzemuga zabal baten haiduru jarraikitzen dugun bizkitartean.*

*Hasieran esan bezala, salaketa bat duzu liburuxka hau; denborarik ez gal, beraz, literatur trikimailu edota mezu subliminal misteriotsuak bilatzen, alferrikako lana izanen bait litzateke. Susper dezagun esperantza denon artean.*

*Fernando Arburua Iparraguirre*

—Argiguneak beste dimentsio bat hartzen duen mugan honat igaro ginenean konturatu nintzen atzerako bidea zailtzen, eragozpen-muruari maila bat gehitzen geniola aurrera egiten genuen urrats bakoitzarekin. Era berean konturatu nintzen, baitere, aurrera jarraitzea zela irtenbide bakarra; galeraren amildegi hondogabea zegoela atzeraka emaniko pauso bakoitzean; guztiaren amaia, hondamendia, suntsiduraren garaipena zela atzerakadarik nimiñoena. Lagunen aurpegi zurbiletara begiratzean izuaren barrutiko landare guztiak haietan erneak zirela pentsatu nuen, nerea bertsua zatekeela onetsiz. Osin batetako ur zurrunbiloen jira-biran bezala, atzera ezinean harrapatua sentitu nintzen lagunekin batera. Eta, argiak beste dimentsioa hartzen duen mugan honat jaurtiki gintuen korrontearen bultzada bortitzak. Gure laritasunari soraio, bultzada hark aise garaitu zituen gure indarrak. Bere indarrean loturik, korapilaturik, ekarri gintuen, ameskaizto batetatik iratzar ezinik bezala. Behin eta berriz garraisi egin genuen eta errebelatu ginen indar ezazagunen aurka, baina gure indarrik sendoenak ere ez zion eragin txikienik egiten saihestezineko amildegira gindekartzan bultzadari. Albokoari so banegio bezala erreparatzen nion neure izate izutuari; eta zinez, nik hura beste norbait zela pentsatzen nuen; nere ulermen aztoratuan ezin eden bait zitekeen gertakizun

haien neurri erraldoia. Indar ezezagun hark zelatarteren batetara ginderamatzala nozitzen nuen; hil ala biziko gatazkan geundela. Baina gure ahaleginak ez ziren iristen gure nahietara. Gure madarikazioak ez zuten gure gogoen indarrik, ez zuten gure agindurik betetzen. Gure negarrek inpotentziaren malkoak isuri zituzten. Laino-itsuak inguratzen gintuen eta gure begiek ez zuten inguru hurbila baizik bereizten ahal. Edo gure galduordeak itsutu gintuen apika. Gure zai balegoen bezalako harreraz irentsi gintuen, haraino iristean, argiguneak beste dimentsioa hartzen duen lekuaren ahotzarrak. Handik soegin genion atzean utzitako guztiari. Une hartan txango bati hasiera ematen geniola konprenditu nuen. Nekatua, erabat ahuldua sentitu nintzen ahotzarean honat igaro ginenean; belaunak indarge nituen, pausotik pausora astunago egiten zitzaizkidan. Buru nahastuak, berriz, ez zidan erantzuten premiazko beharrari aurre egiteko eran. Denboraren lokarriak hurbil atxikitzen bagintuen ere, engoitik oso urrutiratuak ginen mugaz lehengoaldeko argigunetik. Gure txangoa hasia zen ia, igarobide eta gela ilunetako hertsitasunean zehar. Denboraren iragaite soilak urrutiratzen, urrutiagotzen gintuen, mendietako iturburuetan sorturiko ura itsasora bidean urruntzen den legez. Jadanik ez zen lehenera itzultzerik. Ondorenera, gerora iristea zen irtenbidea. Baina ez zen geroaren argiprintzarik gure begietara heltzen, eta gune hartako laino-itsuak iluntzen zigun eguratsa. Hango guziak izate aldakaitz eta irmotua zuen; bizigabea eta fosilizatua zirudien guztiak. Harri edo burnizko irudi eta eskulturak ziren han gure erresumako herrietan zuhaitz eta belar direnak. Ormetan margotuak zeuden noizbait arrosa edo bitxilore izanak, orain haien oroitzapen idorrak. Marrazki edo zirriborroetan ikus zitezkeen uzta, ardo botila, eta orein haragiz atonduriko mahai handiak; behialakoak bezain hotzak. Ezgizatiarrak eta higikaitzak ziruditen marrazkietako begien leinuru arrotzek. Edonora zihoazen ezkaratze luzeak ikus zitezkeen edozein kantoi eta bihurgunetatik. Nonnahi zeuden ate itsu eta han-

diak, nonnahi ezer erakusten ez zuten edo beste gela ilunen batetarako igarobide zatezkeen leihoak, leku hari aire misteriotsu eta makabroegia erantsiz. Jatorri ezezagunetatik zetozkigun ahotsak entzuten genituen, jarraipen zehatzik gabeko ahotsak. Geure hizketak zitzaizkigun uler genitzazkeen zarata bakarra, haien oihartzuna zen ezagun zitzaigun bakarra, eta horrek babestuko baikintuen edo, ozenkiago eta ugariago mintzatzen hasi ginen; geure eleak behin eta berriz entzunaz, haien laguntza edo abaro bila. Bereziki geuretzat prestaturik zeukaten tokian sartu ginela konturatu ginen poliki poliki; han ziren lo egiteko toki zatezkeenak, jateko erabiltzeko modukoak, esertzekoak, eta guk zertarako ziren antzik ere eman ezin genien beste toki eta gauza anitz. Beti aurrerantza jotzea erabaki genuen. Atsegin eta aitzina, atzerakadarik gabe, geldi egon edo aurrera jarrai; etendurarik gabe.

Egoitza higikaitz bat iruditu zitzaidan lehen ikusaldian. Tunel izugarri bat zirudien, pasabide eta gela handi eta txikiagoz osaturikoa; han-hemenka zeharkatzen diren galeriaz eta ezkaratzez osaturiko laberinto baten gisakoa; hiri txiki bat. Ludiaren erdigunerik gordeenean eginiko bizilekuaren antza hartzen nion; filmeetako irudiak ametsetan berrikusten direnean antzo. Edo urazpian bizitzeko prestaturiko untzi erraldoia zatekeen agian. Antzerako ondorioetara iritxi zitekeen behin barnean izanik. Gizarratoi handi eta higuingariak ikusi genituen heldu eta berehala; gela batetik bestera igarotzen ziren, eta ezkaratze luzeetan haruntz eta honuntz joan-etortzen, begira desafiatiz so egiten zigutelarik beti ere. Oso urrin bitxia zerieten gizarratoiei. Heuren zuloetan sartzean eta haietatik ateratzerakoan izugarrizko zaratotsak egiten zituzten. Aisa uler zitekeen gizarratorien hirian ginela, edo gutxienez haien erresuma zatekeen ingurunea zela hau. Gizarratoi horientzat egoki eraikia zirudien guztiak; hala eratuak zeuden ateak ziruditenak eta gu iritxi ezin gintezkeen zenbait gordeleku. Konturatu ginen heuren gordeleku haiek gordeleku ezezik talaia eta zelata lekutzat ere erabiltzen zituztela gizarratoiek. Eta izkutaleku haietatik zaintzen gintuztela, edo guri begira egoten zirela gutxienez. Beraz, leku arrotz eta beldurgarrian izateaz gain, alde guztietatik eta gutxien uste

genuen tokietatik jagole genituen pizti madarikatu bezaien nardagarri horiek. Ez ziren guregana hurbiltzen. Gure ingunea ekiditen zuten, baina ez gure beldur izatearen eraginez. Izaki ezberdin izatearen inkonpatibilitateak bereiztarazten gintuen elkarrengandik, bakoitzaren eguratsak muga iragangaitza bailuen. Halabaina, haien eta gure begiradek sekulako suzko gatazkak sortzen zituzten elkargurutzatzen zirenean.

Inguru zehaztezin batetatik doinu ezagun-uste eta atsegina heldu zaigu belarrietara, eta doinuaren sorleku bila abiatu gara; desesperatuki. Pasabide eta gelaguneetan begiratu nahi izan dugu, eta horrela hasi gara bazter guztietan erreparatzen, bilatzen. Baina ate automatiko eta irmoak hertsi dira gure aurre eta saihetsetan; patu aurrez ezarriak eta ezezagunak bere aisiara bideratu gaitu. Gure pausoen jarraibidea aurremarkatua izan zaigu, bere ildoan jarraitzera behartuz, halako gelagune batetara eraman gaituen arte. Eta han ediren dugu doinu bitxi eta atsegin haien sorlekua; egitura bitxizko gela bat. Orma guztiak zuloz saretuak zituen gelak; gelaren goi, behe eta lau ormak zuloz saretuak. Zulo guztietatik indar handiz sartzen zen haize eta argia. Nolabaiteko erdigunea bailitzan, handik urruntzen ziren ezkaratze edo pasabide guztietan zehar, norabide guztietan zehar hedatuaz haize eta argi oparoa. Ormetako zuloetatik barneratzen eta kanporatzen zen haizeak zerabilen hain atsegin nozitu dugun doinua. Eserlekuak zeuden gelan, eta eseri egin gara guztiok. Elkarri begira. Elkarren begietara erantzunik gabeko galderak zuzenduaz eseri gara. Gizarratoitzarren aztarrenik han ez dela konturatu naiz. Eta, ez; han ez zegoen gizarratioen aztarrenik. Baina bai haien usaina, haien kiratsa. Zuloren batetatik begira egongo zaizkigula bururatu zait orduan, eta haien pre-

sentziaren ziurtasunak astunki zanpatu nau. Baina asebete zait gogoa hango soinu eta haizearen atseginaz. Ez dut piztitzar horietaz pentsatu nahi izan. Hain izan da lasaigarri atseginalditxo hori! Gogamen oro aldendu nahi izan dut nere burmuinetatik, sofrikariotik ilki unetxo batez. Ametsetan nagoela pentsatu nahi ukan dut; orma bakoitza orkesta bat dela imaginatu. Eta sei orkestak guretzat jo dituzte baladarik preziatuenak, imagina daitezkeen doinurik ederrenak. Haize zerbelez nahastuak zetozkigun musika notak. Orkesta haiek dohai bereziak izan behar dituztela pentsatu dut, eta haien dohai berezia amaigabea izan dadin desiratu dut nere ametsetako eskarian. Eta zinez ederra izan da doinuaren kulunka; haizearen kulunka bezalakoa, leuna eta amaigabea, eta haizearen doinu kulunkariak eraman gaitu aidean. Doinu kulunkari eta leunean murgilduak joan dira gure irudimenak, haizearen baitan deslai, doinu xaramelagarrian mozkorturik. Doinuzko haizetan igo gara gorantz, gorantz eta gorantz, eta honantz eta harantz. Zulo saretutik zetorkidan argia oskorria dela imaginatu dut gero; egunsenti edo ilunabarreko oskorria. Eta gure doinuzko haizea kolorez jantzi dadin eskatu dut. Eta ortzadarraren koloreak etorri dira gure doinuzko haizea margoztera. Ortzadarraren kolorezko doinutan blai egin da haruntz-honunzka ginderabiltzan haizea. Udazkeneko hegohaizetzat taxutu dut zulo haietatik sar-irtenga zebilen haizea, udazkeneko hegohaizea baita haizerik ederrena, zoragarriena. Paisaiarik txundigarrienez osatu dut nere ametsezko paradisoa. Eta paisaiarik zoragarrienetan zehar eraman gaitu ortzadarraren kolorez blai egindako doinuzko haizeak. Gero haizea baretu egin da nere ametsean, eta euria hasi du. Oskorria hodeitzarrez, hodeitzar beltzez estaldi da, eta orkestako arrabitak desfinatuki txilio egin du. Doinuek jarrai dezaten erregutu dugu, baina desagertu, atertu egin dira gure eskariekiko entzungor. Behin eta berriz erregutu diegu guretzat jotzen jarrai dezaten, baina isiltasuna sakonago egin da gure oihuak itoaz. Nere ametsa madarikatu dut. De-

solazioa irakurri dut nere lagunen begietan. Gizarratoien usai okaztagarria nozitu dut berriro; haien begiradapean jarraitzen dugula ohartu naiz, eta ametsetik erabat jalgitzen lagundu dit oharpen horrek. Begiradak galdera kezkati bilakatu dira berriro; begirada eta galdera tristeak. Gure aurrean ate pizu bat zabaldu da, handik aitzina pasabide zuzen eta luze bat erakutsiaz. Atea igaro eta pasabiderantz abiatu gara, bazterretara adi, ustekabeak ezustean harrapa ez gaitzan. Elkarrengandik hurbil, bata bestearen babesean edo babes nahian.

Ustekabean amaraunak harrapatua, inoiz lortuko ez duen askatasunaren nahiean borrokatzen da orain eulia. Hil ala biziko tirabiran borrokatzen da. Euli gaixo madarikatua! Ea orain konturatzen den nere aurpegian itzuli-mitzulika ibili denean sortu didan haserreaz. Zergatik ibili behar zuen nere aurpegiaren inguruan, bere atergabeko durundioaz amorrarazten? Zergatik farre egin dit ner esku-zarta makalei aisa ihes egitean? Nere aurpegi eta ezpainetan pausatu ditu bere hanka beltz zikinak. Zaflada bat eman diot neure masailari eulia harrapatu ustean, baina euliak ihes egin du aisa, bere durundio enoiagarriaz. Eta sekulako zaplada hartu du ene masailak. Hegaldi mimiño eta trufalariaren ondoren berriro pausatu da ene masailean, nere baretasun eta atseden lasaia apurtuaz. Behin eta berriz gauza bera egin du euliak eta behin eta berriz neuk emandako zaplada hartu du nere masailak. Eta masailetik hanketako behatzetara joan zait eta handik berriro ezpain ertzetara, eta gero begi ondora, eta masailera berriro, eta nik zapla masailari, eta euliak ihes bere dudundio geldoaz. Baina orain armiarma sarean harrapatua dago eulia; ustekabean harrapatua, bere zoritxarrerako. Orain neuk egingo diot farre euliari, galduordean nola borro-

---

OHARRA: «Galduordean» hitzak desesperatuki edo horrelako zerbait esan nahi dik.
Adibidea: oreina zakorren aurrean ihesi doanean galduordean doa. Nora doan ere ez dakiela, itsu itsuan eta larri doana galduordean doa.
Hiztegietan ez duk aukitu; etxean, baserrian ikasitako hitza da.

katzen den ikusirik. Farre egingo diot algara ozenez, nere algaren oihartzunak amarauna balantza dezan arte. Euliaren zalapartek eta etengabeko durundio arlote horrek esnarazi dute armiarma, eta berarengana hurbiltzen hasi da ezari ezarian. Gustora dago armiarma, pozik, Farra egiten duela iruditzen zait, agian nireganako eskerronez. Eta neu ere gustora nago eta farra egiten dut. Eulia da festa honetan farrarik egiten ez duen bakarra. Euliak garraisi egiten du, garraisi eta zalaparta. Agian negar ere egingo du, baina negar egiteko une egokia ez da euliarentzat. Eta malkorik ere ez du izango ziur aski; malko bakar batetan urtuko litzateke hain txikia izanik. Ez, ez, ez du negarrik egiten euliak. Garraisiak egiten ditu, eta oihuak. Agian niri ari zait oihuka, eta niri ari ez bazait ere horrela dela imaginatzea gogoko eta atsegin dut. Bai, aska dezadan erregutuaz oihuka ari zait; behin eta berriz, burua makurtuaz erregutzen dit aska dezadan. Baina nik farra egiten diot algara ozenez, farra egin eta begira jarraitu. Saretik askatzeko ahaleginetan dihardu bere indar oroz, bere indar guztiak bilduz azken txanpa horretan. Baina nik badakit alferrik ari dela, badakit ez duela lortuko, geldirik egonik ere berdin zaiola. Ez du puskatuko armiarma-sarea. Armiarmak ere badaki hori, eta euliarengana doa, emeki. Bere sare gainean pauso ziurrak emanaz, zuhurki entrenatutako trapezista da armiarma. Eta ni izan naiteke bere manajera, eta kontuz ibiltzeko esaten diot; kontuz ibiltzeko balantza makal horietan erori gabe, txorakeriarik egin gabe ibiltzeko. Lokarri lasaiegitik erori gabe argi ibiltzeko agintzen diot; arlotearenik ez egiteko. Doala zuzen zuzen euliarengana. Ongi trebatutako trapezista da armiarma; baita izan behar ere, bestela ez nuke ekipoan onartuko. Eta lazki zigortuko nuke horrelako ehizi kutiziatua ihes egitera utziko balu. Ongi daki hori armiarmak. Eta ongi daki, baitere, eulia ez dela askatuko, berak eginiko sareetan erortzen den eulirik ez dela askatzen ahal. Eta farra egiten du armiarmak; begiz keinu sopikuna eginaz, bere aho zikina oso zabaldurik dagi farra euliaren-

gana hurbiltzen doan heinean. Filma amerikarretako King-Kong-i ikasitako oihua egiten du aurreko bi hankakin bularra joaz, eta eulia txunditurik gelditzen da oihuaren ozenaz; hezurretaraino sartzen zaio ikara. Aitzina ematen duen pauso bakoitzean irmo heltzen dio amaraunari bere hatzapar beltzekin, egiten duen pauso bakoitzean nagusitasun nabarmena aldarrikatzen du armiarmak. Eulia, gero eta izutuago, indarrak ahulduxeak, armiarma zantarrari begira gelditzen da tarteka. Niri ere begiratzen dit, edo begiratzen didala imaginatzen dut. Agian erreguz begiratzen dit, bihotza bigundu desioz. Baina ez zait bihotzik biguntzen niri, eta gurutzatua erreko nuke erromatarren garaiko gladiadorea banintz. Euliak ez dira, ordea, gurutzatuak erretzeko egokiak; sofrikario txikiegiz desegingo lirateke erretzen hasiz gero, gurutzatzeko txikiegiak dira gainera, ez dira egokiak. Euliarentzat egokiena amarauna da. Nere euliak ongi dazagu hori. Berriro ekiten dio inoiz ezingo duena lortu asmoz. Bere senak adierazten dio, nonbait, armiarmaren xederak Herioren hatzapar direla. Hegalak, hegal ziztrin horiek, sarean nahastuak ditu jadanik; aske utzita ere ez luke aisa hegaz egingo. Gainera, laister ez ditu ezertarako beharko, armiarmak jango baitu. Eta nik ez diot galeraziko. Burutik hasita jango du; bizirik dagoen artean jango dio burua, begitxoetako zumoa dariola. Eta nik utzi egingo diot jan dezan lehen egin didanagatik; lehen egin didanagatik eta eulia delako. Burua jango dio, gero bularra, sabela... Hegoak eta hankak gelditupo dira soilik armairma sarean; hegoak eta hankak gelditupo dira hondamendiaren lekuko. Edo, agian historia desbidera daiteke.

Luzeak dira pasabide hauek. Eta orma garaiak dituzte; orma xuri ohiak, orain, zikinez edo, horiztatuak. Baina ez dakit orma hauek inoiz xurituak izan direnentz, ez inoiz xuriak izan ote direnik ere. Orain nolakoak diren dakit bakarrik; eta orain orma garaiak dira, garaiak eta hotzak, eta pasabide luzeak osatzen dituzte; ezkaratze zurrunak. Pasabide gehiago gurutzatzen zaizkio gu garamatzan honi, berdin luzeak eta zuzenak diren pasabideak. Aurrerantz goazela ate itxurako ugari uzten ditugu gure aldamenetan. Baina hertsiak daude ate itxura duten horietarik gehienak; ia denak. Zabalik dauden bakantsuek gela biluzi eta karratuak erakusten dituzte. Gure txangoan aurrera goazela, gero eta laberinto antz handiagoa hartzen diot leku honi; patu gaiztoz beteriko laberintoaren antza. Denbora luzea daramagu jadanik gela eta galeria hauetan; egunak eta egunak dira igaroak, segurki. Gizarratoien usaina ezagutzen dut nonnahi; jasangaitz izateraino datorkigun kiratsa. Mailukadak bailiran kolpatzen naute gizarratoitzarrak zelatan eta begira dauzkagunaren gogoetak. Akitzen naute erabat, eta ahultzen, etengabeko begirada horien presentziak; izkutuko presentziak. Eta etengabeko ezbai honek, norainoko mehatxuak jazartzen gaituen ez jakite honek eta tai gabeko kinka anker honek ahulduagotzen nau. Ez dakit notzuk eginak diren galeria madarikatu hauek; ez daza-

gut proiektu hau burutu zuen ingenierorik. Ez dakit zernolako gizaki motek isuri zuten heuren izerdia, edo eginiko eraikuntzaren xedea zer zatekeen zekiten edo ez. Ez dakit heuren borondatez edo bortxaz egin zuten ere. Baina pasabide hauek luzeak dira. Oso luzeak dira. Ez dut jakin nahi nortzuk eginak diren gela biluzi eta hobiel hauek, edo nola eraiki zituzten ormak hain altu. Gorantz jaurtikitzen ditut nere madarikazioak ere, baina ez dira iristen ormak gainditzeraino, eta atzera erortzen zaizkit neronen gainera; neure gainera erortzen zaizkit neronen madarikazioak ere. Ez lidake ezeratarako balioko egoitza makabro honen egile nor den jakiteak. Edo agian bai; apika, nere inpotentzia astunago egiteko balioko lidake. Nahiago dut ez jakin; nahiago dut nor gorrotatzen dudan jakin gabe gorrotatu. Nere indar oroz gorrotatu orma itsu hauek bere eskuz eraiki zituena. Ezagutuz gero indarra gal lezake nere gorrotoak, edo urriki bihur liteke. Eta nik ez dut inorenganako urrikirik sentitu nahi, ez baitu nehork urrikirik merezi. Bestalde, maitatzeari denek ongi baderitzote, zergatik ez gorrotoari? Gainera, maitasunik baldin bada, izango da gorrotoa ere. Maitasuna zilegi bada, haizu bekit gorrotatzea. Nork edo zerk debekatu behar dit gorrotatzea? eta zeren izenean? Nork du eskubiderik gorrota dezadan galerazteko? nork arrazoi moralik? Jainko izun horiek kendu behar ote didate, ausaz, gorrotatzeko indarra eta eskubidea? Zer arrazoiren indarrez kendu behar didate, harrapatu behar didate, gorrotatzearen elikadura asegarria? Ezin diezadakete horrelakorik egin. Behar dut gorrotoa, eta gorrotatu behar dut. Gorrotatuko ditut orma hauek, pasabide luze hauek, eta behin eta berriz gurutzatzen eta gurutzatzen diren pasabide luzeago hauek egin zituzten eskuak ere gorrotatuko ditut; eskuak erabili zituzten besoak, beso haiei agintzen zien burua, eta buru haiei agintzen zien beste burua ere gorrotatuko dut. Gorroto horretan, otin horretan bermatzen dut nere oreka eta indarra, galeriotan ezinbestekoak zaizkigun oreka eta indarra; iraun eta jarraitu egin behar dugulako.

Egoera eta sarraski honi gainditu behar natzaio, gatzaizkio. Horretan bermatu behar dut nere itxaropena igarobidearen bestalderaino heldu arte, guzti honi gainditu eta aurrera jarraitzeko behar diren indar iturri guztietan, hain zuzen. Baina oraindik ez dakusagu igarobidearen bestaldeko argirik. Nere ametsak bakarrik erakusten dit oskarbia. Ametsetan entzuten dut errekastoaren txirtxira. Ametsetan usaintzen dut lore ezberdinen urrin gozoa. Eta ametsek traizionatzen naute iratzartzen naizenean. Baina beharrezkoak zaizkit ametsak ere, eta maite ditut. Zoragarria da inkontzientziaren munduko erresuma. Baita lokamutsak direnean ere; lilura berezia baitute heuren izaera hauskorrean. Fizkio esanguratsuz osatzen dira ametsak; beldurrak, susmoak, itxaropenak eta gurariak nahasten dira gure inkontzientziaren erresuman, guztien artean edabe gutiziatua osatuaz. Horregatik zaizkit beharrezkoak eta maite ditut ametsak. Baina berriro iluntasun nabar hau ikusten dut iratzartzean, berriro galeria luzeegi hauek. Iruzur trufalaria. Nere gaztelu aieruzkoa haizeak eramaten du iratzartzen naizen bakoitzean, eta gatazka-zelai ankerra agertzen zait nere zorigaiztorako; madarikazioaren madarikazioa! Ingurura hedatzen ditut nere lohadarrak, eta espazio arrotza somatzen dut; zola hotzean haitzurdin hotzagoa somatzen dut. Berriro orma ikutzen dut eta galeria zuzen amaigabea ikusten dute nere begiek. Lagunak soma ditzaket alboan. Lagunen ingurua da berogune, epelguna bakarra; haiengan eztitzen dut nere mikazdura. Haiengan berotzen dut nere izate hoztua. Pasadizoan aurrera goazen heinean somatzen da lagunartearen beroa. Lagunen laguntasuna areago sentitzen da igarobide luze hauetan. Indar lagungarriz zamatzen da gure inguruko eguratsa; esparru babestailea osatuko bailuen. Baina guztien ahaleginez osatzen dugu inguruneko egurats hau. Eta nekadura nozitzen da txangoaren joanean. Lehertzear ditut burmuinak, baina ez dira lehertuko; burezurrak ez baitie eztanda egiteko aina leku uzten. Eta nahasten badira ere burezurraren esparruan iraun beharko

dute. Agian, horrelakorik gerta ez dadin ihesbide izan daiteke gorrotoa; asazkapen behartua. Baina hori baino gehiago ere bada. Otinak baditu izateko arrazoi sendoak, arrazoi arrazoitsuak; orma irmo hauek dira arrazoiak, eta gizarratoi madarikatu horiek, horiek batezere, dira arrazoiak.

Hemengo denborak arau ezberdinak ditu; neurtezina zaigu naiz. Ezin dezaket neurtu hemen igarotzen den denbora beste erresumakoaren arauetan. Ez dakit, orduen arabera, zer neurri duen lehendik orain arte iraganiko denbora horrek. Ez dakit luze ala labur den. Hemen beste galga bat ere hartzen du denborak; astun-arinean neurtzen den denboraren galga. Pisu handiz zamaturik bailegoen, nekez igarotzen da. Neketsu igaro da lehena dei diezaiokegunetik oraina deitzen diogun une honetarainokoa. Itzalez gaude inguratuak, itzalen erresumako erromes galduak baikinen. Eta itzalok ez dira eguzkiaren joanean aldatzen, hemen ez baita eguzki printzarik, ez haien bero edo argirik. Gure oroimenetan gordetzen ditugu dasta ditzakegun eguzki printza bakanak. Gogoak jasotzen eta atxikitzen dizkigu irudiak eta soinuak, haien beharrez edo gabezia nabarmenean garenean elikatzeko. Baina gure itzal edo ilunean, eta denbora neurtezina bada ere, gure pausoek neurtzen digute denbora; gure pauso eta egitate bakoitzak: arnasaren denbora, loarena, bildurrarena eta elkarri igortzen dizkiogun begirada apal edo ulertezinena da denboraren neurria. Eta, batezere, itxaropenarena da gure denbora; denbora hain astun eta aldi berean erakargarria, oroimenean bildumatuaz doana. Itxaropena da itsaso haserrean babesa emango digun batela, eta batel horri atxe-

kitzen gatzaizkio gure indar eta izate oroz. Baina astuna da denbora. Gure itxaropenaren indarra zutabe gotor bilakatuko da halere; mende eta medeetan zutik eta fermu iraungo duen zutabea. Baina, gizarratoi horiek! Gizarratoitzarrak etorriko dira noiz nahi; heuren halakret urdin-nabarrez armatuak etorriko dira gure denbora astunago, zailago, egitera. Bestela hurbilduko ez litzaizkigukeenak, indar bereziz, indar berezi eta izugarriz baliatzen dira gizarratoiak halakret urdin-nabarrez armatuak jazten direnean. Zinez izutzen naiz eta indarge sentitzen gizarratoiak jantzi horrekin ikusten ditudanean. Lagunengana hurbiltzen naiz haien abaroan babes bila. Gure zutabe gotorrari itsasten natzaio. Gaina gizarratoiak hurbiltzen dira gure zutabera, eta hozka egiten diote; horza eta hatzaparka ekiten diote, ukabilkadaka eta ostikoka erasotzen diote, makilakadaka kolpatuaz eta orroak eginaz. Batzuk aspertzen direnean alde egiten dute eta beste batzu etortzen dira haien lekua betetzera. Beti horzka gure zutabeari, beti horzka eta ausikika. Amaiezina da setioa; denbora astunagotzen duena. Gizarratoi handien haginkadek zaurtzen dute gure zutabea. Erortzeraino, deusezteraino higatzen saiatzen dira gorrotozko hagindakez eta hatzapakadekin. Heuren joan-etorrietan zaratots handiak egiten dituzte. Heuren halakret urdin-nabarxeaz bazter guztiak igurtzi eta laprastatuaz, ateak igarotzean eta pasabide luzeegietan haruntz eta honuntz ibiltzean zaratots izugarriak egiten dituzte. Burdin zaratak dira gehienbat, eta galeria luzeetan zehar hedatzen da zarata izukorraren oihartzuna; oihartzun bortitza. Gizarratoien arimaren garraisi eta mintzaira era bada zaratots hori. Isilunerik sakratuenak erdibitzen dituen garraisi madarikatua; garraisi ozen malapartatua. Gogoetak puskatzen dizkit mila zatitan, mila zipriztinetan. Gorrotozko estalkiz estaltzen ditut belarriak, leher ez daitezen. Zilegi bekit gorrotoa; gorrotoa eta otina baititut babes eta laguntza. Zorionekoak bitez gorrotatzeko ahalmenik kartsuenak, heurak babesten bait gaitutzte gizarratoien setiotik. Zorionekoak izan bitez

otinaren ahalmen boteretsuak, heuren beroak epeltzen baitituzte gizarratoien horzkada hotzak. Nola sostenga dezakegu bestela begirada zorrotz eta garratz bezain hotz diren horiei aurre egiteko adorea? Nola zeharkatu argiak beste dimentsioa duen erresuma hau? Boteretsua da gorrotoa, maitasuna boteretsua den bezala. Baina hemen ez dut nor maitaturik; ez dut nor maitaturik nere kideok izan ezik. Lagunok osatzen dugun eguratsa, ingurunea, maitatu behar dut hemen, sakonki maitatu ere. Baina ez besterik. Neure larrua urratzea litzateke gainerakoa. Eta ez dut neure larrurik zulatu nahi. Gorrotoak babesten du gure eguratsaren osotasuna. Gorrotozkoa da erresuma honetan gordetzen gaituen gaztelua, gorrotozkoak dira harresiaren harriak. Gorroto bizitan irakiten daude gizarratoiak, gorroto usaia dariete; gorrotoaren lurruna da hemengo eguratsa. Gorrotoz soilik aurre egin dakieke arerio guzti horiei. Ez dut maitasun zulorik irekiko gure hondamenerako. Ez diot maitasun aizkolkadarik emango gure zutabeari; ez gure hondamenerako. Ez gizarratoi handi horiek gure amodioz elika daitezen. Joan daitezela pikutara amodio errukior hori predikatzen duten erlijio guztiak, heuren predikadore eta guzti. Erein dezatela heuren hazia beste erresuman. Hemendik ez da zerurik ageri. Hemen ez du inork printzesa txuriekiko sinesmenik. Herensugearengan sinest dezakegu, agian, eta infernu lurtarrean ere sinest dezakegu, hor bizi garelako. Eta gizarratoitzar horiek, zerengan sinesten ote dute horiek? Ausaz heuren zeruren bat badutea horiek ere? Edo paraje hau bihurtu dute heuren zeru? Beharbada, heuren zeru honetara ez ohitzea da gure hutsegitea. Agian hor datza zakurraren aztala.

—Zaratots izugarriak entzun ditugu bart arrratsean; arrats edo gau modura taxutu dugun ilunaldian. Logela itxurako leku batzutara baztertu ginen etzan eta atsegin hartu nahiz. Halamoduzko etzauntza batzu aurkitu genituen, eta horietan etzan ginen bakarkako ausnarketari ekiteko. Etzan bezain laister zaratots bitxi batzu entzun nituen, eta ez ziren

nere belarrietatik urrundu loak sorgortu ninduen arte. Ormaren bestaldeko inguru guztietatik iristen ziren zaratots eta marruma enoiagarriak. Ormaren zirrikitoetatik guri so somatzen nituen begi arrotzak; begi arrotzak heuren begirada siniestroekin. Gordeago egin nintzen nere etzauntzan; estalkien azpian izkutuago. Baina ezin nuen ekidin zarata eta begirada madarikatu haien presentzia. Gela osoa betezen zuen gizarratoi itsusien usainak, usain likatsu eta itsaskorrak. Haien joan-etorrietako oinotsa etengabe somatzen da ormen bestekaldeko pasabideetan. Gu egoten edo ibiltzen garen leku guztiek dute izkutuko ibilbide hori; gorrela ematen du, bederen, albo ikustezinean somatzen den desfile madarikatuak. Gure loaldietako orduetan aragotzen da desfile edo ibilera horien zarata. Nekearen astunak menderatu ninduen etzauntzako estalkien artean. Eta arraots izukorrak, usain okaztagarriak, eta piztirik siniestroenen begiradak tartekatzen ziren mundu batetako eremuetara amildua kausitu nuen neure burua. Piztitzarrez inguratua nengoela nozitu nuen nere ametsean. Gizabererik itsusienek harrapatu egin nahi ninduten. Harrapatu egin nahi ninduten, eta, nik ez harrapatzera utzi nahi. Ihes nindoan gizotsoengandik, noraezean; ihes eta ihes norabait. Baina, ezin pauso ziurrik egin, eta ezin ihesi, eta gizotso itsusiak hurbiltzen, gero eta hurbilago. Desesperoan, aieneka eztarria urratu beharrean. Gizotso eta arratoi erraldoiak, heuren garraisi eta odolgoseaz, jarraitzen ninduten ihesbide ezezagunetatik. Nere indarrak ahultzen eta zurrupatzen zizkidan galduordeko ihesak, lokamutsaren etetzeak oreka itzuli zidan arte. Iratzarri naizenean alde guztietara so egin dut. Nere desegokitasunaren baregarri zatekeen zerbaiten bila nenbilen. Baina loaldiaren ondorengo ikuskizunak beti ez dira atseginak izaten. Pizu izugarriak zanpatu nau egoeraren jabe egin naizenean, eta lagunei begiratu diet, erreguz edo zorigaiztoko sopikun. Ni bezain artega ageri ziren lagunak, lozorroaren mantsotasuna galdurik. Eta, guztiok jaikirik, berriro pasabide luze baten joanaldia egin ondoren

harmaila batzukin topo egin dugu aurrez aurre; gorantz luzatzen ziren harmaila gorriztak, eta, haiei jarraiki, gorantz abiatu gara gu ere. Neure pausoen oharkabean nindoan; neure nereak begiak soilik banitu bezala. Pausoen bultzada, besoen higidura, burmuinen agindua erdibana eta soinaren dardara beste norbaitenak bailiran nenbilen. Nere gogoaren erdi-aginteak gelditzeko agintzen zien lohadar eta soinari, baina hauek aitzina zerraikioten nere izuarekiko sorgor. Harmailen burura iritsi garenean ikuskizun harrigarri batek astindu gaitu, gure begi ninien aztikeria zirudien ikuskizunak. Amaraun handiak zeuden bazterretan eta goitik zintzilik. Baina, amaraunez gain beste zerbait ere bazegoela zintzilik konturatu gara; bai, gizakien gorpuak zauden amaraunetan zintzilik. Amaraunez inguratuak, bilduak zeuden bere muga eta bazterrak ilunpetan galtzen zituen egoitza hartan; gizakiak zeuden, eulitxoak bailiran, armiarma saretan bilduak eta zintzilikatuak. Amaraunezko oihaltzarretan bilduak zeudenak, hezur eta azal izateraino xukatuak zeuden, euli hondakinak bezala higatu eta zimelduak. Baina beste gorpu batzu ere bazeuden gelatzar hartan, hil berriagoak ziruditenak. Hanka, beso edo soineko beste zenbait zati peituak zituzten helberri ziruditen hauek, eta lurrean zehar barreiatuak zeuden, amaraunetan bildu edo eskegi gabe. Etendako haragi zatiak ageri ziren han-hemen. Gorpu zurrunen artean aurrera jarraitu dugu, aho-sudurrak eskuz estaliz keru sarkorragatik edo garraisi urragarri baten ihesbidea ixtearren, alde guztietara sineskaitz soeginaz. Bazterretako ilunpeetan zalaparta bizkorrak somatu ditut, marmar ulerkaitzez nahastuak. Eta bapatean bururatu zait gizarratoiak han dabiltzala heuren betiko presentzia nardagarriaz. Zendu berrien aurpegietan lagunak ezagutu ditugu; lagunak ezagutu ditugu, eta, ixilik so egin diogu elkarri. Malkoak laprastatu dira lagun batzuen masailetan behera; indargabeziaren malkoak zatezkeen, ezinarenak. Isilunea ozenegi bihurtu da gure beila bitxiarekiko. Ormak garaiago jaiki dira, edo agian hondoa izan da sakonago

jaitsi dena une batez. Argi hilduratuak ez ditu itzal haindiak aienatzen. Gure begiok, berriz, ia ohituak zaizkigu ilunpeteara, gaueko betizuak bezala goaz; izkutuan nahiz beti eta beti agerian, gure zelatariekiko agerian. Agerian daude gure lagun hilotzak ere; bizia lapurtu diete lagunei. Eta agerian daude haien gorpu desitxuratuak. Mundu normal edo ohizkotik izkutuan gertaturikoak ez dira gertakizun mundu normal horretan murgiltzen direnentzat. Beste erresumarekiko izkutuan gertatzen dira hemengo gorabeherak. Agian nehorentzat ez dira gertakizun. Zernolako gertakizunak dira, izan ere, asimilazioaren esparruan eden ezin daitezkeenak? Nonbait urruti gertatzen den zerbait bezala dakusat geure inguru hurbilean agitua, orain agitua; gure lagun horiei agitua. Ezin sinetsirik, edo sinetsi nahi ezean, so egiten diot sarraskiari, eta ezin ausnartu dute nere burmuinek. Ia ilunpetan, gela zabaleko zola hotzean barreiatuak lagunen gorpu zurrunak. Amaraun-sare handietan zintzilik eulien hegalak bezala zimelduak beste gorpu batzu. Denak nahaspila izugarrian. Nola toles daiteke burumuinetan begien ikuskizun sarraskitsu hau? Basamortuaren erdian saiek eginiko txikizioa errukitsu eta txukuna iruditzen zait honen alderako; haiek hil ez baitute hiltzen. Baina gizarratoitzarrok hil ezezik gorpuen hiroa zurrupatu ere egiten dute. Eta orain uler dezaket gizarratoien etengabeko jagote eta begiratzea, eta kirioetaraino sartzen zait hotzikara leku makabro honetako jokoaz konturatzean.

Zazpi urte nuela aitari laguntzen nion, edo traba egiten, zelaian belar ebaten. Bedatseko larre oparoan, nonnahi agertzen ziren segak zapuzten zituen satitxu-kabiak. Artean begirik zabaldu gabeko sagukume biluziak txilioka hasten ziren, eta Tximista gure txakurrak egiten zituen haien kontuak. Ihesi joateko txikiegi, begirik zabaldu gabe, ilerik gabe biluzik, kabian uzkurrago egiten ziren eta Tximistak krausk, krausk, krausk, ahokadaka irensten zituen. Eta segak ia erdibiturik, bere hesteak arrastaka zeramatzan saguamak horzka egiten zion Tximistari muturrean, eta txilio ozenagoak egiten zituen sagukumeek baino. Baina txakurraren bahutzetan amaitzen zen piztitxo haien patua; denak irensten zituen banaka banaka. Krausk, Krausk egiten zuen Tximistak sagutxoen hezurñoak ahoan xehatzean. Krausk, krausk ahokada bakoitzean. Gero bere mihi luzeaz igurtziko zituen mutur eta ezpainak, eta isatsa tente tente zuela itzuli milzulika jarraituko zion. Nik ez nuen inoiz sagutxorik dastatu, eta ez dakit hezurño haien hausteak zer sentsazio sentiarazten zion Tximistari. Baina, Tximistak ere ez zuen jakingo, neuk ere ahantzia dut, satitsu haietako bat beirazko botoilan sartu eta kortxoz muturra itxi nionean senti nuena. Hankekin zapaldu ondoren isats puntatik heldu eta botoilan sartu nuen satitsu haietatik zorigaiztokoena. Eta nik desgraziatuago egin nuen.

Kortxoaz botoila muturra itxirik denboralditxo bat eduki ondoren urduri higitzen zen satitxua, muturra gorritu egiten zitzaion, eta gorantz luzatzen zuen. Bere gorpuzñoa dardarka hasten zitzaion, eta nik, harridura apur batez, begirik kendu gabe begiratzen nion sofrikario bizian zegoen piztitxoari. Tarteka kortxoa kentzen nuen botoilaren muturretik, eta orduan lasaitu egiten zela zirudien. Bere hatzapar txikiekin laprast eta laprast egiten zuen botoilaren kristal labainean, behin eta berrriro laprast. Beiraren labaintasuna gehiegia zen bere atzazkal txorrotx eta txikientzat, ezin zen botoilaren hondotik gora atera. Aztarka eta aztarka ziharduen betiko lekutik irten ezinik. Kortxoaz berriro botoila ixten nionean muturtxoa gorritzen zitzaion eta gorantz luzatzen zuen dardarka. Gorpuzño osoa ikaraz jartzen zitzaion hartzara kortxoa kentzen nion arte.

Ez dakit leku honek zernolako egitura duen kanpotik ikusita. Barrutik aldakorra da. Bai, aldakorra da, higikaitza bazirudien ere. Bere egitura ez behin behinekoa eta geldia. Galeria luzeetako ormak higitu egiten dira pasadizo berriak sortuaz eta moldatuaz, lehen dauden galeriak luzatu, laburtu eta elkargurutzatzen direlarik. Orma batzuk desagertzen eta berriak sortzen dira egitura ezberdinak sortuaz eta moldatuaz. Beirazko orma batzu agertu dira gure aurrean, erakusleiho erraldoiak bailiran azaldu zaizkigu. Baina beira itsuak dira, eta beira itsuen osteko aldeak iluntasun nabarra baizik ez zuen erakusten lehenengo. Argi more eta beilegiz jantzi da gero, tarteka lizunez tindatzen ziren beiradurak, eta haratagoko zerbaiten zertzeladak irazkindu dira ondoren. Gure bide amaiezinean jarraiki, beira gotor eta koloretsu horietako baten ostean gure ezagunen aurpegiak tartekatzen ikusi ditugu. Bapatean geldiarazi gaitu ustekabeko gertakizunak. Adeitsu irri egin digute beiretako itzal artean agertu diren aurpegiek; irrifar apalez so egin digute. Ahoa zabaldu eta ezpainak mugitu dituzte hitzegitean egiten den bezala; «ongi» esateko eran zabaldu dute ahoa, okotzarekin gora-behera bat eginaz ezpainak itxi gabe. Eskuekin eta besoekin keinuak eta imentzioak egin dizkigute, eta adierazpen berdintsuaz zerbait esan nahi izan diegu. Orma handi eta luzeko beira zatia tinta

labainkorrez estali eta desestali da kolore more eta beilegiak nahastuaz. Ortzeko lainoak bailiran irudi hauskorrak osatzen dira beiran, eta berehala desegiten dira berriro. Gizarratoien irudiak osatzen dira eta haiek utzitako tarteetatik bereizten ahal ditugu gure ezagun eta lagunminen aurpegietako zantzuak. Heuren eskuez hatzaparkatu dute beira eta heuren dehadarrez kolpatu. Baina beirak ez du eraginik nozitu, irmo iraun du bere gotortasunean. Baina irrifar lainoek beira ere zeharkatu egiten dute; gogoak hesia zeharkatzen duen bezala. Tindadura eta margo mugikorren zirrikituetatik gure ezagunen agur xaloa jaso dugu unetxo batez. Bestaldeko eskuak ikusi ditut, ahurrak beirari itsatsiak. Eta neuk ere esku ahurrak ipini ditut haien parean. Eta nahi izan dut bestaldeko ahuren beroa nereetan ukan. Nahi izan dut haien adorea nereetan sentitu, eta haien laztanak luzaro iraun dezan ere nahi izan dut. Eta neure gogoa guztiz laxotua kausitu dut unetxo batez. Sentimendurik gordeenak, hauskorrenak, babestuak aurkitu ditut. Unetxo batez pozik nengoela ohartu naiz, eta kirioetaraino hedatu zait lasaitasuna. Horrela egon gara, haien keinuetan erreparatuz, harreman desegoki bezain desigarrian; galeriotako egoerak desiragarri egiten baitu harremanik desegokiena ere. Irrika biziz so egin diegu lagunen iharduerari, beirak ilunduaz eta ilunduaz, kolore gero eta beltzagoaz, haien aurpegiak guztiz aienatu diren arteraino. Orduan gure ukabilez kolpatu ditugu beira itsuak. Ostikadaka eraso diogu ormatzarrari. Hatzaparrez urratu ditugu beirak eta beirako tindadurak, baina ez da berriro argi helduratu eta orma koloretsurik azaldu; ez gure lagunen aurpegirik tindaduraren hutsuneetan.

Gizarratoien irudiak nabarmenago egin dira beirako margoetan, eta haien kirats nazkagarri eta sarkorra izurri gaiztoa legez hedatu da gure ingurura. Usai okaztagarria gero eta handiago egin da. Oihu eta garraisika ekin diogu gure amorrazioan, baina bazterretan errebotaturiko geure ahotsaren oihartzun deslaia baizik ez da guregana itzuli. Dehadar oze-

nen ondorengo isiltasunak hotzikara eragin dit gorputzeko ileak zutik jarraraziz. Lagunen besotik helduaz ingurumenera begiratu dut, ezereza besterik ikustera iritsi gabe. Aska ezineko korapilo gotorra iruditu zait leku hau. Eta inoiz baino lotuago sentitu naiz korapilo horretan, erresuma ilun eta itzelean galdua. Beiraren bestekaldeko aurpegi ezagunen ikuskizuna galtzeak ondoren mikatza utzi digu, haien keinu abegitsuek sentsazio gozo-mikatzak sortarazten dituzte orain. Barnemuinen zatitxo bat galdu izan bagenu bezala, arantza zorrotza sartzen da bihotz ondoan. Haien keinu eta irrifar bakoitza errepikatu dugu oroimeneri galdetuaz orasteko ikuskizunak. Gure lagunen arpegiak beira tindatu batetan ikustea agian amets hutsa izan dela otu zait; geure desioaren indarrak erakarritako irudiak zatezkeen, ausaz: Edo toki honen beronen sorginkeria gaiztoren bat izan daiteke ere, gizarratoien erresumako beste jukutria zikinen bat.

Zalaparta itsusi baten arrahotsak iratzarri nau lo sakonetik. Edo, agian, konorte eta zentzu guztien hildurapen soil bat zatekeen nere loa. Alboko laguna hizkera narratsez mintzo zen; osotasunik gabeko hitz jarioz. Ormez bestekaldeko alboetan somatu ditudan hatzaparka eta liskar zantzu bortitzek susmo gaiztoa sortarazi didate. Lagunari heldu diot besotik, bere lokamutsetik iratzar dadin, baina bere hartan jarraitu dio ner jokaerari jaramonik egin gabe. Berriro heldu diot, gogorrago heldu, eta astindu ere egin dut iratzar dadin aginduz boz goraz. Orduan zehazkiago hitzegiten hasi da. Gela murritz honetako ohantze txiroegian laguna izerditan dagoela ikusi dut nire begi esnatu berriak argi hilduratura laketu direnean. Besotik oratu nau lagunak, bere hatzaparrak min emateraino hertsiaz. Beldur dela esan du, izuikaraz; beldur dela azken hatsa zurrupatzen ez ote zaizkion ari. «Gizarratoi horiek», jarraitu dio, «batzutan... batzutan izuarazten niautek gizarratoi handi horiek. Ohartu al haiz borien begiradaz? Indar handia diate halakret urdinabarxe hori jazten dutelarik. Eta suzko geziak, gorrotoz pozoinduak ihaurtikitzen dizkiate. Baina taldean babesten dituk, konturatu haiz? Bai, horretaz profitatzen dituk, konturatu nauk; taldeak ematen zietek indarra. Bitxi duk; banaka daudenean ihes egiten diate, edo lagun gehiago erakarri, horretan diate indarra. Horre-

taz baliatu dituk ni bakarrik hatzeman nautenean ere. Hor alboan bertan hengoen hi, baina ezin hindudan deitu. Nire oihu eta garraisiak ez dituk hiregana oso berandu arte iritsi. Izorratu niautek. Bai, izorratu niautek gizarratoi madarikatu horiek. Hi eta besteak lo zeundetela etorri zaizkidak. Nire oihu gordinak haien hats zikinak ito eta isildu dizkik. Heuren mihi luze nazkagarriez miaztu niautek, eta heuren hatzapar luzeez urratu. Lerdea zerieten. Gorputz osoa miazkatu eta hatzaparrez urratu zidaate, baina burua batezere; behin eta berriz urratu zidaate burua, burmuinak zurrupatu nahi izan balizkidaten bezala. Nere hatsa irentsi diate, eta nere arnasbotatze bakoitzean haien begietako leinurua biziago egiten huen. Haien hatzaparrek gero eta bortizkiago lotzen ziaten nere gorputza. Ez duka ulertzen? Ez du sinesten, edo ez duka sinestu nahi? Ez haiz oraino egoeraren jabe egin. Gogoratzen dituk, ez diakiat noiz, aspalditxo nolanahi ere, gela handi eta makabro hartan ikusi genituen gorpuak? Urratsez urrats, korapiloz korapilo osatzen duk lokarri itsusi hau. Gela haran amaraunez bilduak momia itxuran ziaudean gorpu batzu, gorpu zaharkituak. Beste batzu, berriago ziren itxurakoak, oso higatuak ziaudean, lohadarrak etenak eta odol arrastoak han-hemenka barreiatuak. Sarraski urragarri hura gogoratzen duk?»....Eta une batez isildu egin da laguna, nekeak isilarazia. Bekokia lehortu diot zapi batez, eta bere esku urduria estutu nereen artean. Lasaitzeko agindu diot, lasaitzeko ahal badu. Ez dioedala oso ongi ulertzen esan nahi didana, baina, ongi ohartu naizela, dagoeneko, gizarratoitzarren izateaz eta heuren jokoaz. Haien begirada zorrotza dela baina badagoela atzerarazten dituen zerbait. Ez direla ikusaldi batetara dirudien bezain ausartak. Gainera, ni bere ondoan nagoela, eta ez zaizkigula hurbilduko. Zorigaiztoz nere hitzek ez dute laguna baretzerik lortu. Gizarratoitzarren jaki garela esan dit; ez dela gure gorpuen haragia haien jaki izan daitekeelako, gure bizitzatik eta gure izatetik zurrupatuak bizi direlako eta idartzen direlako baizik. Gure indarrak eta

ausardiak atzeratzen eta geldiarazten baditu ere, suspertu eta biziarazten dituela era berean. Hortantxe datzala, hain zuzen, leku madarikatu honen eta bertoko jagole diren gizarratoien izatearen funtsa. Ea ez al dudan konprenitzen guztiaren zabaltasun korapilatsua. Oso aisa uler daitekeela behar beharrezkoa den urruntasun nimiño batetatik soeginaz gero. Adibiderik arloteenera jota ere, irudikatzeko, itsasuntzi bat esate baterako. Ekaitz izugarri batean kaiaren ertzari kate lodiz lotuta dagoen untzi desesperatua irudikatzeko; laino beltz handiz estaliriko ortzetik eguzkiaren izpirik iragaiten ez delarik, eguraldi belztua, haize zazkarrak harrapatzen dituen hosto, paper edo gainontzekoak haruntz-honunzka darabilzkiela, sekulako garai eta itxusiak, itsaso zabaletik etorriak, untzia kaiaren kontra kolpatzen dutela. Untziari zer gerta dakiokeela uste ote dudan? Imaginatzeko untziaren zurajearen aieneak uhintzarrek kai ari aitzi kolparazten dutenean. Eta kate loditik aska ezinez eginiko ekitaldien ondorengo ezina eta etsipena ere kontutan hartzeko. Halere, horregatik ezin etsi dezakeela untziak; behin etsiz gero, eta amor ematen badu, bertan xehatu eta ezereztuko dela, ezbairik gabe, zuraje osoa. Askatuz gero, oster, itsaso zabalera ihes egiteko aukera, aukera ttipia bada ere, izango duela bederen. Eta, hori baino garratzago dena, agian simpleago izan arren, adibide argiagoa izan daitekeela amaraunean atzipeturiko euliarena; kontutan hartzeko, behin eulia amaraunean eroriz gero, zalaparta eta indar handienak eginaz ihes egiten saiatzeak emango diola askatzeko aukera eta posibilidade bakarra. Baina ez ahazteko, eta honetan datzala izorramena, ez ahazteko euliaren senperren eta zalapartek amaraunean eragiten duten higidurak berak erakartzen duela armiarma. Beraz, euliak berak erakartzen duela berarentzako borreroa; bere galera, hain zuen. Ea kinka gaizto eta berebiziko horrekiko gogoetarik egin al dudan? Zer egingo ote nukeen neronek euliaren azal mehean gertatuz gero? Bestalde, euliak ez dakiela zer datorkion eta nik

ere ez nukeela jakingo beraren azalean banengoke. Halere, geldi geldi iraun edo amaraunatik askatzeko saiakerarik bizienak joko ote nituzkeen? Egoera gordina dela, galduordekoa. Berak ere ez duela asmatzen kinka horretan jarrera egokiena zein izango zatekeen. Baina inoiz ez duela ikusi amaraunean katibatu eta geldi geratu den eulirik. Ez dakiela xedera horietatik askatzen diren eulien portzeintaiarik ere. Apika, armiarmak bera dagoen tokitik eulia zalapartaka ari den lekuraino joateko behar duen denbora horretantxe datzala hauziaren ardatza; denbora horretan askatasuna lortzea edo inoiz ez lortzea litzatekeela, hain zuzen, kinka larri horretako ekitaldiak eskainiko lukeen erabakia. Eta, baietz esan diot, ulertzen diodala, baina ez dela egoera bera. Gu ez garela eulitxo hegal-mehe batzu. Eta gainera ez gaudela armiarmasare batetan hatzemanak, bakanka ere ez gabiltzala; elkarren beroa eta abaroa badugula lagunon artean. Ez duela hain desesperatuki taxutu behar arazoa eta egoera. Baina, nere ihardespenari aurpegia zimurtu dio, eta besoa altxa du lagunak, isilik egoteko esanaz bezala. Ez uste izateko, esan dik, ez uste izateko amarauneko euliaren eta gure egoeraren artean hain ezberdintasun handia dagoenik; pertsonaia ezberdinak izanik ere, egoera, dimentsioa lekat, bertsua dela. Armiarma amaraunean bezala ibiltzen direla egoitza edo leku guzti honetan zehar gizarratoiak. Pausoz pauso, txokorik txoko, bazterrik gordeena ere ezagutzen dutela toki madarikatu honetan. Leku hau hiri edo uharte bat, edo untzi urperatu bat baldin bada ere, beronen parte eta zati, osakin direla gizarratoiak; beronen eragile eta biziemaile direla; sua laberako bezala. Eta ongi konprenitu behar dudala, batezere, leku honek, ibilbide guzti hauek gizarratoiekin batera osatzen duten izakiaren orokortasuna; izaki biziduna dela orohar. Eta osotasun urragarri horren euskarri eta berme geu garela, hain zuzen. Baietz, geu garela munstro honen elikagai eta izateko arrazoi ere. Geuk iraunarazten diogula bizirik munstroari. Orain gu garela pasabide hauetan, galeria luzeegi

hauetara jaurtikiak, edo txango madarikatura behartuak, baina gure aurretik beste hainbat eta hainbat iraganak direla hemendik, batzu irteeraino iristeko zoririk ezagutu ez dutenak gainera. Eta bestaldeko argitaraino iritsi direnak beste batzu. Orain gu gaudela eta gure ondoren beste batzu etorriko direla munstroak bizirik jarraitzen badu edo bizirik jarraitzekoan. Inor gabe gelditiuz gero, erabat husten bada, bertan behera zimurtu eta desegingo dela munstroa, eguzkiak jotako barea bezala. Husturak berak ezabatuko lukeela, bere gizarratoiak barne. «Gure hatsa arnasten diate gizarratoitzarrok», jarraitu dio lagunak. «Baina ez duk hori bakarrik; konturatu haiz denbora guztian eta alde guztietatik so ditugula piztitzar horiek? Bai, batzutan guk ikusi ezin ez arren hor diaudek beti; ormatzar hauen atzetik, guk bestaldea ikusi ezin dugun tokitik ere ikusten giaituztek haiek. Eta, hoiekin batera izaina higikor bilakatzen dituk pasadizo luzeotako ormak. Odola, hatsa, izerdia, oldozmena eta gogoetak xurgatzen zizkigutek bai gizarratoiek eta bai ormek. Bai, horixe duk; izaina izagarri bat duk leku guzti hau. Nolatan ez nauk orain arte konturatu! Izan ere, munstroak ez dik bere aurpegia ezagutzera ematen; imagina desitxuratua baino ez dik erakusten. Batzutan ustekabean ohartzen haiz gauzetaz, besteetan, berriz, ahalegin guztiak eginda ere ezin duk ezer deszifratu. Argi diakusaat orain; izaina erraldoi, oso erraldoi baten bentosa eta hesteak baino ez dituk galeria izugarri hauek. Eta gizarratoiak izainaren burmuinak dituk. Galeriak gurutzatuaz, batzu luzatu eta besteak laburtu egiten dituk, edo ate egitura duten tarteak hersten irekitzen. Tindaduraz marrazten diren beiradurak ere agertzen dituk. Eta ez diakiagu zenbat misterio gehiago ezkutatzen duen leku honek. Baina begibistan diagok gizarratoi nardagarri horiek direla katramila guzti honen burmuin; izaina handi eta zurrupari honen burmuin. Izaina madarikatua! Beste gela itsusi hartako sarraskian ikusi genizkian gorpu zatitu eta odol hondakin haiek bururatzen zaizkidak orain; gorpuak zatitua, apurtuta ziaude-

an, baina ez janak. Gogoratzen haiza? Ez ziaudean janak; apurtuak, txikituak soilik. Aisa uler daitekek ez dutela haragirik jaten. Lehen ez ninduan horretaz ohartu. Xurgatu egiten dik izainak, guztia xurgatu: odola, hatsa, bizia....eta xurgatzekoak amaitzen zaizkionean, amorruz, puskatu egiten dik gelditzen dena, gorpua alegia. Ormatzarrok gotorrago egiten dituk guri zurrupaturiko biziarekin; gure biziaz elikatzen duk izaina, gure izatearen funtsaz. Eta ormatzarron gotortasunetik asetzen dituk gizxarratoiok. Hori duk zikloaren itzuli osoa. Etenezinezko lotura hartzen dik guztiak, gu barne garelarik; gugan bermatzen duk, izan ere, beste guztia. Nolatan naitekean hain inozo? Oraintxea arte ez nauk jabetu leku honen bizitasunaz; orobat bere osotasunean duen bizitasunaz». Berriro isilik gelditu da laguna, eta ni ere bere hitzen hausnarketa mikatzean nago, beren esannahiari nondik heldurik aurkitzen ez diodalarik. Orain are gorrotagarriago iruditzen zait leku hau; gu zurrupatuaz eta higatuaz hanpatzen eta indartzen den izaina baita leku hau. Gure bizia edanaz gotortzen eta hazten dira laberinto honen ormak; gure adorea eta itxaropena ohostuaz eta zurrupatuaz indartzen da bere oldarkortasuna. Eta gogo guztien gainetik eraikitzen zait leku honekiko gorrotoa. Baina, haizeak noraezean daraman orbelaren gisan, pausalekurik aurki ezinik doa nere otina; bere handitasunagatik abstraktoaren egitura hartzen du nere gorroto horren ituak. Halere, jomuga badu izan, jomuga jakina. Badu arrazoi eta euskarri sendo bat, bestela sortu ere ez litzateke sortuko. Sentimendurik ez liteke sor, ezin izan liteke, izateko edo sortzeko arrazoirik ez baldin bada aurretik. Gorrotoaren sentimendua sentitzeko gorrotagarri den zerbait izan behar derrigorrez; maitasuna sentitzeko maitagarri, gure sentimenduekiko maitagarri, den zerbait edo norbait izan behar duen bezala. Gorrotagarri den ezer ez den bitartean ez da gorrotorik izango. Beraz, leku honek beronek sorreratzen eta eragiten dit sentimendu hori ere. Ondorio arrazoizkotzat, zuzentzat, jo daiteke, bada, gorrotoa indar osoz

sentitzea. Azalpen edo zio gizatiarrenez ere ezin liteke alderantzizko jarrerarik indar moralez defenda. Neure, geure, defentsa eta abaroa, geure babesa ukatzea litzateke gorrotoaren indarra baztertzea. Gure defentsarako irradiazio ingurunea deuseztea litzateke. Ez baitugu gorrotatzen horretan plazer sentitzen dugulako, behar beharrezko zaigulako baizik. Agian beste izen batez dei dakioke sentimendu horri, baina hemen izenek eta deiturek ez dute oso garrantzi ahul bat besterik. Hemen iraupenak eta erantzunak, jarraipenak hartzen du berebiziko garrantzia, eta galeria urragarri hauen bestekalderaino iritxi behar dugu. Eta horretan goaz satortxoak lurpeko ilunpetan bezala, itsu; senari edo itxaropenari jarraiki. Eta bidean edireniko traba edo eragozpenei aurre egin beharko diegu; beste gela madarikatu hartakoak bezala amaitu nahi ez badugu gure txangoa. Eta, argitara guztiok iristen bagara izaina erraldoia bertan behera zimurtuko da.

Hirizaindarien buruak hiriaren nagusiaren bulegoko atea jo zuen, eta barrura sartu zen erantzunari itxoin gabe. Bultzada batez hertsi egin zuen atea bere atzean, eta egunon esan zion hiriaren nagusiari. Hau ez da zuzenbidea esan zion gero. Nor zara zu galdetu zion hiriaren nagusiak, eta, ni hirizaindarien burua naiz, heuren ordezko natorrena, erantzun zion azkenik hirizaindarien buruak. Hiriaren nagusiak sudur puntatik gorantz bultzatu zituen betaurrekoak eta, zer nahi duzu nigandik, edo zeren bila zatoz hona, galdetu zion. Hau onartezina da, erantzun zion berriro hirizaindarien buruak, galderari zegokion ihardespena edo lelo errepikakor soil bat ote zen antzemateko aina matizatu gabe. Baina, hau ez da martxa, esan zuen ondoren, eta hirizain guztion arteko batzar nagusi bat egin ondoren natorkizu, erantsi zion segidan, erantzuna benetan berea izan zitekeen itxura emanaz ahotsari. Gure batzarrean jaso diren kexa eta erabaki apelaezinak zuri jakineraztera igortzen naute, jarraitu zion imentzio handiz eta ahotsari formalitate doinua emanaz, hiriaren nagusiari begirik kendu ere egin gabe beti. Dakizun bezala, oso sakonki jakin ez arren, itsasoa urez betea zegoen gaur goizean, eta gu hirizaindariak gara. Bestalde, guri ez zaigu axola kazkabarra ala euria egiten duen; guri, hirizaindariak garenez, hiriko zuzenbidea eta modu onak zaizkigu axola, horren ardura du-

gu. Gure bizkar dago aginduak beteareztearen erantzunkizuna. Hiriko jendea gero eta lotsagalduago bihurtzen ari da, gero eta asmo gehiago dute, eskakizunik ausartenak egiten dituzte lotsaren izpirik gabe. Ez dakit hau non buka daitekeen ere honela jarraitzen utziz gero. Ez dakit zer demontre uste duten mukitzu horiek. Gauzak diren bezala emango dizkizut aditzera, horretarako etorri naiz eta. Bidali egin naute hobeki esateko; batzar nagusiak eta egoeraren larritasunak bidali naute. Urrunagora joan gabe oraindik oso hurbil dauden egunotan gure artean gertatzen ari dena esango dizut, abiapuntu eta oinarritzat har dezazun eta txantxetako kontua ez dela kontura zaitezen. Hasi aurretik esango dizut, halere, badaitekeela dinosauroen desagerpenarekiko azken teorizazioak zuzenak izatea, ni ez bait nago moeta horietako katramila eta eztabaidetan iharduteko baldintzetan, ezta astirik ere ez duk gainera. Baina horrek ezin alda dezake hiriko atesareen errorik. Gauzak horrela dira eta kitto. Hiriko jendeak ez ditu legeak eta arauak gogo onez bete nahi. Jaramonik ere ez digute egiten sarritan; udazkeneko usapalen hegaldiei edo antzarei so gelditzen dira gu hitzegiten edo aginduak ematen ari gatzaizkienean, eta, maizenik, ezentzun egiten diete gure agindu horiei. Begirune gaiztoz soeginaz gainera. Guztiak heuren lekuetan daudenentz jakiteko zenbatzen ari garenean ere lotsagabeki jarraitzen dute beraien zeregin edo denborapasan. Gu batere ez bagina bezala ibiltzen dira, edo areago, hain zuzen geu hor garelako daramate jokamolde hori, erdeinurik sakonena erakustsiaz. Badiruri inolako begirunerik ere ez digutela engoitik. Egoera tamalgarri hau zuzentzeko eta berbideratzeko indarkeriara jo behar izaten dugu gehienetan, bestela ez baitago ezer egiterik. Eta neuri horiek erabiltzen hasi ginenean konponbidea aurkitu geniola pentsatu genuen, baina ez da horrela gertatu; gure neurrien aurka altxatzen eta matxinatzen baita hiriko jendea. Ez dute gogo onez onartzen zigor ezartzen eta indarkeriarik, zuzenbidea ezartzeko behar beharrezko dituztela uste dute. Balizko

eskubide horiei atxikitzen zaizkie gure irakasbideak salatzeko, justiziari eta giza eskubideei heltzen diete arrazoi zuzena heurena balitz bezala. Eta, okerrena dena, gure zigorraldietan oihuka hasten dira, zarata ateratzen dute, eta gaizkiesaka ere hasi izan zaizkigu inoiz. Jipoi ditzagun ez dute nahi izaten. Jipoirik handienak emanda ere, ezin zuzendu daitezke horiek; badirudi horrexek indartzen dituela, hain zuzen. Errebelamendu horrek ezin dezake horrela jarraitu; nola edo hala amaiera ezarri behar zaio gehiegikeria eta desmadre horri. Eta honela isildu zen hirizaindarien burua. Lehenxeago lehertzear hanpatua zirudien ahotsa erabat hustua gelditu zen. Hiriaren nagusiaren bulegoko marrazki eta argazkiei begira gelditu zen une batez hirizaindarien burua. Oreikiz eta ardo botoilaz atonduriko mahaiak ageri ziren koadroetan. Behialako tripontzien aztarnak zatezkeen, haunditasunaren irudi gisa hiriaren nagusiari bezuzatuak. Ormetan irmoki eskegiak zeuden koadroak, eta hiriaren nagusia ere irmoki zegoen bulegoko mahaiaren osteko aldean eseria. Zer demontre egitea nahi zuen galdegin zion hirizaindaien buruari, arazoa nola konpon ote zitekeen, irtenbide itxurako zerbaiten arrastorik ere ba al zuen gutxienez, ehundaka hirizaindari zirela eta ea zer alukeria gertatzen ote zen hauzia hain larria izateko, hirizaindari guztiak lerdoak al ziren edo zer, ea nola zitekeen baliabide guztiak eta era guztietakoak heuren esku eduki eta hala ere zuzenbiderik ezarri ezin izatea, jendea errebelatzen baldin bazen hirizaindarien ahuleziarengatik izango zela segurrik. Eta, ezetz erantzun zion hirizaindarien buruak, etzela heuren errua eta gutxiagorik ere, beste gauza batzuren artean hiriaren egiturak berak ere bazuela akatsik, hiria inguratzen zuen harresia ez zela aski gotorra eta hertsia, haizea eta eguzkia igarotzen zirela harresi ahul haren zirrikitoetatik, eta horrek berebiziko eragina zuela jendearengan, eta horixe zela, bere ustez, endredo gehienen iturri, harresiak gorago jaso behar zirela eta gotorrago egin, horrek lortuko zuela jendearengan guztiz premiazkoa zen etsipen kutsua, ez

zela komeni eguzkiaren printzarik eta haizearen zertzeladarik harresian barrukaldera igarotzerik, bezperan baren zatekeen eguratsa berritu eta aztoratu egingo zukeela eta egin ere egiten zuela horrek, kriston eragina zuela horrek jendearen baitan, hortik sortzen zirela iskanbila asko, kale erzetan ere zuhaixka eta loreak ernetzen zirela udaberrioro eta horrelakorik ez zela onartu behar inola ere, eguzkiari marmitakada bat ur bota behar zitzaiola gehiago berotu ez dezan. Txori edo hegaztiak oro uxatu behar zirela haien txorrotxien oihartzuna betirako ahantz dezan jendeak; tiroka eraso beharko zitzaiela bestela ezinean, baina uxatu egin behar zirela, ortzea ere xuriz margotu behar zela, eta, itsasbazterrean lehertzean uhinek egiten duten zarata isilaraztea ezinbestekoa zela. Horrelako zera guztiak zirela onarezinak. Eta neurri guzti hauek ezarriz gero berriro zuzenbidea izango zela hirian, ez zuela zalantzaren izpirik ere.

Hemengo denbora oroimenak neurtzen duen kontzeptu zehazgabea dela iruditzen zait orain; gero eta tinkoago gorpuzten zait irudipen hau. Gertakizun eta gogoetak bilduaz eta tolestuaz, oroimenean biltzen direnean sortzen da hemengo denboraren neurria. Berez hutsa den denborak, gertakizun edo gogoetarik ez duen denborak ez du gorputzik. Betegarririk ez duenean nekez uler daiteke denbora denik ere. Oroimenak jasotzen ez duena ezereza da nolabait; hutsala da; fuit! desagertzen da eta kito, ez da kontutan hartzeko denbora bezala esistitzen. Gogoetak eta gertakizunak oroimenean biltzen direnean sortzen da denboraren kontzeptu ulergarria, ukigarria. Gertakizunik edo gogoetarik ez dagoenean ez dago haintzakotzat hartuko den denborarik; ahanzturan galdua gelditzen da oroimenean gordea ez dena, ahanzturan lurruntzen da. Inolako aztarrenik utzi gabe galtzen dira, aienatzen dira, haintzakotzat hartzen ez ditugun gertakizun eta haien denborak. Eta leku honetako denbora da, batezere, oroimeneko denbora. Izainaren erraietatik kanpoko denbora ezin daiteke, inola ere, barneko honekin konpara edo neurtu; neurri ezberdinak dituzte guztiz. Ez dakit, beraz, kanpoko neurriaren zenbat denbora igaro den ahotzarrean honat barnearatu ginenetik orain arte. Egun ugari igaro dira edozelan ere. Egunak ezezik hilabeteak eta urteak ere igaro

ditugu, segurki, izainaren erraietan; galeria eta igarobide luze hauetan, tunel ilun korapilatsu eta hits hauetan. Noraezean maiz, aurrera egin beharrean beti, denbora luzea daramagu, engoitik, laberinto gisako galeriotan zeharreko txangoan. Gainera hemengo denbora ez da egun eta gauez zatikatzen kanpoan gertatzen den bezala. Ez du gauak eguraren luzea etetzen. Ez dute gau moreek egun astunik arintzen, etenik gabea da hemengo denbora; jarraipen amaigabea du. Orainari oraina gehitzen zaio, eta ondoren beste oraina dator, eta jarraian beste oraina, eta ondorengoa. Eta orain guztiak pilatzen doaz; pilatuaz eta tolestuaz doaz denboraren zentzua gorpuztuaz eta nabarmen eginaz. Orainaren ondoren beste orainak jarraitzen dio, tartean hutsunerik laga gabe. Igarotzen doazen bezala oroimenean pilatzen dira, gaztelu fermua osatuaz bezala, lokarri luze baten antzera hartzen dute gorputz, denboraren mataza loditzeko. Lokarria etetzea denbora bere etetzea litzateke, eta ezina da denbora etetzea. Ezinbestekoa zaigu denboraren hariari jarraitzea, eta hari horrek etenik balu galduak geundeke; jarraipenik gabe geundeke. Bizitzari berari hertsiki lotua daramagu denbora; kide baino areago, biak bat baitira. Argiak bezala denborak ere beste dimentsio bat hartzen duen erresuma honetan galga ezberdinez neurtzen da guztia. Izainaren erraietako erresuma honetan goaz bidaiatzen, baina, eta erresumak berak bagaramatza ere, geu ere bagoaz geure txangoan. Izainaren txangoaren barnean eta beraren kontra daramagu gure bidaia hau; denboran zehar bizitzaren txangoan. Eta bizitzak txango bakar bat du; bizitzaren zati bat inbertitzen dugu txango honetan; bizitzaren zati hori ez da beste inon agertua izango. Txango honetan irarria geldituko da gutako bakoitzaren bizitzako zati bat. Arnasaldi bakoitzak, hatsaldi bakoitzak irarriko du oroimeneko denboran, eta galeria luze hauetako ormetan ere irarria geldituko da, izainaren erraietan zizelkatua geldituko da gure bizitzaren zati bat. Eta gizarratoien begietako leinuruan ere isladatua geldituko da, gela guzti hauetako egura-

tsak ere atxikiko du gure arnasaldi bakoitzaren kerua. Denboran zehar gure bizitzaren haria utziko dugu. Eta, orainak eta orainak eta orain pilatuak eta tolestuak ez dute egutegietan data jakinik izango; oroimenean bakarrik izango dute datarekiko kokapen zehatza. Bidaia honetako orain guztien urratsak joango dira oroimenean pilatzen, pilatzen eta pilatzen aurrerantz goazen arabera. Orain bakoitzeko gertakizun edo gogoeten islada oroimenean jasoaz goaz. Orain datorkit gogora erresuma honetara barneratu gineneko une hura. Bizitzaren joaneko bidegurutze batean indar erraldoi batek bultza gintuen; osineko urzurrunbiloaren gisara zurrupatu gintuen eta irentsi izainaren ahotzarrak. Eta orduan abiatu zen galeria hauetan barna, tunel ilunetan zehar, gela hits eta zeharbide hobielotan aurrera, gure bizitzaren txangoa. Lehen unean, hasiera hasieran ulertu nuen aurrera jo behar genuela beti; ezin genezakeela atzerakadarik egin. Geroztik ez zaigu atzerakadarik egiterik otu ere, eta ez dugu atzerakadarik egin. Galeria eta igarobide ezezagunetan, gela ilunetan...beti aurrera jo dugu. Dagoeneko urrutixe gelditua da txango honetako lehen urratsa; urrun gelditu dira sarrerako ormetako marrazki narrats haiek. Geroztik urrats anitz egin dugu; bataren ondoren bestea, eta besteari beste bat jarraiki. Oraina eta beste oraina, eta ondorengo orain guztiak joan dira, bakoitza bere gertakizun edo gogoetarekin, oroimenean pilatzen. Baina, guzti honekin ere, nola adieraz dezaket denbora nola neurtzen den? Nola esan izainaren erraietako denborak zer neurri duen? Guztiz bi dira, guztiz ezberdinak, hemengoa eta hemengoa ez den denboraren dementsioak. Oroimenak, gogoak eta sentimenduak dira bi dimentsioen eta bi erresumen arteko lokarri; ez dute konparatzeko euskarririk ere. Ni hemen bizi naiz, nere lagunak hemen bizi dira. Hemen bizi gara; izainaren erraietan gaude, galeria eta laberinto antzeko tunel zikin hauetan, egurats likatsu eta itsakorrean murgilduak. Hemen bizi gara eta aurrera jotzen dugu, tunelaren bestekaldera jotzen dugu, gerora iritsi behar dugulako. Behar

beharrezkoa zaigu bestealdera heltzea; txangoaren amaierara heldu behar dugu derrigorrez. Txangoaren amaieraraino iristen ez direnak galduak dira, bere erraietan hilduratuak, izaiaren bizigarri izango dira. Orain bakoitzaren eta orain guztien gertakizunak eta liskarrak gainditu behar ditugu. Gainditu eta aurrera jo behar dugu, denborari etendurarik kausitu gabe. Denbora luzea pilatuko dugu oroimenean; egunak eta egunak, hilabeteak eta urteak igaroko dira beste erresumako dimentsioaren neurrietan. Gure txangoaren amaieran bi dimentsioek bat egingo dute, izainaren erraietatik irtenaz tunelaren bokalera iristen garenean.

Bederatzi munduetako jainkoak hamargarrenera bildu ziren, eta, biltzar gorena egin ondoren, erabaki zuhurrak hartu zituzten. Plangintza orokorra egin zuten, zehatza eta argia, justizian eta legeetan oinarritua, demokratikoa eta zabala; azken biztanlearenganaino hedatua, salbuespenik gabea, salbuespenak salbu. Bederatzi munduetara dei egin zuten, eta deiari erantzunaz hamargarrenera bildu zitzaizkien erresuma guztietako erregeak, jauregi guztietako jaunak, armadetako buruak, poliziaren karguak, erligioaren arduradunak eta arduradunegiak, politikari ohoretsuak, ohorearen gainetik dauden politikariak, diruaren ugazabak eta beste. Goreneko mailara eraiki zuten batzarraren garrantzia, bozkario handiz ospatu zuten guztien elkarrikustea. Oparoki jan eta edan zuten, algara ozenez farra eginaz, zetaz jantziriko zertzari nerabeak zilarrezko ontziekin haruntz eta honuntz zebiltzan bitartean. Batzar nagusi bat ere egin zuten, eta erabaki nagusiago bat hartu ororen gainetik: orduandik aitzina bi taldetan banatuko ziren gizaki guztiak; batzar nagusian zeudenak Heurak izango ziren betirako. Eta deituak izan ez zirelako han ez ziren guztiak Ez-Heurak. Hitzarmenik sakratuenaren izenean, beraz, Heurak eta Ez-Heurak-en artean banatuak gelditzen ziren gizakiak oro, betirako. Orduan bederatzi munduetako jainkoak dominus vobiscum esan zie-

ten guztiei, eta batzarreko bakoitza bere mundura itzuli zen. Eta, ordutik datorkio gure auzokoari daraman kalbarioa. Gure auzokoa ere, gu eta bete askotxo bezala, ez zen batzarrera deitua izan, ezta gutxiagorik ere. Eta, beraz, Ez-Heuren artean sailkatua da. Bere aitonak lan egin behar izan zuen bizkarra makurtuta, lan egin behar izan zuen bizkarra uztaia bezala okertua zeukalarik ere, eta amonari ere berdin gertatu zitzaion haur multzo batez erdi ondoren. Aitak ere hilburuko laburra aurkitu zuen aiton-amonen hilobian, eta lan egitea beste irtenbiderik ez zuen izan mahaian gainezka biltzen zen mainadari ogia ahoratzeko; lan eta lan, eta beti lan bizkar hezurra uztaia bezala okertu eta hilobian atseden hartu zuen arte. Aurrekoak hil zitzaizkionean emazte eta etxe bete haurrekin gelditu zen gure auzokoa. Haurrak eskolara eraman edo bidali behar izan zituen; batzu fraideengana eraman zituzten, neskak monjetara, beste batzu herriko eskolara joan ziren. Batzu etxera etortzen zitzaizkien egunero, masailak gorrituta etortzen ziren maisuak jo egin zituela eta. Fraide eta mojekin zeudenak bisitatzera joaten ziren noizbehinka, eta irrifarrezka eta kontu ugarirekin agurtzen zituzten semealabek. Gero, bixitaldia bukaturik agurtzera zihoazenean, negar malko haundiak ixurtzen zituzten haurrek, gurasoen bihotzetan inpotentzia eta desolazioa ereinaz. Haurren eskolak ordaintzeko sekulako diru pila bota behar izaten zuten hilero. Beti iritxi ezinik, bururik altxa gabe lan egiten zuten aitaamei eta aiton-amonei ikasia legez. Herriko apaizak hamarrenak eskatzen zizkien, eta funtzionariak etortzen zitzaizkien Heurak erabakiriko inpuesto edo zergak kobratzera. Paper asko iristen zitzaien gure auzokoei honena hainbeste, beste horrena beste horrenbeste eta haruntzagoko beste harena beste ez dakit zenbat zor zutela aditzera emanaz. Ahal zuten eran ordaintzen zituzten guztiak eta lanean jarraitzen zuten burua makurtuta. Emazteak adabakiak eransten zizkien galtza edo ator puskatuei, eta artilezko galtzerdiak egiten zituen. Merke ordaintzen zieten eguneroko lana, eta arte-

an umilago izan behar zutela agintzen zien erligio zainduak. Pekatari deitzen zien apaizak pulpitotik; bigilia eta barauak gordetzeko agintzen zien, masail batetan zafratzen bazituzten bestea eskaintzeko, eskaleari ogia eta erremusina emateko, eta txiroak zorionekoak zirela esaten zien. Eta horrela jotzen zuten aurrera, ahal zuten bezala. Seme-alabak hazi eta handitu zitzaizkien poliki poliki; batzu fraide edo moja gelditu ziren, nolabaiteko irtenbidea huraxe zatekeela igarriaz, agian. Beste batzu han-hemen lanean edo zerbitzari hasi ziren lehenengo xos fresko batzu inguratuaz, beste bakarren batek eskolan jarraitu zuen artean. Geroago, soldatuzka egitera joan behar izan zuten zaharrenetik hasita. Denbora guzti horretan zenbait aberatsen seme-alabak hor ikusten zituen txitxi baino dotoreago, lanik egin beharrik gabe elkarri besotik helduta, txakur txikiekin edo zaldi gainean osteratzen. Politikariak promes handi eta ugariak egiten zituzten, baina promes horien ondoriorik ez zen beraienganaino heltzen. Zeru loriosa agintzen zien erligioak, baina ez zekusaten mundu honetako infernua baizik. Seme-alabek elizara joateari utzi zioten eta gurasoak, etsi etsian, ez zieten purrustadarik botatzen engoitik. Gazteak zerbaitetaz hitzegiten ari zirenean, eta gogor samar erasotzen bazioten gaiari, halakoak gai eta kontu handiegiak zirela esanaz ebaten zieten eztabaida, eta lanean jarraitzen zuten burua makurtuta. Politikariak eta poliziak ugaldu egin ziren, eta nahastaile gehiegi ote zegoan kezkatzen hasi ziren gusasoak. Aspaldiko irrati zehar handian entzuten egon ohi zen sarritan aita; han-hemenka atxiloketak gertatu omen zirela jakiten zuen, eta hor nonbait tiroz hildakoren bat ere ba omen zela. Gizabanako batzu maiztxo azaltzen ziren etxe ingurura, eta seme-alabek txakurrak deitzen zietela erreparatu zuten. Inguruko herriren baten atxilotu ugariagoak eta hildakoak ere baziren hotsak iritxi zitzaizkien. Gazteengatik kezkatu egin ziren, ama batezere. Eta gazteek ixilik jarraitzen zioten; gero eta ixilago eta ahopeka hitzeginaz. Gauean faltatzen hasi zen semeetarikoren bat, eta beste-

ren bat arrazoi laburrez joaten hasi zen norabait. Noizbaiten gezurretan ari ote zitzaion pentsatu zuen aitak semeren batengatik, eta areago kezkatu zen orduan. Semea paperen batzu irakurtzen ari zela ustegabean hatzeman zuen amak, eta bizkor gorde zituen non edo non, lagunek igorritako eskutitzak zirela esanaz. Gau luzeegiak igarotzen zituzten gurasoek semeren bat etxetik kanpo zenean; atean sartzen somatu arterainoko beilan. Gazteago zireneko errietei utzirik, gero eta ixilago zeramaten seme-alabekiko kezka. Telebistan ikusten zituzten inguru hurbilegiari zegozkion irudi gordinak, eta aipamen zorrotzak entzuten zituzten politikari eta poliziengandik. Egun batez bere laguna atxilotu zutela esan zien semeak eta hitzik erantzun gabe bazkaria atertzen jarraitu zuen amak. Aita, berriz, kaferik hatu gabe joan zen lanera, emaztearen isiltasunarekin sopikun sentituaz. Eta bere burutazioetan murgildua, mekanikoki lan egin zuen kezkaren astuna aienatu nahiz. Baina erro luzeko kezkak ziren. Gau batez, goizaldeko ordu txikietan, danbateko izugarriak eta atehotsak somatu zituzten eta izuikaraz jaiki ziren etxeko guztiak. Zartada handiz jotzen zuten etxeko atea, eta oihu handiak egiten zizkieten atea irekitzeko esanaz bestela bota egingo zutela eta. Etxean denak elkarri so gelditu ziren, baina inor ez zen ausartzen hitzik egitera, eta ama atea irekitzera joan zen. Pistola eta fusilen muturrekin bultza egin zioten andre gajoari eta amen esateko astirik gabe etxea bete txakur zegoen barnean, deneri garraisi eginaz eta ormaren kontra jartzeko aginduaz saihetsetan jo zituzten kulatekin, eta etxe guztia miatu zuten goitik behara, txokorik txikienik ere utzi gabe; arropak lurrera bota eta zapaldu egin zituzten, gaumahaietako diruak desgertu ziren, oheak ipurdiz gora giratu zituzten eta amaren protestei tiro bat nahi ez bazuen isilik egoteko esanaz erantzun zieten. Seme-alabetarik hiruri eskuak atzean lotu zizkieten eta heurekin eraman zituzten gaizkileak zirela esanaz. Orduan amak negar malko haundi bi ixuri zituen eta aitak hauxe besterik ez zitzaigun falta esan zuen

alkian eseriaz. Zortzi-bederatzi egunetara atxilotuetariko bi itzuli egin ziren etxera, begi zulo haundiekin, burua apal, abailduak eta itxura tamalgarrian itzuli ere. Baina hirugarren atxilotua ez zen etorri etxera, eta gartzelara joan ziren hura ikustera. Beira lodi eta barroteen osteko aldean ikusi zuten semea, eta burnizko saretik ozenki hitzegin behar izan zuten elkarri aditzeko; amari malkoak erori zitzaizkion eta negarrik ez egiteko eskatu zion semeak. Aita isilik egon zen semeari so. Beste guraso asko ikusi zituzten heuren semeak bisitatzera joanak. Lagun zintzo eta ugarirekin zegoela esan zien, eta lasai egoteko berarengatik. Zergatik atxilotu zuten ba ote zekiten galdetu zien gurasoei, eta orduan, ba, pentsatzekoa zela erantzun zion aitak, Amak, berriz, malkoak xukatu zituen eskuan zuen pañeluakin. Aski zela beti Heuren araueta-ra makurtzetik esan zien semeak; hobe zela preso eta ez artzanor, ezin zitekeela bizi osoan jopu izaten jarraitu, ea ez al zekusaten Heurak nola ari ziren gizendu eta gizendu Ez-Heuren kontura. Apaizek beste nonbaiteko loria eskaintzen zutela jainkoen izenean, baina hemen infernua biziarazten digutela bien bitartean, handikiek zurrupatzen dituztela lan egiten dutenen odola eta izerdia, eta poliziek Heuren legeen esparrutik inor atera ez dadin kontu egiten dutela, azpijoko eta trama makabro bat dela guztia eta ezin daitekeela bizitza guztia burua makurtuz eta amor emanaz iragan. Lana egin behar dela, baina norberarentzat egin behar dela, eta ez txakur jagoleak mantentzeko eta handikien lepoak loditzeko, lasai egoteko; ez dutela lapurretan eta litxarrerian ibiltzearren sartu preso eta ez duela zertaz lotsa edo damu izanik, ezta gutxiagorik ere. Bestalde, ez pentsatzeko Heurak hain ahalguztidunak direnik, sahietsean jo eta jo eginez gero erraldoirik handien eta gogorrena ere erortzen dela, eta horixe dela irtenbidea; jo eta jo egitea alegia, eta ez burua makurtu eta amor ematea. Gartzelan egotea dela gutxienekoa, hori pasako dela eta etorkizuna hor dagoela zai.

Odol zipriztinak eta lagun kolpatuak ageri gara gatazkaldiaren lekuko ozenak. Ez dakit zein sentimendu nahaspilatzen zaizkidan; izua, harridura, gorrotoa.... agian, horiek eta beste gehiago datozkigu gainezka. Halakret urdin-nabarxeaz jantziriko gizarratoiak heuren atzetik hertsi zaizkien atetzarretan at desagertu dira orain; Burdinaren arrahots lehorrak atereaz eta kirats higuingarri hau utziaz, haien lekukotasun ziurra adierazten duen kirats astun eta nabariegia. Eguratsa oro kutsatua dago engoitik, ezin aurki daiteke kirats nazkagarriaren ikuturik gabeko txokorik. Egoitza edo hiri moduko honetan, pasadizo eta gela arrotz hauetako bakoitzaren zati eta osakin da egurats hau; ore oso bat egiten dute alor guztiekin batean; izainaren osakinak dira alor guztiak. Pasabide zabal eta gorde itxurako batetara uzkurtu ginen atsegin hartu edo lo egitera, bata bestearen epelean amets edo gogeta ekurugarrien gose. Isiltasunik bareenean geundenean, arrapaladan etorri dira gizarratoiak eta, ustekabean harrapatu gaituzte ihesbiderik gabe eta ilunbetan. Ongi zekiten noiz etorri, ongi pentsatuta prestatuak etorri dira; gure ezinaren abadagunea ez dute alferrik galdu. Aisiara ginduzkaten. Haien onura eta gure kalterakoa da ilunbe hertsi hau, izainaren aliatua da iluntasuna. Galerian zehar guregana azkarki etorri da gizarratoi talde haundia, begietatik leinuru bizia eta aho-

tik lerdea zerietela. Garraisiak eginaz gaineratu zaizkigu, zalaparta eta zarata izugarriak eginaz, haize eta ekaitzaren baitan bilduriko munstrotzarra bailitzan orobat. Begietako bristadak tximista iduri, trumoi handian bilduriko eraso zakarra izan da. Hatza parrekin harrapatu duten guztia zafratu eta urratu dute, makilekin jo gaituzte. Une horretako erabako isilarengatik edo gehiagora ausartu ez garelako ez diegu aure eman, gure oihu eta garraisiekin izan ezik. Eta heurak ere garraisi egiten zuten, garraisi egin eta zafratu; jo, eraso, ea haien eta gure garraisiak geroago eta ozenago egin dira, garraisiak gatazka iskanbilatsu bilakatu dira; garraisi gatazka. Galerietan zehar hedatu dira garraisiak. Ormetan jo eta errebotatuaz, garraisi eta oihuek elkar joaz, hazten eta hazten joan dira heuren oihartzuna jasanezina egin den arte. Makilkadek eta hatzaparkadek ezin zituzten oihuak isilarazi edo oiharzuna itzali. Isuri diguten eden mikatz eta mingarriak begiak mindu eta malkoak isurarazi dizkigu, baina ezin izan du oihurik estali; ez digute ito gure dehadarra. Ozenago egin dira oihuak eta garraisiak, eta eraiki den oihartzuna indartsu bilakatu da eta izainaren erraiak kolpatu ditu, gizarratoiek zalantza egin dute; eden mikatzik gabe gelditu dira, eta zalantza egin dute. Garraisien oihartzuna gero eta gehiago hazi da; gero eta indartsuago bilakatu da. Aurpegi eta bularrak hatzamarkatu eta odoldu dizkigute eta besoak eta buruak makilaz kolpatu. Saihetsak zapaldu dizkigute, eta isuri diguten eden mikatzak eztulka eginarazi digu arnasa hartu ezinik, begiak mindu dizkigu eta malko iturriak botarazi. Baina ez dute lortu garraisiak isiltzerik. Erasoa gogortu duten heinean hazi eta indartu egin da garraisien oihartzuna, ortzantz ikaragarria bailitzan. Zalantza areagotu zaie. Haziaz eta haziaz joan da haien ezbaia. Haien garraisiek indarra galdu dute, eta zalantzak garaitu ditu gizarrtoiak. Amaiezina iruditu zaigun denbora hori astunago eta latzago egin du ilunbe hertsi honek, eta denbora horretan ihiki ase dute heuren gorrotoaren gosea. Atzera egin dute, halere. Harrapaladan ezkutatu dira

etorri diren antzera, ate itsuen ostekaldera aienatuaz. Haiek aldegiteaz batera baretzen hasi da garraisi ozenen oihartzun lehergarria, eta gatazkaren ondorenak agerian gelditu dira. Lurrean utzi gaituzte kolpatuak, sudur eta matrailetatik odol jario. Trasteak apurturik eta nahasiak gelditu dira. Izainaren heste eta bentosetatik isurkin zikina hedatu da galerietara. Baita gu gauden lekuraino ere; birus eta zomorro samingarri eta gaiztoak isuri ditu izainak; zahurtzaile eta zurrupari itsatsi zaizkigu, odol jario eta zaurietan barneratzen zaizkigularik. Haize gaiztoaren gisan zabaldu den zorri zikinen izurritea izainaren eta gizarratoien beste arma bat da, zalantzarik gabe. Ezin genezake aurre egin gabe iraun; izainari berari laguntza ematea ainakoa litzateke aurre egin gabe irautea. Ezin diezaiokegu amor eman, zutitu eta jarki behar gatzaizkio izurrite berri honi ere. Elkarri lagun diogu, buru odolduak eta hezur hautsiak konpondu ditugu, altxa ezin direnei esertzen lagun egin diegu. Baina azaleko zauriak dira arineak; barnekoak dira minago, kirioetaraino sartzen dute edena. Sentimendurik goxoenak zapuzten eta ohosten dituzte, basati eta bihozgabe bilakarazten dute, edo deuseztaraino beldurtzen, barneraino sartzen diren zauri gaizto horiek. Egonezina sortzen dute barneko zuriek. Odolarekin batera gorputz guztira hedatzen dira, burmuinetaraino iritsiaz; zentzunari ausiki egiten diote nortasuna zendu arte. Barneko zauriak ez dira azalekoak bezala osatzen, hazi egiten dira; hazi eta hazi, gero eta handiago, gero eta minago. Bakarrik eguneroko borrokak garaitu ditzake barne zauri horiek, eguneroko ahaleginak, eta leku madarikatu honi amor ez emateak, batezere. Gordina da hemengo hotza, hotz pozointsua. Eta ilunbe goibel honek nekatu egiten du, eldarniora iristeraino nekatu ere soraio ez den edozein. Gainera, ez da ilunbe hila, ez da ilunbe hutsala; bizitza hilgarrizko eguratsa du ilunbe honek, madarikazio eta patu txarrez betea da. Biziduna da hotza ere, biziduna eta oldarkorra; etenik gabeko zemaia. Igarobide luze eta gela itxurako lekuak dituen egoitza edo

hiri honek irtenbiderik izango ote duen ere zalantza eragin diezaioke edonori; zalantza eginarazi dezake senari jarraitu ezean. Senari eta itxaropenari, arrazoiari atxikitzen gatzaizkio une latzenetan; naufragoak urgaineko oholtxoei atxikitzen zaizkien antzo lotu behar gatzaizkio geure izatearen oinarriari. Bizi eta nor izan nahiaren gogoak eta indarrak bultzatzen gaitu aurrera jarraitzera; unerik latzenetan ere, zoritxarrik tamalgarrienean ere aurki bait daiteke, txokoren batetan uzkurtua, zorionaren zati bat. Agian zoriona sentitu dute gizarratoitzarrek ere guri erasotzean. Apika, horrexegatik izan da hain bortitza heuren ahalegina. Behar bada horixe falta zitzaien zoriontsu izateko, guri zafraldi on bat ematea, alegia. Gure lasaitasun apurra ohestu eta eraman dute heurekin, eta lasaitasun horretaz elikatuko dira orain, osoki bete arte elikatuko dira; hanpatu eta lehertzear jarri arte aseko dituzte heuren erraiak. Luzaroan egongo ziren irrikitzen, gure lasaitasun txikiaren antsiaz eta gogoz, gose izango ziren heuren barne betegaitzetan. Horregatik etorri dira hain gose, mendeku gose. Eta aisa ase dituzte heuren gogoak; gure traste eta gauzarik arloteena ere xehatuz ase dira; tapakiak desagertu dizkigute eta gorderik generamatzan bezuza edo altxor txikienak apurtu edo lapurtu. Ez dute aski izan zafraldiarekin, areago nahi zuten nonbait. Eta horretan saiatu dira ahal izan duteno. Batzutan ezin konpreni daiteke gizarratoi horien gorrotoa eta etengabeko eraso horren zioa. Arrazoi sakonak behar ditu izan hain otin gaiztoak. Izainaren eta bertako pertsonaien bizi behar soila dateke, agian, gorroto horretarako bultzada. Edo leku hau heurena delako, gu ez hemengoak eta ez beste inongoak izaterik nahi ez dutelako ote da guztia? Gure izate bera dateke gatazka honen oinarrizko arrazoi, eta gu ezezik gure izatea ere zurrupatu eta ezabatu nahi digute hain segur. Horretarako betebehar jakina du hemengo alor eta pertsonaia bakoitzak: gizarratoiak, ormak, eguratsaren sunda astunak, ilunbeak eta hotzak... Desagertu dira gizarratoiak, joan dira gure hondamendiko toki-

tik, izainaren bentosek irentsiak izan bailiran. Baina, orma hauen osteko aldean haien presentzia nozitzen da; beti izkututik, zulotxoetatik so, beira ilunen atzeko aldetik zelatan daude aztore harraparien eran. Egin duten balentriari begiratuko diote, ongi asebeteak, ekintzaren ezti gozoa gure ezinean eta auhenetan dastatuaz. Guri ohosturiko lasaitasuntxoan eta gure aienetan hordituko dira, gure bakearen eta nasaitasunaren ihintzetan bustiko dira blai egin arte. Ezpain zikinen ertzetatik gainezka dariela edango dute gure sentimendurik gordeenaren ardoa. Edan eta edan egingo dute horditu eta gero ere, gatazkako harrapakinez blai egingo dira aspaldiko lehortea bustitzeko, eta farra egingo dute guztiz hordituak; algaraka egingo dute farra, eta guri soegingo digute zulotxoetatik. Gure ezina eta samina ikustean areagotu egingo da haien algara eta gozamena. Aboro edango dute gure sentimenduen upeletik. Guri ohosturiko irrifarrak eta agurrak edango dituzte hordiago egiteko. Hatzapar odolduak erakutsiko dizkiote elkarri, eta gugan eginiko balentriak goraipatuko dizkiote batak besteari. Ateraldi eta imintzio zekenak egingo dituzte izaki ederrenaren zantzu bailiran. Guri kendu eta eraman dituzten gauzak miatu eta arakatuko dituzte zerarik kuttunena ere trufaz eta irri maltzurrez astindu eta apurtuaz; gauzatxo horietako bakoitzean gure arimaren zatitxo bat ediren nahiko dute, hura ere zurrupatu eta zendutzeko. Eta asetzen jarraituko dute gurea den edozer xahutuaz edo edanaz, harrapakin nimiñoena ere lehia sakonenarekin atxikiaz bere ezaugarriak edo oroitzapenak zurrupatuko dituzte. Gizarratoien asebeteaz aseko da izaina, indartu egingo da. Ormak gotorrago egingo dira, eta eguratsaren sunda astunago, bikatsuago, bihurtuko. Gizarratoien kiratsa areago kutsatuko da, begietako leinurua biziagotuko zaie eta ahotik isurtzen duten lerdea ugarituko. Berriro izango dira mendeku gose, eta gugan ase nahiko dute heuren gosea. Jarraituko dute zalatari; beira ilunen atzetik edo izkutuko zulotxoetatik soeginaz. Gu egongo garen lekuko ormaren osteko aldetik

egongo dira gure solasak entzuten; gure elkarrizketak aditu nahian, gure kezka edo irriak entzungo dituzte etengabe. Hartzara etorri nahi izango dute gure lasaitasun txikian murgildurik aurkitzen gaituztenean.

Handia da izaina, erraldoia, eta gizaoihanean zehar doa bere joan oldarkor eta zemaitsuan. Makal, baina indartsu higitzen da. Gizaoihanak, gizamortuak eta gizarroak zeharkatuaz doa heroi handi bailitzan; aitzina doan heinean haziaz eta hanpatuaz. Madarikazioa dago hedatua gizaeremuetako lurretan, eta madarikazio horren abaroan babesten da munstroa. Gizaeremuetako madarikazioaren itzalak sortu du izaina, eta izal horrek berorrek indartu du mamutzar handi egiteraino. Madarikazioaren begikoak jota dago gizaoihana; gizaoihana eta gizarroak madarikatuak daude. Gizaeremuen zatitxo batzu baino ez daude izurritetik aske; gizamadarikaziotik at. Madarikazioaren izurriteak jotako gizaeremuen kuttuna da izaina, madarikazioaren izurriteak jotako gizaeremuetako heroi eta jagole; jagole batezere. Baina, baita babeslea ere. Bere inguruneko babesle bailuen, berarekin darama itzal iluna; berari jarraitzen dio itzal larderiatsu eta izugarriak, edo, agian izaina bera da itzalari darraikiona. Mantsoki badoa ere oreka ziurra darama munstroak bere joanean. Gizazuhain ttipi eta ergelak zapaltzen ditu bere igarobidean, eta gizazuhaitz haundi lerdenen enborretan igurzten du bere bizkar likatsu muskerra. Gizazuhaitzen sapa urrupatuaz elikatzen eta indartzen da munstroa. Baina ez du edozein gizazuhaitzen sapa urrupatzen, eta ez du edozein gi-

zazuhaitz zapaldu eta triskatzen bere joanean. Madarikaziotik aske dauden gizazuhaitzen sapa du gogoko, eta horretaz elikatzen da. Izurriteak ikutu gabeko gizaibaietatik edaten ur gardena. Izurriteak kutsaturiko guztia gozoki makurtzen zaio bera igarotzen denean, heuren hosto eta aldaskez ferekatzen dute izainaren azala, babes ematen eta zaintzen dute madarikaziozko itzalpean. Denak bat ez badira ere elkarren osakin dira madarikazioaren zati guztiak. Kutsaturiko gizazuhaitzek itzal gozoa ematen diote mamutzarrari bero denean, eta epelgune hotzetik babesteko. Gurtzen eta loriatzen dute madarikazioak jotako gizazuhaitzek; boz goraz abesten dizkiote loriazko doinuak, eta biziki maite dute. Berez askieza den haur-zozo haundia bailitzan zaintzen eta maitatzen dute; izan ere, berez ahula baita izaina. Ingurumenaren indarretik elikatu behar du munstroak. Ingurumen egoika behar du eguzki berotara ohilduriko barea bezala eihartuko ez bada. Kutsaturiko gerizak demaio beharrezko abaroa. Hodoi beltzek dagieten itzala dute gizaeremuen jainkozko babesa; izainarekiko babesa batezere. Gizaeremuetako txokorik gordeeneraino iristen da mamutzar erraldoiaren garraisia eta hatsa, hotzikara eragiten du bere garraisi urragarriaren oihartzunak. Izuarazten du bazterrik urrutienean galdua dagoen gizazuhaixka; dardara eragiten dio eta hostoak jalgiarazten. Madarikazioak jotako gizaizakiak dira izuzten ez diren bakarrak; haienganako eskerrona baita izainaren garraisia. Loaldi sakonetik iratzartzen da mostroa, eta oihuak egiten ditu nagiak ateratzean. Ihalozkatzen da gizalohietan, eta bere betiko jonari lotzen zaio berriro. Madarikazioak jo gabeko gizazuhaitzak begiak zabaltzen dituenean bere ondoan dakusa izaina, beste gizazuhaitz bati sapa zurrupatzen; hezetasunik gabe uzteraino zurrupatzen dio. Eta eihartzen dira hezetasunik gabe gelditu diren gizazuhaitzak; oihu ito batean ihartzen dira. Mamua hanpatzen da, eta laino beltzen itzal ilunak estaltzen du tragediaren gordina. Izaina sendoago eginaz doa; madarikazioak jotako gizazuhaitzen kanta hotsa ozenago bihurtzen da,

madarikaziopeko gizamendien kanta ozenak gizarroetan zehar hedatzen du bere oihartzuna. Gizalanda eta gizamendateetan zehar zabaltzen da izurritearen mezua, kutsatzen dira laino eta haizeak, pozointzen da euria, eta euri pozoinduak blai egiten du izaina erraldoiaren larru likatsua. Ortzea iluntzen dute hodeitzar haundiek; itzal ilunaren pean gelditzen dira gizaoihan eta gizamortuko eremu zabalak. Eta madarikazioaren itzalpen babesturik, oreka osoz doa mamutzarra bere ibilaldi gotorrean. Izurritearen kutsadurak sorgorturiko gizaeremuak erditu zuen izaina, eta behar beharrezko bilakatu zaio orain; ez du munstroa desegiten ahal madarikaziopean dirauen artean. Eta Izainak berak ere beharrezkoak ditu madarikazioaren lainopean dauden gizaeremuetako gizaizakiak. Madarikaziopean babesten da, eta kutsadurak harrapatu ez duen guzti hura du hazkurri. Madarikazioaren ilunbeak hatzeman ez dituen gizazuhaitzek gogorki heltzen diote bizitzari; begiko gaiztoaren hatzaparretatik ihes egiten dute ahaleginean. Garraisi egiten dute izainaren garraisiaren aurka. Axut egiten dio oihuak oihuari. Oihu ttipiak gizarro batetaraino iristen dira batzutan, hoitzar ilunak estaltzen eta zapuzten dituzte sarriagotan; baina ez dute etsitzen madarikazioaren aurka. Izaina erraldoiaren burrunbada dantzutenean hotzikarak astintzen ditu gizazuhaitzak, doi doia irauten dute zutik hosto eta aldaxka txikiak atxikiaz. Ia lur jotzeraino makurrarazten ditu izainaren igurtzi astunak, baina berriro jaikitzen dira biziaren egarri eta garraisi egiten dute gorrotoz eta indarrez. Gizalanda eta gizaoihan oparoetan handiki agertzen da munstroa; orroa egiten du gizazelai zabaletan, eta ihalozkatzen da atseginez. Madarikazioaz babesten diren gizazuhaitzek goraki abesten diote gizamendi gailurretan agertzen denean. Ohorezko dantzak eta jaziak egiten dizkiote heroi eta jagole haundiari; kuttun maitatuari. Besteek, madarikazioaren izurritetik at gordetzen direnek, aldaskaz eginiko geziak ihaurtikitzen dizkiote ausartki. Geziz eta garraisiz kolpatzen dute munstro erraldoia, berez askieza den

mamua. Eta ez dirudi zauririk tipienik ere egiten dutenik izainaren larru lodi likatsuan. Ez da saminez astintzen, ez du nahigabezko garraisirik egiten izainak; madarikazioaren babesean oldarkor aurrera darrai izainak. Garraisi ozenagoak, gezi zorrotzagoak eta ugariago ihaurtikitzen dizkiote munstroari, baina munstroa beti aurrera. Joanago eta haundiago, joanago eta beldurgarriago da mamua; munstro izugarria. Gizaibaietako ur gardenetan edaten du. Gizauztarik eta saparik gozoenak hurrupatuaz elikatzen da, madarikazioak kutsatu gabeko haietaz. Baina madarikazioaren izurritetik at dauden gizaizakiek ez dute etsitzen. Gatazka isil eta bizkorrean dihardute itzal madarikatuaren aurka, etsitzea kutsatzea da, borroka galdu eta madarikaziopean erortzea. Oihu eta geziak haurtikiaz jarraitzen diote izainari. Beharrezkoa da munstroaren galera, munstroaren heriotzak dakar itzal ilunaren hondamendia, madarikazioaren azkena datorke begikoa deseginez gero. Ezinbestekoa da madarikazioa desegitea. Behar beharrezkoa izaina eguzki berotan kixkaltzea.

Bere lagunari kontatzen ari zitzaionean neronek entzun nion nola esan omen zioten momentu batez alboko gelatxo hartara pasatzeko eta hirurak igaro zirenean batek atea itxi omen zuen heuren atzean eta arakatu egin behar zutela eta agindu omen zioten biluz zedin baina berak ez zuela inola ere bere soinik haientzat biluztuko eta araka zezaketela nahi zuten bezala erantzun omen zien eta orduan hasi omen zitzaizkion gehiago hitzik ere egin gabe bat zapatiletako lokarriak askatzen eta bestea jertseari tiraka besoetatik atera asmoz berak beti geldi zirauen bitartean nola edo hala jertse hori kendu eta eskuetan erabili omen zuen dena nahaspilduz eta jertsea besterik ez zela konturatu zen arte ez omen zuen txoko batetara bota bestea zapatilakin zebilen bitartean eta ateratzeko ere hanka altxatu behar izan omen zion eta barrura begiratuaz bizpa-hiru aldiz doblatzen zela ikusi zuenean utzi omen zuen alboan berak inolako imentziorik ere egin gabe so egiten zion bitartean galtzerdia ateratzeko ere hanka altxarazi omen zion eta unetxo batez ia oreka galdu omen zuen eta hutsagatik ez omen zen erori aurrez aurrez egon arren begietara begiratu gabe alkandoraren goieneko botoiei behatz dardatiz kolpeka ari zitzaionaren gainera bestea denbora bigarren zapatila indarrez ateratzen ahalegintzen zitzaion bitartean baina hala ere ezin eta alkandorarekin ari zenak

bigarren botoiaren ondoren hirugarrena eta gero laugarrena askatu omen zizkion gerrikoa askatu gabe alkandorari gora tira eginaz besteak bigarren zapatilaren korapiloari berriro kolpe ondoren izerdi tantak ere ba omen zituen kopetean nola edo hala zapatila hori atertzea lortu zuenerako zutik zegoenak alkandoraren zazpigarren botoia askatu zuenean berriro ere bizpahiru aldiz doblatu eta alboan utzi omen zuen delako zapatila hori ere eta galtzerdiari goiko ertzetik heldu-ta ateratzean alderantzira jiratuta utzi omen zuen batez bate-an erdeinuzko keinu bat eginaz zutik zegoenak eskumuturre-tako botoi biak askatu ondoren tira eginaz atera omen zion alkandora bera kamiseta eta galtzekin oinutsik geratzen zen bitartean eta kamisetari kolpe omen zion hurrengo hitzik ere esan gabe tira eta tira egiten omen zion eta besoak geldotasu-nez gorantz altxatu omen zituen atera ziezaioten behin beti-koz kamiseta ere bazter batetara bota omen zuten esku arte-an erabili ondoren geldi geldi eta zalantza itxuran egon omen zitzaizkion begira gerriko askatzen hasi aurretik baina halako batean behatz punta dardartiekin askatu omen zioten galtzen gerriko botoia ere eta ondoren bigarren eta hirugarrena eta laugarren eta bosgarrena askatzen ez omen ziren hasi ere egin baina galtzei behera eta behera tira egin omen zieten iztar zuriak agerian utziaz hanka bati heldu eta altxatuaz ate-ra omen zion galtzen erdia eta gero beste hanka altxatu zio-nean ia erori omen zen oreka galdurik baina hala ere erori ez eta mekabendios bat bere aurrean eta beste mekabendios bestea bere atzean hura omen zen kuadroa eta bera beti ixi-lik omen zegoen baina arakatzen ari zitzaizkionak ere ez omen zuten txintik ere ateratzen ia berari aurpegira inoiz begiratu gabe ihardun omen ziren heuren zeregin horretan arituak omen ziruditen nolabait ongi leziatutako jopuak itxu-raz behintzat eta behin eta berriz eskuetan erabili eta maspil-du omen zituzten galtzak ere batek bazterrera bota behar zituela zirudienean besteak hartu eta areago miatu omen zi-tuen poltsiko bakoitza jiratuaz zorroz kanpora eta gerrikoa-

ren ingurunea ere ondotxo pasa omen zion eskuaz baina ezer aurkitu ez nonbait eta halako batean bazterrera bota omen zituen galtzok eta kantzontziloak ken zitzan agindu omen zioten hurrengo baina berak berriro ere ezetz eta heuren lanean ederki arituak ziruditela eta jarraitzeko nahi zuten moduan eta orduan zalantza itxurak egin omen zituzten baina azkenean kantzontziloak jaisten hasi omen zitzaizkion behatz puntekin helduaz behera tiratzen zihoazen bezala zakil zakil muturra uzkur uzkur egina agertu omen zitzaion kantzontziloei tiraka ari zenaren mutur parean eta berrriro ere lehenago bezala lehenengo hanka bat eta gero bestea altxatu omen zizkioten eta asko miatu gabe bota omen zituen kantzontziloak bazter batetara bera gisa horretan batere arroparik gabe gelditu zenean inoiz baino bitxiago zeritzolarik gelatxo hartako atarramendua edozein modutan ere bera zutik eta geldi gorpu bat baizik ez bailitzan eta beste haiek berari so arropa mordoa lurrean barreatu ondoren flexioak egin zitzan agindu omen zioten eta erantzunik ere eman gabe buruarekin ezezkoa egin omen zien baina berriro ere esan omen zioten flexio batzu egiteko baina berak ezetz berriro ere ez zuela flexiorik eta mariasantisimarik egingo eta orduan gelan zegoen sila gainera igotzeko asmotan hartu eta justu bere atzean ezarri omen zuen batek sila hori eta bestea bere oinetara makurtu omen zen era xelebre horretan atzezean zegoena sila gainera igo eta esku biak bi sorbalden gainean jarriaz behera eta behera sakatzen hasi omen zitzaion makurtuta zegoena hankak doblarazten saiatzen zitzaion bitartean eta hala ere flexiorik ez zuela egiten ikusirik kolabora zezan eskatu omen zioten baina berak ez kolaboratu nahi eta indar gehiagoz sakatzen eta hankak doblatu nahian jarraitu omen zioten halako batean eroriko ez bazen eskuak lurrean jarri beharra izan ei zuen urdekume haien bultzadengatik eta orduan heuren lana betetzat bezala jo omen zuten eta poltsikotik ateratako pañuelu eta papertxoei begirada bat bota ondoren esan omen zioten ongi zegoela eta vístase.

Badoa izaina gizaeremuen zehar, eta bagoaz gu izainaren hesteetan. Munstroaren hesteetan goaz aurrera, galeria ilun hauetan. Baina izainak garamatza baitere; munstrotzar honek garamatza gizartean zeharreko txangoan. Gehiagoren ezinean galeria hits hauetara mugatzen da oraingo bidaia honen txanpa lazgarria. Halabaina, bidea ezagutuaz goaz poliki poliki aurrera goazen heinean, gero eta ustekabe gutxiago ditugu aurrean; sortzen diren behaztopek ez gaituzte txoro txoroan harrapatzen. Ezagutzen ditugu txokoetako ateizunak eta nonnahi agertzen diren bidegurutze berriak. Jakinaren gainean goaz, eta badakigu edozein lekutan daudela zirristu gordeak; badakigu, jakin, zirristu horietatik haruntzago mehatxua ezkutatzen dela, noiznahi gainera etor dakiguken mehatxu gaiztoa. Esker-eskuin somatzen dugu gizarratoi jagoleen presentzia izkutua; ageri ez direnean ere badakigu hor daudela, badakigu gugan dutela duten oharmen osoa, gugan jarriak dituztela hatzaparren norabideak. tarteka hor agertzen zaizkigu, bazterren batetatik, gizarratoi higuingarri horiek. Hor agertzen dira heuren talaietan kokatuak, zutik, higidura nimiñoenik ere gabe, korridore luzeetan eraikiriko haitzurdinezko irudiak bailiran. Hor daude bide luzearen albo bietan kokaturiko jagoleak; gauezko aztore harrapariak iduri. Ausart eta oldarkorrak ageri dira gizarratoiak izaina-

ren hesteek ematen dieten ziurtasunean. Txangolarioi mezpretxuz soegiten digute hauren zelata lekuetatik, buruz buru aurre emateko uzkur, gizarrtoien egiazko arma den halakret urdin-nabarxearen osten saihestuaz. Arima maltzur eta odolzalea nekez erakutsiaz. Ateizunetatik agertzen dira eta galeria labur bat erdi laisterka igaro ondoren beste ate batean harat desagertzen dira bizkor. Hiru-launaka marmar kraskadak eta burdinotsak atereaz desagertzen dira zalapartaka. Zelata txoko batean somatzen dugu jagole, bere begirada maltzur hotzaz, eta begira gelditzen bagatzaizkio berehala desagertzen da gizarratoia, txilio eta marmar batean desagertzen da. Beste batzutan, ordea, ez da desagertzen, bertan gelditzen da begira, imintzio txikienik ere egin gabe, munstroaren hesteen zati bereiztezina bailitzan. Geldi irauten du bere hartan, gutako bakoitzari erreparatuaz; gutako bakoitzaren keinuetan erreparatzen du gizarratoi zelatariak. Begiraden arteko gatazka sortzen da orduan; berak guri begiratzen digu eta guk berari. Elkarneurtze bat da, borroka ixila, zalapartarik gabe burutzen den borroka. Baina gerra krudelak dira horiek. Begirada begiradari jazartzen zaio, txinpartak eta geziak ateratzen dira begi bakoitzetik, gorrotoz pozoinduriko geziak eta txinpartak dira eta ez du inork amore ematen. Ez du inork begiradarik aldentzen. Gunetxo bat baizik ez dena denboraldi eternal bilakatzen da. Bekokia zimurtzen da eta begiak ia ixteraino txikitzen; burmuinak jauzika hasten dira gogoari bultzada izugarriak emanaz. Areago ixten dira, txikitzen dira, begiak, baina zeharo hertsi gabe irauten dute, indartsu eta bizi biziak. Burmuinen aginte ahalmenari ere gainez egiten dio gogoak, eta gune batez ezin asma daiteke zer datorkeen ondoren, eta tartekatzen den huskeria batek begiraden gelditasun lehorra apurtzen du. Gatazka zapuzten da beste behin eta galerien luzetasuna agertzen da berriro. Txangoari jarraitzen gatzaizkio begiradaren ondoren. Berriro egoitza huts eta desanparatua dirudi igarobide eta gela guzti hauen mordoilo korapilatsuak; Herioren hiria dirudi inguru-

ne osoak. Bai, Herioren hiria izan daiteke hau; hiriburua ere bai, agian. Baina hemen ez dago heriotzarik. Hemen ez dago heriotzarik. Berriro errepikaten dut hemen ez dagoela heriotzarik. Eta berriro eta berriro errepikatuko dut, ahots apalez lehenbizi burmuin delikatuek ongi uler dezaten, eta ozenki gero belarrien sorgortasuna mila aldiz zulatzeko adinako oihuz, hemen ez dagoela heriotzarik. Herio bizi da hemen, eta larre oparoak dauzka galeriotan baina, heriotzaren kimuak arrazoiaren izotzak eihartzen ditu. Bizitza hurrupatzen digute galeriotan, pasadizo lazgarriotan, baina ez dago heriotzarik. Errazkeriari amore ematea da heriotza. Errazkeriari amore emanez gero heriotza dator; hil egiten da heriotzaren kimuak sendotuz gero, kitto. Eta hemen izainaren bentosek ez dute uzten errazkeriari amore ematen. Eta hemen gizarratoiek heriotzarekiko izua sortzen dute, zukurutz jasanezin bihurtzen da heriotzarekiko izua eta beldurra. Horregatik, horregatik batezere, hemen ez dago hiltzerik, ez kitto egiterik. Herio hor dago beti, beti gure aurrean, guri so, geldi eta zutuna. Gelatzar hauetakoren batetara atsegin hartzeko baztertzen garenean ere hor dago Herio, txoko batean kuzkurtua, mundukari higatuaren antzera zai; beti dago zai. Izainaren erraitetako eguratsaren pertsonifikazioa da Herio. Horregatik diot Herioren hiria izan daitekeela hau. Baina Heriok ez du irabazi; ez da inor Herioren hatzaparretara zoramenez horditua erori, ez hemen. Hemen bultza egiten dute Herioren hatzaparretara, eta bizia ohosten du Heriok. Horregatik diot, ez dago heriotzarik hemen. Beldur guztien gainetik jarraitu behar da aurrera. Gizarratoien begietako leinuru horrek beldur ematen du. Baina ez da gizarratoiekiko beldurra, ez zelatari nazkagarri horiek egingo liguketenari beldurra. Heurak zuzenki, aurrez aurre gauza gutxi egin digute aurrez aurre, zafraldi batzu besterik ezin izan digute eman. Gizarratoiak bakarka daudenean ez dira igarobide eta gela hauetako jagole koldarrak baizik; pizti elbarriak dira bakarka. Izainarekiko duten loturagatik dira kaltegarriak. Heu-

ren zilbor-hestez izainari loturik daude; gizarratoien kiriotetatik izainaren erraietara doan zilbor-hestez daude loturik, bat eginik. Osotasun baten zati eginak daude zilbor-heste horren bitartez. Lotura horren bitartez datorkie begietako leinuru bizi eta gaiztoa. Izainaren indarrez elikatzen dira gizarratoiak; munstroak demaie, zilbor-hestearen bitartez, beharrezko zaien ausardia eta gaiztakeriarako jatea. Lotura horrengatik dira hain boteretsuak, eta boteretsuago egiten dira haladret urdin-nabarxe hori jazten dutenean. Noizpait zilbor-hestea eten edo puskatzen bazaie umezurtz sentitzen dira, eta berriro hazten zaie zilbor-hestea, sugandilari isatsa bezala osatzen zaie. Berriro berregiten dute izainarekiko lotura, zilbor-hestea etengo ote zaien beldur izaten dira askotan, banaka daudenean batezere, eta guk zuzenki begiratzen diegunean ere oso izutzen dira. Baina, oihu eta garraisi egiten dugunean izutzen dira gehienik; desbabestuak sentitzen dira garraisi egiten diegunean; koldar bilakatzen dira heuren zilbor-hestea zaindu beharrean. Sarri sarrienik taldeka ibiltzen dira, halere. Eta taldeka dabiltzanean ez dira hainbeste kezkatzen zilbor-hesteaz. Izainarekiko lotura sendoago atxikitzen dute taldeka, eta elkarren babesa ere ezinbestekoa dute piztitzar horiek. Izainaren indarrez bizi dira eta horregatik zaizkigu zaizkigun bezain beldurgarriak, horregatik izutzen gaituzte. Elkarrekiko beldurra eta izua dago eguratsean; gizarratoiek gugan sortzen dutena eta guk haiengan eragiten dugun izua. Halabaina, beldurra eta izua bezala, indarra eta gatazka bizia ere hortxe daude galeriotako egurats astunean. Sentimendu guztien bultzada lehiatzen da norgehiagoka latzena, etengabe. Bateraezintasun eta arerio indar gotorra borrokatzen dira haien eta gure ingurunearen artean. Haginkada zorrotzak jotzen dizkiogu elkarren eguratsari; haiek gu gelditu eta suntsiarazteko, guk haien ahaleginaren gainetik aurrera jarraitzeko; gelditu gabe gure txangoan jarraitzeko borrokatzen gara, tunelaren azkenean argiak beste dimentsioa hartzen duen erresumaraino iristeko. Arrisku eta zemai

guztiak amaituak direla uste ukan daitekeenean ere nonnahi hor dago, harrian inmortalizaturiko pizti itxusiaren antzera, bere begirada hotzarekin, gizarratoi madarikatua jagole. Nondik ez dakigula inguratzen zaigu haien kirats ustela. Halere, aurrerantzako igarobide guztiak hertsi eta amaitu zaizkigula dirudienean ere, beti dago, ezker edo eskuin saihetsean, gela ilun eta itsu bat edo galeria luze hobiel bat, bukaerarik erakusten ez duena. Abiatzeak ere zalantza eragiten duen aurrerabidea agertzen zaigu askotan, baina beti jarraitu beharrekoa, aurrera egin behar baita biderik itsusienean ere, gelditu eta amore emateak heriotza dakarrelako. Gogor bultzatzen duten arrazoiak daude beti aurrera jarraitzeko. Senaren gotortasuna aski da zalantzak gainditzeko. Igarobideotako iluntasunak beltzago edo argiago egiten da tarteka; eguratsean borrokatzen diren indarren arabera argitu edo iluntzen da tunela. Nonnahi ageri dira gizarratoien begiak datezkeen argitxo bikoitzak; bazter gordeetan kokatuak, mutu eta higikaitz so daudenak. Lerdea eta usaina dariete. Gorrotozko lerdea eta nortasun zekenaren usaina. Zelatatokietan kokatuak, gorrotozko lerdetan blai eginak daude gizarratoiak, nortasun usainez kirastuak. Lerde putzuetan bustitzen dituzte hanka eta eskuak, pauso artega eta ugariak ematen dituzte heuren lerde putzutxoetan. Jauzitxoak egiten dituzte lerde putzuetan tzipriztinak atereaz, eta lerde jarioa ugaldu egiten zaie ezpain ertzetatik behera. Ustelago egiten zaie gizarratoi nortasunaren kiratsa. Eraso nahi eta gehiegi ausartzen ez direlarik etenezinezko ezbaian daude beti. Albo izkutuetan atzera gelditzen zaizkigu aurrera goazen heinean, baina aurrerago ere badaude gizarratoiak, eta atzera gelditzen direnean aurreratu egiten dira heurak ere. Toki batzutan zabalago egiten diren galeriak beste batzutan igarobide estuak dira, eta ormak lizunak; lizunak eta hotzak. Zirristo batzuetan begiztatu daiteke ormaren osteko aldetik jagole dagoen gizarratoiaren hanka, bere gorrotozko lerde putzuan oin-kolpeka ari. Bihurgune batzutan purrusta-

da eta zalaparta itsusiak entzuten dira oso hurbil; briztada batez desagertzen den begi leinurua, isilpeko asmoen salakuntza, algara ozen labur bat... Galeria eta gela denetan zehar hedatzen da zarata bakoitzaren oihartzuna. Guztiaren oihartzuna hedatzen da leku honetan. Ametsetan eginiko aboapenik xumeenak ere zabaltzen dira galeria hauetan zehar, eta hoien mezua izainaren erraietara heltzen da sarritan. Orma hauek entzuten eta jasotzen dituzte gure gogoetak, eta horrela, ustez isilperako aitorturiko gogoetakin erasotzen digute gero. Geure barne muinetan gorde ezinik ihesten zaizkigun itxaropen eta sentimenduak oro harrapatzen dizkigute ormatzarrok, eta ormen bitartez izainak. Geuri ohosturiko sendimenduekin gotortzen dira ormak, hanpatzen da munstroa. Geuri lapurturiko gogoetekin erasotzen gaituzte gizarratoiek. Ordain garestiz saritzen da txango honen egitea, ordainik preziatuena gelditzen da oinatz bakoitzean irarrita; larrutik eta bizitik ordainduriko saria.

Batzutan astunegi bilakatzen da amaiera noiz duenik ez dakigun txangoa. Urrats baten ondoren bestea egiten dugu halere. Iraganaren zati bilakatzen da aurrerantz emaniko urrats bakoitza. Eta gutariko bakoitzaren izatetik zati bat gelditzen da iragan horretan, eta iragan sendoa da; gogo eta konbentzimenduzko harlauzekin osaturiko iragana. Iragan ahul eta lotsagarriak ez du bermagai izateko dohairik, puskatu eta desegin egiten da pizurik arinenaren azpian. Funtsik gabea litzateke arrazoiaren euskarri sendorik ez duen iragana; behaztoparik txikienaren aurrean eroriko litzateke. Aurrerantzako urrats bakoitzaren egiteak gure ahalegina eskatzen du, gutako bakoitzaren izate zati batez osatzen baita da iragan hori; Eta pausoz pauso, urratsez urrats higatuaz doa gure izatea. Baina etengabe berritu ere egiten da. Etengabe indarberritzen eta osatzen da gure izatea. Urrats baten ondoren bestea egiteko ahaleginak higatzen bagaitu ere, aurrerakada bakoitzak indartzen gaitu eraberean. Garaipen ttipi bat baita aurrerakadarik nimiñoena ere. Eta indartze sendoaga gertatzen da azkenean. Geure inguruneko eguratsean, gure itxaropen eta gogoan sendotuak sentitzen gara aurrerakada bakoitzean. Urrats bakoitzak hurrengoa egitea eskatzen du; beste pauso baten egitea eskatzen du aurrerakada bakoitzak. Indar eta itxaropenak bildu eta pilatzea eskatzen du irautea-

ren beharrak berak. Bestela ezinezkoa litzateke tunelaren azkeneraino iristea, amets txoro eta bete-ezina litzateke txango honen hastea ere. Argiguneak beste dimentsioa duen mugara heltzea soilik ez da aski. Osorik baino areago, indarberrituak eta sendotuak iritsi behar gara tunelaren amaierara; froga latza gaindituruk, zuhurtziaren adorez jantzirik iritsi behar da txangoaren azkenera. Arerio guztiei aurre egin behar zaie norberaren osotasuna atxikitzeko. Bi indar daude hemen aurrez aurre borrokan; bi indar jazartzen zaizkio elkarri: izainaren indarra alde batetik eta gurea bestetik. Izainarena ainakoa izan behar da, gutxienez, gure indarra ere. Gizarratoi, ormatzar, egurats kutsatu hau, hemengo hezetasun gaiztagina eta eraso guzti hauen osotasunari aurre egiteko adinakoa izan behar da gure finkotasuna eta erantzuna ere. Tunel edo galeria hauetakoren batetan amaraun sarean harrapaturik higatu eta ezereztuak gelditu nahi ez badugu gogor jo beharra daukagu; gure indarrez jo behar dugu aitzina, ezin da beste nonbaitetik etor dakigukeen laguntzaren baitara utzi zeregina. Laguntza baino gogorragoa izango da erasoa, nahiz eta laguntza apur horiek aboro balio eta hagitzez gehiago eskertu. Etengabe gugana botatzen dute gerora amaraun higatzaile bilaka daitekeen sare ikustezina. Behin eta berriz puskatzen eta desegiten ez badugu mendera ezina bilakatuko zaigu amaraun hiltzailea. Lehenengo geun ahula besterik ez dena amaraun-sare gotor eta xahutzaile bilaka liteke gerora, eta bere baitan bil gaitzake gure ahulezia ediren baleza. Horregatik jazarri behar gatzaizkie arerio guztiei. Eta gizarratoiei ere aurre egin behar zaie ezerezteraino, edo izainaren erraietako zati bihur gaitezen arteraino higa gaitzaten ekidin behar badugu. Aurre egin behar zaie orma hauei ere; izainaren osotasunari egin behar zaio aurre, inoiz amorerik eman gabe gainera. Izaina osatzen duen izate bakoitzari jazar behar gatzaizkio. Leku honi eta hemengo jagoleei aurre egingo ez bagenie, gure gaineratuko lirateke, olde bizkorrean gaineratu ere, berehala, denak batean. Gutako bakoitza ezerezteraino

erasoko gintuzkete. Egurats mikatz eta gaiztakin hori indartuko litzateke lehenik, gero amaraun sarea itsuago eta gotorrago egingo litzateke, gizarratoiak ere gure gainera etorriko lirateke gure ahuleziaz ohartzean. Orduan ez luke ezertarako balioko bizirik irauteak, indarrik gabeko bizia litzateke orduan. Tunelaren amaierara iritsirik ere, errautsa haizetan bezala barreatu eta aienatuko ginateke beste erresumako argiaren dimentsiotan. Leku honetako eguratsak barnemuinetaraino jaten bagaitu ezereztuak desengingo gara txangoaren azken pausoan. Ez dugu utzi behar egurats honek jan gaitza: Aurka egin behar zaio izainari. Gure begirada eta garraisiz aurka egin behar diegu gizarratoiei; gure inguruneko eguratsari zangarki eta tinko eutsiaz. Izainaren erraiei erasoko diegu; gure ibilbideotako ormatzarrak, orma likatsu eta hurrupari hauek, ostikadaz eta ukabilkadaz kolpatuko ditugu eta ostikadak emanaz hankak eta oinak mintzen zaizkigunean sorbaldarekin bultzatuko diegu eror daitezen arte. Hortzekin moztuko ditugu gizarratoien zilbor-hesteak, eta izainarekiko lotura puskatzen badiegu negarrez eta aieneka hasiko dira berehala. Zilbor-hestea ebateak galduko ditu piztitzar nazkagarri horiek. Ostikoka erasoko diegu banaka harrapatzen ditugun gizarratoiei ere. Talde haundietan gaineratzen bazaizkigu, berriz, txoko edo bazterren batean babestuko gara erasoari eusteko. Oihu egingo diegu jotzen gaituzten bitartean. Bizkarra eta burua makurtu eta gogor eutsi beharko zaio; tinko iraungo dugu malkoak aterarazten dituen pozoin mikatz hori botatzen digutenean ere. Malkoak eta aieneak ixuriko ditugu, baina ez dugu amorerik emanen. Berriro altxako gara eta aurrera jarraituko dugu gure txangoan. Indarberrituak altxako bait gara zafraldi bakoitzaren makurralditik; aitzinago eta ausartago jarraituko dugu geure txangoan.

Gizartean zehar doa munstroa, eta gizarte osoak daki bere berri; orok du berarekiko itzala, edonork berarentzako begiramena. Nehork ez du ahanzturan galdu izainaren izatea. Berarentzako leku berezi berezia ematen dio beti gizarteak, eta ixilpean baizik ez zaio merezimendurik eztabaidatzen. Ixilpean gordetzen dira munstroarekiko irainak. Goraki gurtzen dute gizarteko izenik aipatuenek, laudorioz eta gorespenez ferekatzen dute munstroa gizartearen ordezkari botereetsuenek. Ferekatzen dute, eta azala leuntzen zaio, eta larru ederra ageri zaio izainari. Kanpotiko igurtzi eta losintxek erraiak gotortzen dizkio. Gizaldra haundi eta ugarien tartean zehar doa mamutzar erraldoia. Zintzoa da gizartea, eta hainbat zintzoago diren gizaldrez osatua dago. Bere azalaren osotasunean sentitzen du izainak gizartearen zintzotasun leial paregabea; bere errai eta kiriorik gordeeneraino iristen zaio gizartearen mirespen eta gurtzeek sentierazten dioten hozkirri gozoa. Hanpatzen da gizarteak demaion maitasunean; miresten dute gehienek, eta ixilpean maiseatzen gutxi batzu. Gizarteak egiten dizkion laudorio eta igurtzi guztiek biziki indartzen dute izaina; sendotu egiten dute. Jaialdi eta festa haundiak eskaintzen dizkiote munstroari, abestiak kantatzen dizkiote, musika ezberdin eta ozenez hornituriko abestiak eskaintzen dizkiote eskerronezko omenean. Eztiz

eta ardoz asetzen dute munstro erraldoia, giza-koipez igurzten diote larrua eguzki beroak erre ez diezaion. Erritual haundietan kalitzen dituzte herriko nerabeak, gero bihotza ateratzen diete, eta, odol zerbela tantaka, munstrotzarrari eskaintzen dizkiote nerabeen haragi bigunak. Gizarte zintzoaren gaitsezpenez, aho batezko erabakiz kalitzen dituzte hautatuak, eta lege jainkotiarrez eta sakratuenen izenean, izainari eskaintzen dizkiote sein sotilen haragiguriak. Ardotan egosten dituzte haien bihotz gazteak erritualaren goren puntua ospatzeko, eta inork ez du haintzakotzat hartzen ama baten negarra. Festa haundiak eskeintzen dizkiote bere joanean; gizaldra ugariak parte hartzen dute erritual zoroetan. Gutxi batzu, jaialditik at, bazter baterara aldeginaz gelditzen badira eta jaialdian parte hartzerik nahi ez badute ez da nabaritzen hain haundia den gizartearen mozkorraldian. Haien ez izatea ez da maila haundian nabaritzen. Dantza eta jauzi egiten du orok, guztiek abesten diote izainari, eta batzu dantzan ari ez badira, norbaiten ahotsik entzuten ez bada eta izainaren gorestetik alde egiten badu, ez du garrantzirik; norbait hori ez da engoitik gizartearen partaide izango, gizaldra bakoitzetik eragotziko dute parte hartzen ez duena, eta hurrengo erritualean bihotza aterako diote ahal izanik ardotan egosirik munstroari bezuzatzeko. Leial ez diren haien bihotzak urratu eta etengo dituzte. Amen besoetatik harrapatuko dituzte haur negartiak, gizartearen ordezkari aipatuenak jaikiko dira eta izainaren goresmenezko hitzaldiak aldarrikatuko dituzte. Gizarte zintzoaren babesleak iratzarriko dira erritualetako zuzendari, prestaketa guztien eragile. Behin eta berriz antolatuko dituzte jaialdi haundiak; opari ederrenak emango dizkiote izainari. Eta hazi egingo da munstroa, zoramen malkoak ixuriko ditu, bentosa guztietatik hurrupatuko du asebete nahian, baina izaina ez da inoiz asebetetzen. Gehiago eta gehiago nahi du beti. Eta gizarteak aboro emanen dio; ozenago abestuko dizkio bereziki berarentzat idatziriko ahapaldiak, jauzi ugari eta handiagoak egingo dizkiote dan-

tzariek. Ezti lodiagoz eta ardo zaharragoz elikatuko dute, eta garbiago izango da izainaren larrua igurtzitzeko erabiliko den giza-koipea. Nerabe gazteagoak kalituko dituzte eta erritualak ugarituko. Gizartean aitzina jarraituko dituzte eta erritualak ugarituko. Gizartean aitzina jarraituko dio munstroak; igaroko ditu hiri eta hiriburuak, eta gizaldra ugariak inguratuko zaizkio bere joanean. Ez da inoiz geldituko atseginaldi bat hartzera, horixe baita galduko lukeena. Izainak aurrera jarraitu behar du beti, eta bera bere kabuz joateko gai ez denez bultzaka eramango dute bere gurtzaileek. Oihuz eta zantzoz egiten dio ongietorria bidean aurkitzen duen gizaldra bakoitzak. Gizarte zintzoaren ordezkari aipatuenek agurtzen dute lehenik, eta heurak gidatzen dute bidean gal ez dadin, edo elikaduraren gabeziaz ez dadin higa. Munstroaren asealdi bakoitza nozitzen dugu galeria hauetan; bere erraiak indartzen direnean adoretu egiten baitira gizarratoiak ere. Hatsaldi haundiekin arnas hartzen du izainak, eguratsa pozointzen eta trinkoago bilakatzen da bere hatsaldi bakoitzean, likatsuago egiten da, ilunago bihurtzen dira igarobideak; ilunago eta hotzago. Bere joanaldi oldarkorrean egiten diote laudorio eta gorespen bakoitzaren eragina heltzen da galeria eta pasadizo hauetara. Bentosen indar hurruparia jasaten dugu gure soinaren atal bakoitzean eta murmuinetan ere. Pasabideak estutu eta zabaldu egiten dira tarteka, bortizki higitzen dira batzutan. Eta bi ormen artean kolpatzen gaituzte. Dantzan eta jauzika bezala hasten da izaina bera ere, bozkarioz, gizarte zintzoak egiten dizkion eskeintzekiko eskerronez. Bere hezurdura osoa astintzen du mamuak, bere erraiak estutu eta laxatu egiten ditu gozoki elikatzen denean. Gizarratoiak bizkorrago bilakatzen dira, indartsuago. Begietako leinurua biziago egiten zaie, pizti lotsagabeago bihurtzen dira gizarratoi nazkagarriak. Gizartearen ordezkari diren horien hitz bakoitzarekin hanpatzen dira pizti okatzagarri hauek; orma hotz lizun hauen kontra hazka egiten dute bizkarrarekin, leku madarikatu honetako mehatsu bakoitza haundiru egiten

dute izainari eskainiriko erritualekin. Baina, badira gizartearen osakin-izun batzu ere. Badira osoki gizartearen partaide ez diren gizaldra batzu, izainari eskaintzen zaizkion erritual eta goresmen horietatik aldentzen direnak. Badira ixilpean munstroa maiseatzen eta gaitsezten dutenak. Ez dituzte onartzen gizartearen ordezkari goraipatu omen diren haiek, eta ez dute gizarteko zintzotasunean murgiltzerik ere nahi izaten. Gorrotatzen dute izaina eta gaitsezten dituzte berari eskaintzen zaizkion jaialdiak ere. Harrika erasotzen diote izkutuko aldetik, geziak ihaurtikitzen dizkiote eta makilkadaka ekiten besterik ezin dutenean. Abesti gozoen ordez gorrotozko garraisiak botatzen dizkiote munstroari, korrika ihes egiten diote goresmenezko dantzak egin ordez. Eta, handik bat hortik beste bi, izaina gorroto dutenetarik talde haundixea biltzen denean ausartki inguratzen zaizkio oihu eginaz. Irainak eta harriak botatzen dizkiote, eta harrikada bakoitza nozitzen dugu galeria hauen barnean. Oihu bakoitzaren oihartzuna heltzen da igarobide hauetara, eta ormak meheago egiten dira, eta dardara egiten dute izainaren kirioek. Irain bakoitzaren mezua iristen da gizarratoiengana, eta uzkurtu egiten dira koldarturik. Gizaldra ttipi eta bakan horien garraisiak iristen direnean itzali egiten da gizarratoien begietako leinurua, aieneka hasten dira izuturik. Ilunbeko hiri honetaraino heltzen da izainari eginiko erasoen eragina; dardarka hasten da guztia, zalantza egiten du arerioak, iluntasuna ez da hain iluna, eta eguratsak garbiako dirudi. Alderantziz giratzen dira mehatxuak, eta, ahuleziak zaurituriko piztitzarra dirudi izainak; gizarrtoiak ia errukarri bilakatzen dira, heuren izurriteak jandako pizti higuingarriak.

Ni txikia nintzenean gauak ilunak izaten ziren. Udazkenetakoak dira oroimenean gordetzen ditudan lehen gauak. Haize hotz eta bizkorra ibiltzen zen gau haietan eta oihu zorrotzak barreatzen zituen. Gauezkoen oihua nagusitzen zen udazkeneko gau haizetsu haietan. Logelara joaten nintzenean ohantzetik ere entzun nezakeen haizearen ziztua; tapakien artean gordeago egiten nintzen orduan eta ezin adierazizko zoriona sentitzen nuen. Zer goxooaren goxoa! Lehio aurreko artosoroaren firfira entzun zezakeen, eta, han nonbait, urrutixe batean zegokeen betizuaren zintzarri hotsa ere iristen zen niganaino ekaitza handiegia ez zenean. Gau ilunetako haize indartsuak iratzartzen zituen soinu guzti haiek, eta oihuak ozenki altxatzen ziren haizearen kulunka bortitzetan. Soinu eta irrintzi guztiak nahasten zituen haizeak. Baina, bereziki gauez goratzen ziren oihu eta irrintzi guati haiek; eta egunez berdin entzuten baziren ere, gauak behin behineko xarma egozten zien soinu haiek. Soinu guztiak ziren ziren eder baina, bazen han, etxetik goraxeagoko haitzondo batetara baztertua, sasi muntzo josi bat. Sasi multzo josi hartatik soinu eta oihu bereziak ateratzen zituen, gau ilunetan, udazkeneko haize bortitzak. Sasi multzo josi hartan zegoen, artile mototsa bezala harrapatua, erdi lotan sorgorturiko bertso bat. Eta, gaueko haize zorrotzak esnaratzen zuenean, nega-

rrez kantatzen zuen bertso hark; oihu eta negar egiten zuen bertsoak. Nere ohantzetik entzuten nuen sasi multzo hartatik haizeak jalgitzen zuen soinua, eta ezin asmatu nuen soinu haren mezurik; ezin uler haizearen orraziak sasitik ateratzen zuen baladaren negarrik. Beste oihu guztiekin nahasten zen sasi multzo hartatik jalgirikoa, baina soinu berezia zen; guztietan ederrena, dohain bereziz jalgitzen zena nere xoramenerako. Eta irrika biziz sentitzen nuen irrintzi hura aditu nahia. Egunez begiratzen nionean sasi multzo josi bat baizik ez nuen ikusten haitzondo hartan, betiko sasi multzoa zegoen han. Baina gauean oheratzen nintzenean berriro entzuten nuen sasitarte hartatik ateratzen zen doinu berezia. Berriro edukitzen ninduen lokartu ezinik. Aitonak esaten zidan gauezkoen irrintziak zirela haiek eta lo egiteko. Baina nik ez nuen lorik egiten ahal. Beste guztien gainetik jaikitzen zen sasi hartatik haizeak ateratzen zuen irrintzia, eta nik, lokartzera etsi gabe, soinu hura entzuten irauten nuen beti zer adituko zai. Gelako ilunpetan ohean etzana, begiak zabal zabalik nituela egoten nintzen luzaro, soinu berezi hari adi, nekadurak menderatzen ninduen arte. Udazken gauetan haizea zebilenean, zoragarrizko lotua sortzen nuen irrintzi haiekiko; beti zai eta irrikaz egonarazten ninduen lotura hertsia sortu zitzaidan. Halabaina, gau ilun haietako batez, bestetan baino haize azkarragoa zebilen gau ilun batez, oihu ozena ateratzen zitzaion sasi multzoari. Eta adi adi nengokiola, ohetik jaikitzeko kinkan, irrintzi adigarri bilakatu zen sasiartean harrapaturiko bertsoaren soinua eta, nere bihotzaren taupadak baino doi bat ozenago, «aaagiann, aaagiann»...aditu nuen. Eta berriro adiezina bilakatu zen soinua. Irrintzi uler ezina zen berriro haizeak zerabilen garraisia. Eta inoiz baino larrituago gelditu nintzen hitz haien jarraipenik entzun gabe. Haizearen ziztua baizik ez zen aditzen jadanik. Beste egun berri bat argitu zuenean beste ikusaldi berri bat eman nion haitzondoko sasi multzoari, egun berri bakoitzean begiratzen nion, haitzondoko sasi multzoari, egun berri bakoitzean begi-

ratzen nion, eta egun bakoitzean ikusten nuen betiko sasi multzo soila. Haizerik ez zen gauetan ez nuen inolako oihurik entzuten, ez zen inolako irrintzirik edo haien oihartzunik hedatzen eguratsean. Mezu erratu guztiak lotan zeudela zirudien gau bareetan. Guztiak ixilik irauten zuen, eta nik ere ez nuen edukitzen soinu harrigarri hura entzuteko itxaropenik. Aitonak beti erantzun berdina ematen zidan, gauezkoen ihardunak zirela haiek eta lo egin nezan aginduz. Baina gau ilunetako haize azkarra berriro somatzen nuenean gero eta zaletuago nengokien soinu misteriotsu haiei. Nolabaiteko izuz eta erakarpenez xaramelatzen ninduen sasi multzo hartatik haizeak ateratzen zuen soinuak. Zai edukitzen ninduen haizea zebilen gau bakoitzean. Gau haietako beste batetan, begiak zabalik zai nengoela, berriro aditu nuen sasiko bertsoa irrintzi adigarri bilakatzean «eegun batezz»...abesten. Eta ia jauzi batez jaiki nintzen nere ohantzetik leiho ondora. Eta leihotik jarri nintzaion haitzondoko sasi aldeari so, hartzara ziztu bat baizik ez zenari adi; haize ziztua besterik ez zena berriro bertso bilaka zedin otoika. Hoztu nintzen leiho ondoan zutik. Hotzak dardarka nengoen. Baina leiho ondoan nirauen halere, sasian harrapaturiko bertsoaren oihua berriro entzuteko egarri. Hotzaren dardarak soin osoa inarrosten zidanean, eta etsipenak menderatua, ia oheratzeko kinkan nengoela berriro entzun nuen haizeak sasitik askaturiko irrintzia «eegunn batezz, jeeikiko diira» kantatzen. Eta egun gehiagotan ere doi doi entzun ahal izan nituen hitz horiek, haize ziztuarekin nahastekatuak eta loturarik gabe. Hutsik egin gabe egoten nintzen gau ilunetako haize bizkorrari adi, beti zer entzungo, nolabaiteko sorginkeria zirudien gertakizun hartatik zer sor zitekeen asma ezinik. Ixilpeko eta maitagarri nituen gau haizetsu haiek. Haiekiko lotura erne zitzaidan barne-muin gordeenean. Luze joaten zitzaizkidan haizerik gabeko denboraldiak, hutsune bat nozitzen nuen sasiko bertsoa entzuten ez nuenean. Hitz bakar batzu, eta noizbait gehiago entzuteko itxaropena aski zitzaizkidan, osoa

inoiz entzungo ez banuen ere. Baina betirako inoiz ez dira desagertzen gauilun haizetsuak. Denboraldi bat baretsu igaro ondoren berriz hasi ziren gauezko haize bizkorrak; berriz entzun nenzazkeen oihaneko zuhaitz haundien kukunka firfiratsuak, astosoroko hostoen igurtziak eta alanbreetako ziztuak. Berriro iratzarri zen sasiko bertsoa, lahar artean harrapaturik negar egiten zuena. Askatu nahirik bailegoen oihu egiten zuen maiz, laguntza eske larri dagoenak bezala. Baina uler ezinezko oihuak egiten zituen gehienetan, soinu bat baizik ez. Halere, beti zai eta beti itxaropen nengoela, berriro hitz adigarriak abestu zituen sasitartean harrapaturiko bertsoak. Haize hotz eta bortitza zebilen gaurik ilunenean, nik entzun nuen haitzondoko lahar artetik ateratzen zen irrintzia «egun batez» kantantzen, eta etenaldi baten ondoren «jaiikikoo diira» oihu egin zuen eta leihora irtena nengoen ordurako, harriturik, xoratzen edo beldurrez, eta sasiarteko bertsoak haizetara jalgiaz jarraitu zion»...tirano arrotzen hiltzeko...»

Berriro etorri zaizkigu gizarratoiak; berriro ere, asko uste ez genuenean, talde handian gaineratu zaizkigu piztitzar hoiek. Leku honetako gela batetan, ilunpe beltza izan da sarraski latzaren sopikun isila. Gaua edo ilunbea da gehienetan joku eta ekintza zikin guztien lekuko; gauez ateratzen dira heuren zuloetatik piztirik zekenenak, ilunbean gertatzen dira traizioak eta mendeku zikinak. Bakoitza bere ametsean geundela etorri dira oraingoan ere. Lotan geuntzan gelak zuen ate bakarretik sartu dira gizarratoiak, baina haiek sartu direnean beste ate haundi bat ireki da gelaren bestaldean; inola ere ez zirudien han aterik zegoenik, orma besterik ez zitzaion ageri eta bilakatu da bat batean. Eta galeria luze bat agertu da ate ireki berritik aurrera. Oso azkar gertatu da guztia; etzanda geunden tokietatik jaikitzeko astirik gabe gainera etorri zaizkigu gizarratoiak; sekulako oldean etorri dira. Hatzaparka eta ostikoka, makilakadaka eta garraisika hasi zaizkigu berehala, eta jaikitzeko astirik gabe aurre egin diegu lehen kolpean. Ahal izan dugun eran eraso diegu, eraso edo geure buruak gorde bederen, ukabilkadak eta garraisiak tartekatu ditugu. Eskurzartak eta orroak nahastu dira zalaparta latzean; latzak dira derrigorrezko isilpean jasaten diren zafraldiak. Haien begietako argitxoak ikusi ditugu gela ilunean, ipurtargiak bailiran. Kirats sarkorra hedatu dute gela osora,

begibiak mintzen dituen pozoin mikatz hori ere bota digute. Deabruen erasoa eta gatazka. Lerdea zerieten ezpain ertzetatik, heuren gozamen zeinu ageria. Gogor saiatu dira makilkadaka eta hatzaparka. Gogor egin diegu geuk ere; ostikoka eta ukabilkadaka, garraisi eginaz edo irainka besterik ezinean. Bakoitzak ahal izan duen eran babestu behar izan du, ate ireki berririk ateratzeko modua egin dugun arte. Irtenbide bakarra zegoen, haiek sartu direnean gelaren bestaldean ireki den atea hain zuzen. Harantz bultza gaituzte derrigorrean, Azkenik, ate horretan denok igaro garenean, itxi egin da berriro atetzar haundia; lehen geunden tokitik guztiz bereiztuak utzi gaitu ate madarikatu horrek; atea baino kolpe haundiz erori den orma zirudien gehiago. Gizarratoiak atzean gelditu dira, orma edo ate horrek bereiztuak: Galeria luze bat azaldu zaigu aurrean eta bideari ekin diogu estuasunetik atereak edo baretuxeak sentitu garenean. Baina, aurrera abiatu eta berehala, beste ate pizu bat zeharkatu da gure aurrean, sorginkeria gaiztoren baten indarrez zeharkatu ere, eta inolako irtenbiderik gabe gelditu gara ezkaratzean harrapaturik; galeria estu horretan beste ate bat zeharkatu da gure taldea erdiz erdi banatuz. Ate zeharkatu berria kolpatu dugu, baina gu konturatzerako beste ate bat hertsi da gure lagun taldea aurdenduz, eta geroxeago beste orma lodi bat erori da, atea bailitzan, laurdenak erdibituz. Ateak eta ateak erori dira eta zeharkatu dira, eta batzuei ostikoka eta hatzaparka eraso diegunean orma gehiago erori dira. Azkenean, alde guztietatik atez, ormez hobeto, inguraturik, lagun gutxiko taldeetan banatuak gaudela konturatu gara; sorginkeria madarikatuz sakabanatu gaituzte. Abereak kaioletan bezala banatu gaituzte; lau-bosteko taldetan batzu, gehiagoka izango dira besteren batzu, eta, agian, baita bakarka geratzeraino banatu dituztenak ere. Gela txiki eta ugarietan banatu ondoren, galeria luzeak ireki dira gure aurrean. Taldetxo bakoitzari galeria bat zabaldu oigute, besteengantik aparte. Ibilbidean aurrera jo dugu, baina ez besten aztarrenik ageri. Talde

murriztu bat gelditu gara soilik. Gizarratoiek ez digute atzetik jarraitu; heuren zeregin nagusia betetzat jo dute atetzarrean aurrera bidali gaituztenean. Segada zikinean harrapatu gaituzte, itsumustuan harrapatu ere, hain azkar gertatu baita guztia. Inoiz baino okerrago gelditu gara oraingoan; elkarrengandik bereiztuak, atzera eginaz elkarrekin geunden tokira itzultzeko bideak hertsirik. Inoiz izan dugun behaztoparik gaiztoena dirudi oraingoak; orain arte elkarrekin geunden gutxienez. Guztion indarrez edozein arazo gaindi genezakeen. Baina orain zatituak gaude, bai gu eta bai gure indarrak ere zatituak daude orain; galeria ugaritan zatituak. Agian oztopo eta arazo guztiak izango dira okerrenak; badaiteke gertatzen direnean arazo guztiak izatea arazorik larrienak. Badaiteke lehen ikusaldian hori gertatzea, eta beste behaztopa berri batekin trabatzen garenean ere guztietan larriena iruditzuko zaigu azken hau. Hori izango da beharbada orain gertatzen zaiguna ere, horixe besterik ez da izanen apika. Halabaina, biziki sendimendu ospina sortarazten du hiri madarikatu honen kaleetariko batetan gisa honetan galtzeak. Arras higatzen du galeriotan lagunengandik honela sakabanatzeak. Badakit alboko galeriaren batetan oso hurbil egon daitezkeela beste lagunak. Denak ez bada ere talderen bat egon daiteke orma honen beronen osteko aldean, zehe batek baizik bereizten ez gaituela, baina ze zehe! Ez dut hurbil edo urruti dauden ziurtasunik ere, gainera, eta ez dakit zein inguru edo aldetan egon daitezkeenik ere. Nola ote daude, bestalde? Norantz jo ote dute? eta, onik ote dira? Hainbesteko taldetik lagun gutxi batzu baizik ez gara gelditu gure taldean, basamortuan dabilen itsua baino galduagoko zorian. Eta lagunen bat, besterik gabe, bakar bakarrik gelditu bada, nola izango ote da? Zertzu ez dizkiote egingo piztitzar horiek! Gu bezain kezkatuak egongo dira besteak ere; gu non ote gabiltzan galdetuko diete elkarri. Atzera egiteko bideak itxiko zitzaizkien haieri ere, eta guk bezala, galeria ezezagun bat izango dute aurrean, beste biderik hartzeko aukerarik gabe. Orain uler-

tzen dut gizarratoien xedea hain supituki etortzean. Bai, heuren zeregina ongi ausnartuta etorri dira, urde alenak. Han bertan, lo geunden tokian zafratu behar gintuztela zirudien, baina ez dira horretara etorri. Sakabanatu egin nahi gintuzten bat barean etorrita, eta atetzar hura hain lagungarri zabaldu da. Taldearen osotasuna zatitu eta zapuztu nahian etorri dira. Gu zatitu eta izainaren erraietan zehar talde txikietan ohiltzera etorri dira. Horregatik etorri dira iluntasuna haundiena zen garaian eta lo geundela ikusi dutenean, beti bezala. Piztirik maltzur eta zikinenak bezala jokatu dute. Eta orain hemen gaude; gu zein aldetan gauden ez dakigula eta lagunen berririk gutxiago, gure taldearen zatiak non eta nola diren susmorik ere gabe. Gure hau bezalako galeriaren batetan egongo direla besterik ez dakigu haietaz, eta aurrera egiten saiatuko direla uste dugu halere. Aurrera egin behar baita beti. Gizarratoiak ere hurbilago eta ausartago ditugu orain. Adoretsuago bilakatu dira banatu gaituztenean. Ageriago erakusten dute heuren poza. Algara ozenagoak egiten dituzte, eta kirats sarkorragoa botatzen dute ingurune guztira. Indartu egin dira gure taldearen txikitzearekin. Bistan dago heuren helburuetatiko bat lortu dutela; argi dago aspalditik zebiltzala honelako zerbaiten bila. Horregatik etorri dira hain ausartak, kosta ahala kosta gure taldea sakabanatzera. Orain errazkiago zetiatuko gaituzte. Hori usteko dute, bederen, gizarratoiek. Gure zatitzearekin borrokaren erdia edo gehiago irabazia dutela pentsatuko dute ziur aski. Horregatik, hurbilagotik setiatuko gaituzte. Talde txikietan gaudenoi, eta bakarka inor gelditu bada bereziki, ez digute inola ere meniarik emango. Nortasunik gabeko abereak izateraino makurrarazi nahiko gaituzte. Eta heuren agindupeko aberetxoak gatekeenean irri egingo lukete gurekin jolastuaz. Baina, ikusgai dago hori lortuko dutenentz; borrokaren arauak beste galga batetan ezartzea baizik ez dute lortu oraingo saioan. Gizarratoiak ugaritu eta indartu egin direla dirudi, baina ugaritu egingo da gutako bakoitzaren indarra ere. Gu-

re erantzun ahalmen osoarekin arre egingo diegu; gogorrago joko dugu guk ere. Talde haundiaren babesak gutako bakoitzarengan sorgorturiko indarrak iratzarriko ditugu, eta aurrera joko dugu gizarratoi madarikatu horien gainetik, eraso guztien gainetik tunelaren amaierarantz.

Talde murriztuetan goazen arren ez diogu aurrerantza jarraitzeari utzi, eta pentsatu ere horrelakorik. Lehentasunik premiatsuena du aurrera jarraitzeak; gutxika bada ere aitzina joan behar da. Areago oraindik, aukera bakarra da beti aurrera jarraitzea, ezerezean suntsiturik ezabatuko gara bestela. Badirudi urduri dagoela izaina; egonezin nabaria erakusten dute gizarratoiek ere, eta gure onuragarri da horien ondoeza. Horien lasaitasuna litzateke gure kezkagarri; nagusitasun eta botere zantzuak bait litezke izainaren eta gizarratoien barealdiak. Ohorezko erritualak ezezik harrika eta irainka egiten dizkioten eraso aldiak ere ugaritu egin dira agi denez. Ormatzarrok dardarka hasten dira batzutan, eta beldurtuak dirudite gizarratoiek; txoko ilunetan kuzkurtzen dira gure taldea hurbiltzen somatzen dutenean. Talde txikitan goazela alderantziz gertatuko ote zen beldur baginen ere, talde txikietako guztiok galeria ezberdinetatik erasotzen diogu, eta eraso gehiegiren zauria somatzen du, nonbait, izainak. Baina gogor dago oraindik, ez da batzutan dirudien bezain ahula; geure buruari iruzur egitea litzateke bestela uste izatea. Oker geundeke galeriotako jaun eta jabe ahalguztidunak garela pentsatuko bagenu. Munstroari opari ugariak eskaintzen dizkio gizarteak, eta ez dute inola ere galtzera utzi nahi, guztiz alderantziz baizik. Horregatik dabil indartsu. Eta oso da indartsu ere, batzutan ahul dirudien arren. Giza-koipez igurtzirik sendatzen dizkiote harrikadek eginiko zauriak. Eta ibilbide ilunotan guk egiten dizkiogun zaurietatik odol jarioka hasten bada ere, berehala agertzen dira gizarratoitzar horiek eta osatzen dizkiote errai urratuak; urradurak miazkatzen eta ferekatzen dizkiote gizarratoiek, ez diote uzten zauria osatu arte. Gainera, harrikada eta urratu horiek ez dute beti guk

nahi beste zahurtzen munstroa. Txango honetan aurrera jarraitzea bezain beharrezkoa da gizarratoi eta izainaren ahalmenak tai gabe erasotzea. Erasoaldi eta hatzaparkada txikiekin bada ere, beti aurre eginaz jarraitu behar dugu gure joana indartsu eta ziurra izango bada. Gero eta lan gehiago eman behar diegu zauri eta urratu horiek sendatzen, gero eta ugariagoak izan behar dute munstroak jasan behar dituen zafraldiak; harrikada eta urratu txikiak izan arren gero eta gehiago mindu behar dugu izaina. Eta gure aurrerakadarik nimiñoenak ere, gure urrats bakoitzak ere, mindu eta zauritu egingo ditu munstroaren erraiak; alderantziz eragitea, guri atzera bultzatzea baita bere helburua. Badakigu norantz goazen. Igartzen diogu zein den gure norabidea, eta, lehen unean arras galduak sentitzen baginen ere, orain badakigu, ziur jakin ere, gure lagunak ere hor doazela alboko galeria edo ibilbide horietan, eta guk daramagun norabide bera daramatela gainera. Entzuten ditugu haien pausoak eta ormei ematen dizkieten ostikada eta ukabilkadak. Entzuten dugu, era berean, gizarratoi madarikatu horiek gure lagunen bat bakarka harrapatzen dutenean ematen dioten zafraldiaren iskanbila. Eta nabaritzen dugu orma madarikatu hauen eta egurats itogarri honen sopikuntasuna. Eta, gizarratoien usai okaztagarri hori ia jasangaitz bilakatzen da heuren mendeku gosea asetzen dutenean, somatzen dugu nola kirats ustela galeria guztietan zehar hedatzen den. Zafraturiko lagunen garraisiak ere entzuten ditugu orma hauen osteko aldetik, eta orduan garraisika hasten gara geu ere, eztarria urratzeko ainako garraisiak eta oihuak ihaurtikitzen ditugu, ostikoka eta ukabilkadaka jotzen ditugu ormak. Ukabil urratu eta odolduekin jotzen ditugu ormatzarrok, txorkatilak minduta ere ostikoka jarraitzen diogu, agerian edo izkutuan diren gizarratoiei gaizki esaka eta irainka, eta zemairik ozenenak ere botatzen dizkiegu. Eta izainaren errai guztietan zehar hedatzen da durundioaren oihartzuna. Orduan zalantza egiten dute ormatzarrok, pitzadurak sortzen dira bazterretan. Eta hotzikarak

astintzen ditu gizarratoiak, hezurretarainoko ikara eta beldurra sartzen zaie pizti maltzur horiei. Belarriak lehertzerainoko zarata eta durundio horren liskarrari ihes egiten diote gizarratoiek, eta heuren txoko edo gordeleku izkutuetara baztertzen dira; zelata-leku gordeetara izkutatzen dira, guztiz asegabeko mendekua lagun. Gure lagun jipoitua bertan utzirik aldegiten dute izainaren erraietako izkutalekuetara. Orduan berriro jaikiko da gure laguna, zafraldiaren makurralditik berriro altxa eta aurrera jarraituko dio txangoari. Hurrengo bidegurutzean edo gela galduren batetan gure lagunen batzurekin topo egingo ote dugun itxaropenez goaz beti. Alboko orman lagunen batzuren ukabilkadak somatu zai goaz; beste galeria horietan, hain hurbil eta hain urruti doazen lagunekin elkartu nahiz. Ongi dakigu haiek ere itxaropen bertsuak dituztela, eta badakigu guztiok norabide berean goazela ere; tunelaren amaieran argiguneak beste dimentsioa duen erresumarantz goaz eginahalean. Batzutan, halere, ez da erraza zein galeria egokiena dateken asmatzen. Bidegurutze bat dakusaunean laisterka jotzen dugu haraino eta alde guztietara so egiten dugu, sakabanaturiko lagunen bat aurkitzeko ustetan, itxaropenez. Gizarratoi talderen bat aurkitzen dugu, ordea, maizenik, heuren kirats sarkorra darietela burdinotsezko zalapartan desagertzen direnak. Edo galeria luze eta ilunak ageri zaizkigu aurrean, hutsak eta hotzak. Pasadizo horien hasierak eta gelatzar guztiak miatzen ditugu parean igarotzean, eta batzutan atseginaldi bat hartzen dugu indarberritzeko, neke eta tirandura arintzeko. Gela horietako batetan gaudela orma joka somatu ditugu bestaldetik, gure lagunak somatu ditugu orma joka ari direla somatu dugu. Eta geu ere hasi gatzaizko ormatzarrari kolpeka, jotake, zulatu edo zerbait egin nahiean. Ostikoz eta ukabilez jo dugu orma, sorbaldarekin bultza diogu. Denbora berean bestaldekoek ere zartadaka aritu dira, gero eta gogorrago joaz; jo eta jo aritu gatzaizkio ukabilak odolduta ere. Eta halako batean ikara egin du gelako ormatzarrak,

iskanbilak zirauen bitartean areagotu egin da gizarratoien kiratsa, baina haien aztarrenik ez da inon agertu, izkutuan egon dira aieneka. Eta guk ormari zartadaka jarraitu diogu, gero eta bortitzago jo dugu orma, eta geure oinetara erori da errauts eginik, aiene ito bat eginaz erori da ormatzarra, hain gotorra zirudien harmora ezereztua gelditu da geure aurrean. Orduan aurrez aurre topo egin dugu hain era larraian gugandik bereizturiko lagun batzukin; berriro elkartu gara bi taldetxo. Oraindik beste talde batzu hor zehar barreiatuak dauden arren, ziurtasun eta itxaropen harri bikain bat gehitu diogu gure zutabeari. Inoiz baino bikainago izan da gure garaipena, eta izaina larriki zauritu dugu ekintza honekin. Bere goresmenez eskaintzen dizkioten erritual guztiek ere ez diote erabat osatuko egin diogun zauria, gizarratoi madarikatu horiek ere kiriorik gordeenean jo ditugu oraingoan. Izainaren galeraren hasiera izan daiteke hau. Bere onurarako eskaintzen dizkioten obari eta laudorio guztiek ere ez dute ahalguztidun bilakatzen munstroa. Ez halajainkoa!

Batzutan on da atseden harzea, eta soinari pausaldia ematen zaion bitartean burmunei eragin. On da geraldi bakoitzean gogoeta egitea, orainaz edo geroaz pentsa daiteke, edo lehena hausnartu. Irakaspen zehatzak ediren daitezke atzera gelditzen diren urratsetan; oharkabean igaro zaizkigun urratsak sarritan. Horregatik diot on dela eginiko bideari behako bat ematea tarteka. Eta orain gailur batetatik bezala dakusagu itsumustuan tunelean sartu gintuzteneko aldi hura. Burmuinen ahaleginez uki dezaket lehenbiziko sarreran nozitu genuen zirrara latza. Galeria eta ibilbide luze hauen hasieran emaniko lehen pausoen oreka-eza ere gogoratzen dut, hain bait ziren pauso zalantzati eta labainak lehenbiziko haiek. Mundu arrotz eta mehatxuz beteriko batetara ohilduak sentitu ginen tupustean; argiguneak beste dimentsioa hartzen duen mundu honetara ihaurtikiak; dimensio laburretako mundura boteak. Mundutxo hertsi eta mugatua, mugatua guztiz; sentimenduak ere gira-bira txikian baitabilzkigu hemen. Ezin haratago joanik, edo ingurune urrupariegia izaki, esparru laburrean gertatzen eta gelditzen da oro. Ez ditut hitz asko behar hemen gertatzen den guztia adierazteko. Txangoaldi luzea daramagun arren gertakizun bertsuak errepikatzen dira. Eihera-harriaren antzera itzuli eta itzuli dabiltza gertakizunak. Gertatzen diren bakoitzean berriak dirudi-

ten arren, zahar berrituak dira beti. Berdinak dira oso urruti gelditu diren gatazkak eta atzo bertan edo gaur jazorikoak. Bidearen leku ezberdinean gertatzeak bereizten ditu gertakizun horiek, eta denborak ere bereizten ditu. Bereizten ditu gertakizun bakoitzaren helburuak eta funtsak ere, eta, baita gertakizun horietako bakoitzak oroimenaren puzlean duen kokapen zehatzak. Baina gertakizun bertsuak dira; oso perpaus gutxikin aldarrika daitezke hemen sortzen diren sentimendu eta gogoeta guztiak ere. Behin eta berriz errepikatzen diren hitz berdinekin esan daitezke estekoak, eta tolesdura ezberdina daramaten arren, lehenxeago esandako esaldi bertsuak dira oraingo hauek. Hitz eta esaldien doinua da aldatzen doana, hitzek daramaten zentzua izaten da ezberdina; esana baino urrutiago doa esannahia. Baina amets egitea litzateke, zabalkunde edo haize berri bila, barano hurbilari itzuri egitea. Burutazio eta gogoetak ere murrizten eta marazten ditu leku honek, eta gogoeta deslaiei amore ematea laketgarri den arren, nolabaiteko erauki-hitza litzateke asaskapen bila amets antzu arinetara edo benazko oinarririk gabeko gogo-joanaldietara jotzea. Irteerarik eza onartzea eta, beraz, amildegian itzulerarik gabeko beherakadari esku ematea litzateke aieru eta amets hutsal horietan horditzea. Ilunbe honetan norabidea zuzentzeko beharrezkoa dugu gure ahalmen guztia. Hisiatuki jo behar dugu etorkizunaren bila, ongi baitakigu, jakin ere, etorkizuna hortxe dagoela zai. Hortxe dago argiguneak beste dimensioa hartzen duen erresuma, espazio ireki eta gutiziatua. Tunelaren bokalerantz jo behar dugu derrigorrez. Horretarako bildu ditugu hemen gaudenon indarrak eta eraiki dugu elkarrenganako abaroa. Eta abaro hori gorpuztu genuen ondoren; oinarri eta bermagai mardula den lagunartearen beroa eta itzala. Eta behin gorputz hartu zuenetik zutabe gotor bilakatu dugu denon arteko indarra, txango honetako behaztopa guztiak gainditzeko ezinbestekoa zaiguna. Orain gogoratzen dut ormatzar hauetako batzutan tindadura bitxiz nahasturiko beiratzar batzutan lagunen

aurpegiak, aurpegi sotil haiek, ikusi genituen lehen aldia. Gizarratoien irudizko tindadurak nahasten ziren arren irrifar eta deinu abegitsuak egin zizkiguten lagunen aurpegi ezagun eta laino haiek, eta gure izatearen sostengarri bilakatu zen haien keinu bakoitza. Gerora ere, gure bidaia nekosoan, tarteka topo egin dugu halako beiratzarrekin, eta berriro ikusi ditugu aurpegi ezagunak, lagun maitatuen keinu eta irrifar adore emaileak. Beste erresumako lagun eta kideek ez gaituzte izainaren erraietan galtzera utzi; horren lekuko izan dira beiratzar horietan tarteka tarteka, inoiz abandonatu gabe, agertu zaizkigun aurpegi zintzo eta maiteak. Beste erresumakoek hona ihaurtiki gintuzten arren, ez gintuzten, ordea, hango guztien onespenez gaitzetsi. Ez gintuen guztien bultzadak bota; eta gutxiagorik ere, horren seinale dira izainaren aldizkako aiene eta ahuleziak. Gero eta ugariagoak dira eta gero eta larriagoak dirudite munstroaren samin zantzuak. Txango honetara ostikoka bota gintuzten haiek dira izainaren babesle; haiek ematen diote elikadura eta sendatzen dute gaisoaldietan. Sendatzen saiatzen dira bederen. Munstrotzar hau dute heuren kuttuna. Eta gizarratoiak dira galeria hauetan kokatu dituzten heuren ordezkoak. Erritual haundiak eskaintzen dituzte gizarratoi eta izainaren goratzarrez, eta gizartearen ordezkaririk aipatuenek egiten dizkiete ohorezko gorespenak. Batzutan arras ulergaitza dirudi bilbe katranbilatsu honen tolesdurak. Batzutan askaezinezko korapiloa dirudi, edo sinestezina ematen du ageriegia delako. Gizarratoiak higuingarri eta koldarrak badira, are nazkagarriago dira hauengan heuren ordezkaritza uzten duten haiek, are arbuiagarri eta zekenago dira izaina goresten eta laudatzen duten haiek. Gure suntsimena lortu nahi dute munstroaren indartzearekin. Gure izate eta nortasuna zapuztu gura dute gizarratoien bitartez. Baina munstrotzarra ez dago, engoitik, bere sasoi zangarrean; harrika eta oihuz, gaizkiesaka eta mehatxuka dabilzkio gizartearen zatiak: Bere erraiak urratu dizkigu galeria hauetan, beldurrez zaurituak daude gizarratoi maltzur ho-

riek. Noizbehinka jazotzen diren gertakizun horiek ez dute behin behineko pizurik; izainaren aldizkako zalapartak ez dute zuzenki bere sendotasuna adierazten, ezta bidaiaren latza erakusten ere. Gertakizun handi eta txikiek osaten dute, guztien arteko loturaz eta batasunez erakutsi ere, txangoaren astuna. Osotasunak demaio pizua. Zama guzti hori jartzen da gure aurrean, oztopo bat agertzen zaigunean ere xedera oso bat dago horren ingurunean. Ezin dira bereiztu gizarratoiak eta izaina, edo ormak eta egurats zikin hau, edo Herioren taigabeko presentzia eta iluntasun beltz hau; horietako bat argertzen zaigunean, eta besterik ageri ez arren, hor daude beste mehatxu guztiak ere; hementxe daude, geure ingurune hurbilean present. Mehatxurik ageri ez denean, berriz, are nabariago nozitzen da haien zemaia. Gelatzar haundi batetan barretuak eta amaraun loditan bilduak higaturiko gorpu haiek ere gogoratzen ditut, gordinki gogoratu ere. Behin eta berriz, Herioren sorginkeria iruzurtia agertzen zait nabarmen; Herioren hatzapar luzea azaltzen zaigu edozein bazterretan, eta bide guztian gure ingurunetik aldegin ez badu ere, ausartkiago hurbiltzen da batzutan. Bidaiaren beste gure batzutan ere ediren ditugu gela hartan ikusi genituen bezalako gorpu xahutuak, txoko gordeetara baztertuak edo galeria luzeetan botesk ikusi ditugu. Arian arian guztiz andegatu dituzten lagun txangolariak ikusi ditugu amaraunez bilduak. Eta atzean gelditu dira izainaren bentosek hurrupaturik. Haien azken lezgarriaren oroitzapenak iratxo nahasgarri bilakaturik jarraitzen gaitu atzetik. Iratxo temati eta bakerik ematen ez duena da sarritan. Urrutixe dakusat, baitere, ia irrealtasunean galdua, leku honetara sartu eta laister entzun genuen doinu erakargarria, eta hari jarraituaz ediren genuen gela saretua, doinu eta kolorezko haiez betea. Zafraldietan eman dizkiguten estausunak ere gogoratzen ditut maiz. Baina lehenaldira soeginaz ikusten direnean ez dirudite hain garratzak zafraldi horiek; haien ahulezia eta etsipena ere nahasten baitira gizarratoiek eman dizkiguten jipoien gorrotoan. Ezinbes-

tean eman dizkiguten zafraldiak izan dira gatazka horiek. Gezurra badirudi ere setiaturiko piztiaren antzera jokatu dute askotan gizarratoiek; heuren gogoaren arabera jokatu ahal balute latzagoak izango lirateke, noski, eraso horiek. Izkututik dihardute, aurrez aurre jarki gabe saiatzen dira heuren indarrez trebeegi ez direlako. Aisi tarterik gabeko atezuan gauzkate pasabide ainubeotan. Beti zerbaiti jarkitzeko prest joan beharra daukagu derrigorrez, horixe baita tunelaren bokalera ahulezian erori gabe eta zuhurtziaren bermaz iristeko dagoen era bakarra. Erauntsi guztiei eutsi behar zaie konbentzioendu, itxaropen eta senaren babesean aterbe hartuaz. Oraindik bide luzea daukagula derizkiot gainera. Argigunean hurbiltzen ari dela ematen badu ere, beti begiztatzear dugula baderitzogu ere, bide gaitza dugu oraino egiteko. Atzera so egiten denean ere aitzinerantz begirada kendu gabe jarraitu behar zaio.

Gertakariak txondartzen direla dirudi batzutan. Gertakizun baten gainera bestea gehitzen da. Badirudi jazoera bitxi, lixkar eta zalaparten katramila nahasten dela bazter eta ingurune osoan. Horrela agitzen denean iduri du denbora bera ere laburbiltzen dela, urte luzeak direla unetxo batetan bildumatzen direnak. Aldi luzetan korapilaturiko bilbea asaskatzen da zenbait une laburretan; ekaitza ortzen da. Unetxo zehaztezin batetan agitzen da adieraz ezinezko zurrunbiloa. Baina ezer nabari ez denean ere, guztia lotan edo hilduratua dagoela dirudienean ere, azpilan ixiliean bezala etengabeko garapenean dihardu izkutuko irakite batek. Ikusten ez den arren nonnahi nozitzen dira borborka ari den irakite ixilaren zantzuak. Noizbehinkako zalapartak eta lixkarrak ez dira gainez egiten duten zipriztinak baino. Sumendia bezala lehertzen da gatazka zipriztintusa. Eta zalapartaren ondoren barealdi itxuran berriz bere lekuratzen da oro, eta irakite ixil horretan jarraitzen du guztiak; aspergarri izaterainoko laxotasuna hartzen du orduan denborak. Baina ez da laxotasun nasai eta baketsua, aitzitik baizik. Lixkarra bera, gatazka bi-

zia hobe da batzutan; gatazkaren lazeria aurrez aurre agertzen zaigu, izkutuko mehatxurik gabe azaltzen da gatazkarik latzena izanik ere. Baina guztia bare ageri denean, ikusi ezinezko zemaia bizi bizi nozitzen denean, atsedenik gabeko teinkaduran irauten dute kiriorik gordeenak ere. Amaiezinezko luzetasun astuna hartzen du denborak, noiznahi datorkeen eta inoiz agertzen ez den erasoaren zai egoteak luzeegi egiten du denborarik laburrena ere. Bata bestearekiko, izaina eta gure arteko teinkadura edo behin betiko jarkitze honetan elkar ezagutze eta nerutze bat egin dugu. Denbora luzean dirauen temaren ezinbesteko ondorio dateke, agian, hori. Baina txango luze honetan zehar halako konpenetrazio batetara iritxi gara, nolanahi ere. Elkar ezagutzera heldu gara lehiakideok. Engoitik ez gara behiala galeriotara iritsi ginen umezurtz galduak. Ezta gizarratoiak ere, gizarratoiak ere ez dira gu ikusi bezain bizkor begirada sinotsuak eginaz desagertzen ziren mamutxo ergelak. Orain denok dakigu elkarren berri. Alde bakoitzak badazaguzki bere eta bestearen gorabeherak. Badakigu gizarratoien lasaitasunpean zer gordetzen den. Galeriotako ormatzarrak loditzen ari direnean ere badakigu ondoren zer datorkigun, aisa asma daiteke zerbaiten prestaketan dihardutela leku honetako arerioek. Amarauntzar hori erauntsia bezala erortzen ari denean ere, eta gero eta lodiago bilakatzen ari denean batezere, badakigu zein helbururekin edo zeren bila dabilen. Inolako zalaparta bortitzik gabe gertatzen den borbor ixil horretan agitzen da elkarezagutzerik sakonena. Orduan badakigu zer jazotzen ari den gure ingurune izkutuan, eta nekagarri izaten da denboraren laxotasuna. Halako batean unez igurikitako gatazka asaskatzen da, dena lehertzen dela dirudi orduan eta une labur batetan denboraldi luzeak iragaitzen direla ematen du. Mila orduz atxikitako garraisia oihukatzen dute gizarratoiek, eta mila egunez sukartsuki eman nahi izan digun erasoari ekiten dio izainak. Baina munstroak berak ere badaki gure berri, eta gizarratoiek ere ezagutzen dute gure oldea. Ibilbide ilun

hauetan zehar daramagun ibilaldian mila aldiz ikusi dugu izainak eta bere osakinetako bakoitzak digun begirunea. Arerioaren indar izkutuei edo agerikoei beti ohi zaien eta behar ere behar zaien begirunea digu izainak ere. Eta bizitzak berak adinako garrantzia du hemen jokatzen ari garenak; areago oraindik; bizitzaren zati honetan jokatzen dugu izate oso baten funtsa. Izainak ere jokatzen du berea.

Goizetik atera beharko nindutean gaur ere urdekume zikin hauek, arratsaldetik denborarik ez duk egongo nonbait, eta betiko leloa errepikatzearren etorriko hituan oheko egonaldirik goxoena izorratzera, bakar bakarrik atera ere gainera, pormasjoder, gutxienez eguzki pixka bat iritxiko balitz bailan nagoen denboran hezurrak-eta zertxobait epeltzeko, bestela egun osoan dardarka egon behar diat erremediorik gabe, putzu zuloak ere gelatuta diaudek atzo bezala, urdekume horren muturrarekin ederki puskatu daitekek jela hori, eta lodiagoa izanda ere bai ziur aski, bazter horretantxe ibiliko nauk, eguzki apur bat iristen duk horrexe, hemenditxik hara joan-etorrian ibiliko nauk, zuzen zuzen, ohiturak-eta galdu gabe gordetzearren besterik ez bada ere, buelta, edo bestalderantza ibiliaz sasikumez horren muturrarekin behin eta berriz topo ez egitearren, pozik egongo duk gainera, urde zikin hori, gizarteari kriston mesedea egiten, buelta, ari zaiola usteko dik; oh! izan ere, nola ez! bere bizia gizartearen mesedetarako oparitua eta halere inork maite ez berori, inork eskerronik ez bere neurrigabeko mesede eta eskaintzarentzat, gira, mutur ziniko hori ederki konpon niezaiokek nik dakidan leku batetan harrapa ahal baneza, ultzerak eta gainontzekoak sendatzeko lain gozamen lortuko niake horren galeratik, berorrek ere ondotxo, gira, zekik bai hori, eta hori

dakielako, batezere, ari duk orain neren zorigaitzetik asetzen, urde nadariktua, bestea berriz leotza miatzen ariko zaidak, pozik ariko duk hura ere, itzuli, nire gauzak ipurdiz gora ezartzen eta nere eskutitzak irakurtzen ari den bitartean ere gizartearen zaindaririk onuragarriena dela usteko dik zalantzaren izpirik gabe, eta nik eseri behar dudan, gira, konon gainean bere zapata zikinen markak uzten dituenean ere sekulako gizatasunera iritxi dela eritziko ziok bere buruari, sentimendu gizatiarrenen ikuttu berezien bezala joko dik, bueltan, komon geinean uzten duen zapata marka, sumunera iritsi dela pentsatuko dik ekintza horretan, eta zer esanik ez nire eskutitz guztiak, karpetatik banaka banaka atereaz irakurtzen dituenean, itzuli, etxera joaten denean bere andre eta umeei irakurtzeko miatuko dizkik nere gutunak, batek hau eta hori kontatzen duela gaurko eskutitzean eta bere neska-lanak hori eta bestea erantzun ziola lehengo astean, gira, edo beste halakok ez dakit nolako historiak darabilzkiela auskalo norekin eta halako eta bestelako kontatzen diela ez dakit nori eta ikusi behar duela datorren astean ea zer demontre kontatzen edo erantzuten dioten eta, buelta, umeak a bai! kontxo, eta beste lehengoan kontatzen zenigun hark zer demonio egiten duuu, eta horrelakoxe saltsak eta kontuak erabiltzen dituztela egingo nuke apustu, erratzeko arrisku handirik, buelta, gabe egin ere gainera, eta noski, gizartearen mesedetarako guztia, gizarteko alproja eta hondakinak gizabanako duin eta baliagarri bilakatzearren bere sakrifizio guztiak, eta gizaeskubideak errespeta eta, buelta, zain daitezen eskatuko dik, soinekoak ezezik larrua, ere urratuko dik giza-eskubideen aurkako seinalerik txikienik ere inon soma baleza, hemendik barrurakoan ere gizaeskubideak maila gorenera igotzearren aginduko zidak arakatu, itzuli, egin behar nauela eta ormaren kontra jar nadin, kanporakoan agindu didan bezala, eta nik ezetz esaten diodanean ez duk gustora gelditiko eta besteei deituko ziek gizaeskubideen jagoletza hobea adierazteko, eta horrela ere, gira, argi geratzen ez ba-

da, horrela ere gizaeskubideak arriskutan geldituz gero, hemen igurtziko niautek gizaeskubideekin, eta honako honetan ere igurtziko niautek, eta hemen ere bai, eta hemen, hemen eta beste honako honetan ere bai, gira, hemen ere igurtziko niautek, eta, lehengoan alboko ziegako laguna azaldu zen bezala, hau dena beztuta agertuko nauk bihar, hau dena gizaeskubidez estaila ibiliko nauk ondorengo egunetan, eta ziega barrura sartu, gira, ondoren ate azpitik igoal botako zidaatek gizaeskubide dosi bat, gogorra duk egunero lelo bero izatea, hemen ez duk, bada, estokolmo sindromerik sortzen, harrigarria duk hori, batzuei egun gutxi batzutan sortzen zaiek, itzuli, eta hemen, berriz, urteetan ere ez duk horrelako kasurik gertatu, fenomeno bitxiak ematen dituk izan ere, eta, hemen beste sindrome batzu gortzen dituk, beste espezialidade batzu diaudek ingune hauetan, último grito pedagogian, azken, buelta, moda zera! bo, aste honetan ere hamar minututako bisita, aurrekoan ere berdin eta datorrenean ere zer esanik ez, hamar ordutako bidaia etortzen eta beste horrenbeste joaten, hamar minutuz kristal eta barroteen, itzuli, alde banatan egoteko, gizaeskubideen oinarrizko puntua izango duk hori ere, hamar minutu horietan ez diakiak hitzegin ala ixil ixilik egon zer den hobe, esaten hasitakoa amaitzeko lain denbora ere ez dik ematen askotan, esan beharrekoak, gira, esatea ahaztu eta ixilik edukitzeko hobeak direnak esaten dizkiagu sarritan, azken agurra ematen bi minutuz luzatzeagatik beste hiru aste buruko zigorra sartu gainera putakume hauek, bejonaiela, duela bi urte idatzi zidaten euskarazko, buelta, eskutitza atzo heltzea ere gizaeskubideetan sartuko duk, eta suertea izan diat nik, zenbait duela sei urtekoak jasotzen ari dituk, aurtengo eguberritan hurrengo urtekoetarako postaleak idaztea izango duk egokiena, eta zein urtetakoak diren jarri, buelta, gabe bidaltzea onena, horrela ez diate hain zaharrak diren itxurarik izango behintzat, eta ea era horretan garaiz heltzen diren, euskarazko harremanak galerazi nahi zikigutek urde alenok halakook, gure eskuti-

tzak, buelta, irakurtzen gozatzen diate nonbait, eta horretarako erdarazkoak behar izan, begiratu egiten duk begiratu, nazkagarri zikin horrek, nik erakutsiko niake inoren gutunak irakuntzen, ederki erakutsi ere, gira, gainera, harropuzkeria hori ederki kenduko niake aukera berdinetan bageunde, hamar orduko bidaia egin ondoren andrea etorriko balitzaik ikusiko niake hamar minututan zer demontre esaten ausartzen hakioan kristal eta barroteen bestaldera oihuka, gira, ikusiko hinduket trantze bitxi horretan, edo seme txikiari nolako adierazpenak emango hizkiokeen jakin gura niake..., buelta, hiri boterea eman dianak ere ez dik erru makala, hik daukaan ardura eman dian hura pozik egongo duk noski, gizabanako bihoztoiena sentituko duk, heu ezezik izakirik gizatiarrena sentituko duk, buelta, hura ere, ziegako ate zulotik ixil ixilik neri begira egoten haizenean ere pozik egongo haiz ziur aski, barruko piztiari erreparatzen dioanean gizonago sentituko haiz, inor baino gizaki duin eta ohoragarriagoa sentituko haiz, itzuli, orduan ere, eta zer esanik ez goizaldeko orduetan ni esnatzen naizen arte argia piztuta edukitzen duanean..., itzuli, artatxoriak ere hotz dituk, lurralde hauetan larre motxa nonbait, lumak harro harro eginda diabiltzak, agian aspertuta egongo dituk horiek ere, ez duk harritzeko izan ere panorama honekin aspertzea, hegoak edukita ez diakiat nola kristo, buelta, dabiltzan hemen beste noarabaitera joan gabe, ausaz propio egongo dituk neuri begira, zer demontre egiten ote dudan-edo begira egongo dituk.., itzuli beno gaur dutxatu bai edo dutxatu ez? gaur dutxatu ez, nahi duena dutxatu dadila eta nik ordulaurden gehiagoz bailan jarraituko zioat, gaiera ur hotza egongo duk progreso berriren bat izan ez bada azkenaldi honetan, gira, aberiatua omen diagok, beti badiagu alukeriaren bat, motza ez bada luzea beti sortzen duk zerbait hemen, heu sartuko hinduket dutxan, urdekume zikin hori..., buelta, irratiak ekintza on baten berri emango balu, huraxe huke hezurrak ezezik animoak ere berotzeko onena, ziniko horren muturrean farra ederki egin-

go niake behintzat, eskutitza idazten eta Eginak irakurtzen aski lan eta zeregin badiat gaurkoz, eta, buelta, denbora gehiago izanez gero liburu horrekin jarraituko diat ea ezer garbirik ateratzen diodan edo bestela lagunari eskatuko zioat lehengoan aipatu zidan hori, bazkalondoan afalostean leihora aterako gaituk, gira, eta egunero bezala solasalditxo bat egingo diagu erdi oihuka eta abar, elkarren aurpegirik ez diagu ikusiko baina, azkenerako elkar ezagutuko diagu gutxienez, gainera, bixitaren gorabeherak eta gainontzekoak, gira, zer kontatua sortuko duk gaur, berri freskoak ez dituk egunero izaten hemen, afalondoan hotz ederra egingo dik leihoan, sudur eta belarriak ederki tenplatuko zaizkiguk, ziega barnean ere , gira, ez duk izaten izerditu beldur haundiriketa, baina merezi dik alboko lagunekin berriketa alditxo bat egiteak,...,gira, sasikume mutur-beltz hori zerbait esaten ari duk eta, nere ordubetea izorratua izango diat, buelta.

Arras estutu dira ezkaratze eta igarobideak; ormak hurbildu egin dira bata bestearengana, eta, jadanik ez da ageri galeria edo gela haundirik. Uzkurtu eta bere baitan kiribildu da izaina, bere indarrak hobeki atxikitzeko kiribildu da munstroa; kizkurtu egin dira bere erraiak ere, inoiz baino erritual ospetsuagoak eskaintzen dizko gizartearen atal zintzoenak, hitzaldi luze eta laudoriotan urtzen zaizkio gizartearen ordezkari goraipatuenak. Sekulako aipamenak egiten dizkiote; inoiz baino ozenago mentzatzen dira erritual horien zuzendariak, eta opari haundiak egiten dizkiote munstrotzarrari. Halabaina, inoiz baino latzagoak dira jasaten dituen harrikada eta mehatxuak, eta bere baitan uzkurte eta kiribildu egin da izaina. Egiten dizkioten laudorio eta goraipamen guztiek ere ezin dute berebiziko indarrera eraiki. Bere erraietan, galeria hauetan, berriz, orain artekoan izan denik beltzena da bertoko iluntasuna, kutsatuago eta likatsuago bilakatu da eguratsa. Bi edo hirunakako iladetan igarotzen gara ibilbideotan zehar, oso estutu baitira galeriak. Gutxien uste dugunean ate moduko ormatzar bat erortzen da gure taldetxo iadanik murriztuaren erdira, eta, lehendik talde txikitan bagindoazen, erdibitu egiten gaitu atetzar berri batek. Orduan talde bakoitzak bide bana hartzea beste irtenbiderik ez zaigu gelditzen; talde bakoitzari aurrean agertzen zaion galerian aurrera

jotzen dugu. Baina tarteka elkartu ere egiten gara taldetxo sakabanatu horietako batzu; tarteka geure alboko orman somatzen ditugu lagunen zartadak, eta orduan alde bietatik joka hasten gatzaizkio, eta ormatzarra erortzen den arte jotzen saiatzen gara, errauts bilakatua erortzen den arte. Gainera, elkartzen ez garenean ere nozitzen dugu beste lagun horien hurbiltasuna; hurbiltasun garratza batzutan, askotan, haien garraisi eta haien aiene latzak entzuten baititugu. Baina beste zenbait gertakizun bitxi ere jazo dira galeriotako ormak hain bortizki estutzen hasi zirenetik. Badirudi guztiak hartzen duela ezohizko abiadura, badirudi guztia murgildu dela bizkortasun berezian. Txangoa aurrera doan heinean pertsonaiak ere ugaltzen doaz. Lehenago lozorroan zeuden umezurtzak iratzarri dira apika: Lehen gure lagun edo ezagunen aurpegi eta irrifarrak agertzen zitzaizkigun beiraduretan, orain, haiek ezezik, beste aurpegi batzu ere azaltzen dira. Oldean azaltzen dira, gainera, beste aurpegi edo mutur horiek. Lerdea darietela hurbiltzen dira beiradura horietara, haginak eta hortzak erakusten dituzte txakur amorratuaren antzera, eta horixe direla esan dit lagun batek; gizatxakur amorratuak direla esan dit, gizaoihan eta gizaharan zabaletatik datozen gizatxakur amorratuak direla. Piztirik zikin eta traidoreenak dituk horiek, dio lagunak. Gu setiatzera diatozek izainaren ingurura, galeriotara sar balitez gure lepazainak ebakiko lizkigukete ahal izanez gero. Azken tantaraino zurrupatuko ligukete odola, horrexen egarri dituk gizatxakur amorratuak; ez diagok ezpain ertzetatik darien lerdea ikustea baizik horien gogoaz jabetzeko. Baina, gureganako gorrotoagatik ezezik, izaina bera eta gizarratoiak, gizarratoiak batezere, babesteagatik ere badiatozek. Gizaoihan eta gizaharan zabalak utzi dizkiate honaino etortzeko. Gure lagun eta ezagunak ikusten genituen eta ditugun beiratzar berberetan agertzen zaizkiguk ahausika mutur zatar horiek, gorrotozko lerdetan urtzen ari dituk piztitzar madarikatuak. Urtzen ari dituk heuren gorroto zikina asetzen ez dutelako; ahaleginak

egin arren ase ezin dutelako gorroto eta gose maltzurra. Eta egia da urtzen ari direla, lerde jario ugaritan daude. Gizatxakur andana haundia dabil izainaren inguruan itzulika, uhuriaka dabiltza isiltzeke. Harrikadek edo-ta irainek izainari egiten dizkioten zauri bakoitza miazkatzen diote heuren haragi bizitan jasanikoa bailitzan. Munstroaren larru guztia miazkatzen dute zomorro fosilizatuaren umezurtzek, kontzierto makabroa osatzen dute heuren uluekin. Galeriotan ere entzuten dugu uhuria urragarri horien durundio eta oihartzuna, hegalik gordeeneraino iristen da. Gizarratoiak marmarka hasten dira ulua horiek entzutean, gogoko mezua dute, piztu egiten ditu heuren uzkurduratik. Izaina bera ere buruzutago jartzen da hainbeste gizatxakur amorratuk inguratzen eta babesten dutela dakusanean; orroa beldurgarriak egiten ditu, eta bere erraiak gogortu egiten dira beren uzkurtasunean. Ez dira zabaltzen ezkaratze eta galeria hauek; lotuago egin nahi gaitu izainak, aboro korapilatu bere heste eta bentosetan. Gizarratoi okaztagarri horiek ere sekula baino hurbilagotik jarraitzen gaituzte, inoiz baino hurbilago dabilzkigu, sekula baino sarkorrago da heuren kiratsa ere, jasan ezina ia. Ez dakit ausardiagatik edo premia bizia dutelako hurbiltzen zaizkigun horrenbeste, agian behar beharrezkoa bilakatzen ari zaie gero eta gehiago erasotzea, heuren ahalegin guztiek ere geldierazten ez gaituztela ikusteak bultzatuko ditu, ausaz, horretara. Premia eta beharrizan horrek erakarri izango ditu gizaoihan eta gizaharan zabaletako gizatxakur amorratuak ere. Gainera, izainarengana hurbildu ez direnak ere uhuriaka ari dira gizaeremuetan; gizamendi gorenetatik hedatzen dute, uhuriaka, heuren mezu ozena. Izaina babestera dei egiten dute gizatxakur amorratuek; erritualak haunditu eta ugaltzera deitzen dute, gizarratoien goresmenez eraikitzen dute uhuriazko kontzertua. Galeriotako beiraduretatik ikus eta entzun genezake ingurumeneko nahas mahasa, entzuten dugu ibilbideotan eraikitzen ari den doinu gero eta ozenagoa. Herioren abestia gero eta ozenago bilakatzen ari da gizatxaku-

rren uluak lehen aldiz entzun genituenetik. Kantuz hasi gara geu ere, goraki abesten dugu, eta gure oinotsak ere gero eta ozenagoak dira. Gora eta ozen abesten jarraituko dugu, urrats bakoitzean ahotsa indartuz. Gatazka nagusiaren zantzuak dira entzuten diren durundioen oihartzunak; ortzantzaren durundioz urreratzen ari da gatazka nagusia.

Elkarren aurka diharduten bi etsairen egoera, jarrera, indar emaitza eta larritasuna goren mailakoak dira borrokaren amaiera hurbil denean. Edo, beste moduz esanik, borrokaren amaia hurbil dateke bi etsairen arteko gatazka eta jazargoa goren mailako tirabiran ageri denean. Bakoitzaren eskaintza eta iharduna ezin zintzo eta latzagoak izango dira etsai bien indarrak oso ezberdinak ez badira. Haatik, indarrak neurri berekoak izan ez arren borrokatzeko era ezberdinak pareka dezake tirabiraren kinka. Alde bateko edo besteko zuhurtzian, bataren edo bestearen konbentzimendu fermuan, duintasun eta eskaintza osoan datza garaipen edo hondamendiaren gakoa. Baina ia garaile zarenean ere, etsaia ahantxu menderatua duzunean eta ihesari emateko zure hatzaparretatik aska nahiean badabil ere, ezin diozu borrokarri utzi, ezin dakioke laga. Ezin da aski azpiratua eta mendertua dagoenik pentsatu, ezin da erasoa atertu, aitzitik baizik. Are gogorrago jo behar da menderatzear dagoen etsaia, zauri sakonagoa egin behar zaio iadanik larri baina oraindik gogor dagoen arerioari; itzuli eta gibeletik erasoko luke bestela. Gainera, etsaia ia menderatua ageri denean, larriki zauritua dagoenean, nork ziurta lezake etsai ahulduak sorginkeria zikin eta izkuturik aterako ez duenik? Eta borroka horretan elkarrenganako jazargoa izan ditekeenik latzena denean ere nola ja-

kin goren mailako gatazka denik, edo borrokaren amaia hurbil edo urruti denik? Bide osoa egiteko urrats bakoitzak du behin behineko garrantzia, urrats guztiak zuzen eta indarrez ematea da tunelaren bokalera buruzut heltzeko era bakarra. Zuhurtziak eta ahalegin osoak eramango gaitu du jarraitu. Txangoa amaitzen ez den bitartean ezin zaio bukaerarik eman istorioari. Idazki batek ezin buka lezake amaitu ez den bidaia.

Gartzelan idatziriko liburu gehienetan espazioa konstantea da. Espazioak ezartzen ditu legeak, mugak, hesiak. Espazioak zehazten du joku-taula. Espazioak asmatzen ditu barrua eta kanpoa.

Liburu honetan, gartzelaren espazioak izainaren itxura hartzen du, eta izainak, mila ahoz, presoen odole zurrupatzen du, barrukoen baloreaz elikatzen da, beraien onena zurgatzen du, eta zukua ateratzearen ateratzeaz, bizirik mantentzen da, antzerraturik dituenen indarre eta kemena bereganatuz.

Espazioa, hala ere, ez da definitiboa. Ezin du barrukoen bizitza osoa mugatu. Hesien gainetik altxatzen da presoaren borondatea, eta beraren subjetibitateak gainditu egiten du espazioaren itxidura.

Borondate honen fruitu duzu eskuen artean daukazun nobela. Izainak bere helburua lortu ez dueneko lekukoa da bera. Ez du sujetoa meneratzerik lortu, ez du barne-bizitza agortu, ez du indarra suntsitu. Etsi egingo ez duela aldarrikatzen du egileak. Gorrotoz eta denboraz, eta denborak ematen duen gorrotoaz sendotzen da nobelaren pertsonaia bere nortasuna trinko mantendu nahian.

«Izaina» nobela indartsua da, dentsoa, gogorra, eta une batzutan, hunkigarria.

*Laura Mintegi*



Euskadiko Amnistiaren Aldeko Batzordeak